*deutsat*, esto es en version literal, *le he hecho hacer*. Asi, *eracurri* significa *urrilu eraguin*; y el que lee va disminuyendo ó desgranando las letras. Se dice *artaburubac iracurri* ó *garaundu*; y los bascongados lo han aplicado á la lectura. *Iracatsi* ó *Eracatsi*, es lo mismo que *icasi eraguin;* hacer aprender en lugar de enseñar.

*Eracutsi*, es, *icusi eraguin;* ó hacer ver, mostrar.

*Erabilli*, es, *ibilli eraguin*, hacer andar.

*Eraatsi*, es, *ichatsi eraguin*, hacer pegar una cosa á otra.

*Eracarri*, es, *ecarri eraguin*, hacer traer

*Eragotzi*, es, *ichi eraguin*, hacer dejar ó impedir.

*Erassigui*, es, *issio eraguin*, hacer que se encienda.

¿No es excelente este artificio? ¿Se han podido formar por el acaso semejantes composiciones tan organizadas y de tanta delicadeza? Los que no quieren confesar que el bascuence es uno de los idiomas venidos en la separacion de las gentes é infundidos por Dios en la confusion de los idiomas, imaginarán que ha sido muy cultivado en algun tiempo, pero no nos darán ni un testimonio, ni prueba alguna de su dicho. Para la cultura eran menester hombres muy ilustrados, y para que el trabajo pasase á los desiertos, no bastaban libros para los que no saben leer, ni aun escuelas públicas. De estas hay en el bascuence y se procura aprendan los niños el idioma castellano, pero son

raros los maestros cultos y ningun discípulo perfecto sale de estas escuelas. Búsquense, pues, hombres muy ilustrados, academias públicas, libros abundantes, lectores diestros y escuelas populares en la antigua España bascongada. No basta para ello lo que dice Estrabon, que los *Turdetanos de la Bética, los mas sabios de los españoles, conservaron su propia lengua hasta la entrada de los Romanos; que de tiempos antiguos tenian gramática de su lengua, composiciones poéticas y aun leyes en ella.* Una gramática, algunas poesías y algun código de leyes no arguye mucho trabajo de cultura. Nuestros misioneros americanos han formado gramáticas y diccionarios, trabajado poesías y catecismos en varias de las lenguas de aquellos paises; y con todo, no sabian el idioma en que escribian, con aquella perfeccion original que tenía entre los rústicos ó salvajes. El P. Larramendi ha dado su arte y su diccionario; y ningun rústico bascongado ha aumentado su ciencia en el bascuence, ni todas las fatigas de este ingenioso bascongado, han llegado á descubrir toda la perfeccion y fecundidad de nuestra lengua. Con todo, es verdad, que desde la época en que trabajaron y publicaron algunas obras los diestros bascongados Mendiburu, Cardaveras y Larramendi, se nota mas cultura en los sermones, y hay en Guipúzcoa no pocos eclesiásticos que han hecho un estudio serio del bas-

cuence y que le hablan con gallardía. Pero en Vizcaya nada se ha cultivado, y son rarísimos los que se han dedicado á estudiarlo en los libros vivos, que son las bocas de los rústicos.

---

# DIÁLOGO PRIMERO

ENTRE EL INCULTO BASCONGADO Y BARBERO MAISU JUAN Y EL CULTO CASERO PERU.

---

Se dá principio al diálogo en una venta, donde se encontraron casualmente.

PERU. Jangoicuac egun onac emon daijozala.

MAISU JUAN. Bai zuri bere adisquidia.

P. ¿Berori baisen Jaun apaindu batec oñac imini ardan-eche onetan? Toqui au guizon baldres, zantar, aciera charrecuentzat obia da, berori langüentzat baño. Ez naz ni Jauna; abarcac oñetan, chapel bat buruban, guerrestuba gorputzian; au da nire apaindurija guztija: baña echagun, icen onaren zalia nasan aldeti, ez oi nas sartu ardanteguijetan nora ecian, premiñaz, ta ecin bestez baño, ez jacolaco echagun beguiratu bati ondo eguiten buruba bat eguitia guizon ospetsu, burrucari, ondatzalle, alper, ta baldanacaz. Ez nau orainguiño inoc icusi ardauac igarota, gach eguinda, zabuca oñac locaturic, ez miña motelduta, ez beguijac lausotuta, asco leguez euren osasun, ondasun ta

arimen caltian. Bein baño gueijagotan izan nas neure errico Buru, edo Piel, ta darda gañian erabilli daruadaz ardao saltzallac belutu, edo ondo gautu artian dauqueezanian eche barruban nequezaliac, edo ate edeguijaz ardaua salduten badabe debecauta daguan orduban. Ez deust ecec gorroto ta igùin gueijago emoten nequezale edan-sarri, ta ardao zaleeguijac baño. ¿Cer esan nei bada berori emen icusita? Aserratuco ezpalichaquio jaquin gura neuque nor dan, ta cec ecarri daben ona.

M. J. Adisquidia; imini eguizu chapela buruban, ta esango deutsut nor nasan. Nas bada oraiñago igaro dozun errico Barberuba, ta deitu nabee gaiso bategana. Pagau deuste visitaco errial cidarra; baña ain dollorrac izan dira, cein da ez deusten atera trago bat: alan sartu nas emen cuartillu bat atera, eta cerbait jaatera, bada urrin eguiten jat neure echia baruric biurtuteco.

P. Nic uste neban bene benetaco andiquiren batégaz verba eguiten nebala; agaiti nenguan chapela buruti quenduta lotsa nintzala verba eguiten. Jaquin baneu lenengoti Barberu char bat baño etzeniala, ez nintzan Jaunca zugaz egongo, ez da bere buru utsian. ¿Eta Barberu errucarri bat, ta inoren gachaz vici dana; gaisoric ezpadabil cer jan ez daucana, ain arro ta apaindu? Aimbeste soñoco bichidunez, eta ori astegun buru zurijan videz zabiltzala?

M. J. Adisquidia, eguizu verba modu obian: zuc

ezdaquizu cer dan Barberu izatia: lengo Barberu chaarrac ibilli oi cirian deshonretan euren opicijo onrauba; batuten cirian tabernetan ta nun nai; guichi estudijau, ta guero ill edo vici, erreceta bat eguin, boticaco asco artu eraguin, erremienta charrac euqui, ta barriqueta batzuc nequezaliai esanda, trago galantac ezarrita, Medicu jaquitun batec baño pama gueijago euqui eruen. Baña gaur Medicuben parc gara. Asco aurreratu da Cirugijan. Ni egon nas Madrilgo ospitalian urte bijan. Asco icusi dot; ta asco dacusanac, asco icasi darua. Ostera bere dirautsut; ¿cer dala uste dozu Barberuba?

P. Barberuba barberu, ta mozolua mozolo. ¿Mozolua baño nun dago egazti edertuago janciric? Baña ezdau inos mozolo izateti urten. Soñoco apaindubac ez deutsa gaisuari osasuna emongo. Biajon daguijala nire errico Barberubac. Bere videco jancija da chano gorri bat ta bere ganian chapel esquerga berroguei urte euquico ditubana. Eztabil zu leguez basatzaric basatza oñetaco meiacaz, ta bai zaldi, berac beste urte ditubanian. Eguija da, nun nai topetan dabela bazcari, ta aparija. Guztijac asco gura deutsee bere lautasuna gaiti, ta jaten dau edoccin gauza baserrijetan. Autor deutsut, ardao zalechuba dala, buruba ta barruba berotu daruazala larregui, ta ori éria dan guztijan. Baña catubagaz zutinic zucen egon ecin danian, topetan ditubala zanac, ta escutur sendó ta icara baguiaz ate-

raten deutsala edertó odola gaisuari. Au celan dan ez daquit, alan dala bai.

M. J. Orra nic dinodana, orrelango Barberu perdularijo molde bagaac galduten deutseela pama guztija Barberutziari. Eta ¿ce culpa dauquee beste gure opicijocuac zure errico Barberuba baldresa, ardaora emona, ta astaqui bat bada? Aztuco jacon gaztetan icasi eban apurra.

P. Eztau berac orrelangoric uste, ta ori esango baceunsquijo berari, enzungo cenduquez enzuteco onac. ¿Ezdozu inos enzun, *bacocha bere zoruac vici dabela*? Ac uste dau eztaguala bera leguezco Barberuric Bizcai guztijan: bein banaan ateraco deutsuz eguin dituban osaquintza mirarirano jó eraguitecuac. Zuc barriz dinozu, astaqui bat izango dala dongaro jasten dalaco, nequezaliacaz bat eguiten dalaco, ta liburu zaarrac austu ta baztertuta euquico ditubalaco. Ac esango leusquezu, soñoco bichidunac, ta janz-barrijac eztacarrela jaquiturijaric, ta bai liburubetaraco naguitasuna. Enzun neutsan egun baten esaten nequezale ascoren aurrian, ta bere eusquera chaarrian, *Jangoicuac librau zaguizala Barberu modaco, Dotore char, apaindu, ta barrichubelati. Cortejante batzuc dituzu; igaroten jaquee demporia certzuc moda dirian conteetan. Pigurerija guztijac gura ditube, Jaunchoe eguin gura dabee, ta andiquijac baño apaindubago ibilten jatzuz. ¿Ce curaciño eguingo dabee Barberu delicau oneec? Ibi-*

*llico dira gaisuen artian odolac manchau eztaguizan bildurrez sangrija bat eguin biar danian.* Alan cinuan, ta icusi bacenduz orrelan jancita esango eutsuzan enzun guraco etzenduzanac. A vici dau bere zoruac, ta zu zeuriac: eta guc ¿nori sinistu? ¿Ari, edo zuri?

M. J. Aren auaz, ta buruban, desbergüenza gogorrac esaten deustazuz.

P. ¿Ce verba da desberguencia? Nic eztaquit. Esan guraco dozu lotsabagaquerija. Eguizu bada verba eusqueraz. Ezteutsut nic lotsaric galdu, ez galduco bere; baña bai eguija garbijac esan, ta minduten bazara, zeuria izango da erruba. Ezdozu igon biar zarian baño gueijagora. Barberubaren icenac esan gura dau neure ustez *Bizarguillia;* alan esaten deutsagu guc. Zuc dinozu *apeitau* bizar eguitia gaiti; esango bacendu apaindu apeitau ordian, ederto esango cenduque; cerren zubec apainduten dituzun gure arpeguijac uraz, ta guero bizarra quendubaz. Zuc emoten deutsazu labañiaren icena gure arpeguijac apaindu ta garbituteco erremientiari, ta obeto icentauco cenduque *garbitzalle*, edo *apainquiñaren* verbiaz. Euscaldunac bagara; ¿cetaraco verba eguin ez gueure asaben verbacuntzan? ¿Cetaraco esan barberuba, labañia, ta onelango icen arrotz, zantar, ta erbestecuai artubac?

M. J. Aguiri dozu, adisquidia, baserrijan aci zariala; eztozula inos Bizcai ta basoarteti urten. Bar-

beru edo bizarguillia baño gueijago naz. Iru titulu emon eusteezan Madrilen, ta orretaraco igaro nitu-ban iru esamina crubel tribunale lotsa andico ba-ten. Nas bada Barberuba, Sangradoria ta Cirujauba.

P. Ori baño gueijago ezpadacardazu, ni nas Arotza, Arguiña, Itzaña, Achurlarija, Baso-azterla-rija, ta errazago icasten dira zure biarguinzac ni-riac baño.

M. J. Guzurra dinozu. Asto andi bat zara. Asi-co bacina zu norbait apeitetan, arpegui guztija ichico ceunsquijo odolez beteta. Artuco bacendu nire lanzetia, eguingo ceunsquio gaisuari zulo andi bat, edo bai ebagui zana: ¿eta cer izango litzate azur ausijac compondu biar bacenduz, edo osatu golpe andi bat artu ta heridu dana?

P. Maisuba; ¿eta cer eguingo cenduque zuc bur-di bat banatu, burpillac locatu ta ascora bat emon-go balichaquezu? Etzenduque jaquingo ciri bat eguiten, ta galdubago largaco cenduque burdi gai-sotuba. Asico bacina guero burtardatza eguiten, apurtuco cenduque dana leundu biarrian ta ebagui-co cenduque biar bada ceure oña, edo berna azur-ra. ¡Noc icusi ceinquezan coltzaguintza, arrijac lan-duten, soloco biarretan! Zu bialdu biar cenduqueez basuen azterrenac ateraten, ta ebaten guero ceim-bat burdi icatz daguan arlo, edo saill andi baten. Bizar eguiten icasten dabee mutillac laster. Badira baserritar bizar eguiten jarduten dabeenac ta zuc

baisen escu bigun samurrac baleuqueez, ta ez laija, achur, ta ascora quirtenacaz azaldubac, etzeunsquijue irabacico temaric noc obeto eguin. Odola ateratia, escutur icara baguia ta begui zolijac ditubenentzat, ez da orren gauza gacha. Amabost egungarreneco icasico leuque edoccin andrac, ta zuc baisen ondó edo obetó iminico lituquee chaplatachubac, ta eraatsi zaurichuban locaarrijac ascatuco ez dirian guisaan iñoren escu baga. Barriz; ¿noc igarri zubei daquizuzan edo ez, osatuten zaurijac, ezagututen bedar onac? Zuc esan biar etzenduban ondo acija bacengoz, esan deustazuna aurquez aurque, edo neure musu garbijetan; *guzurra dinodala, asto andi bat nasala.* Asco nequezaleri esan baceuntsa, etzenduban urtengo emendi beste barberu, edo zauri-osaguillaren baten premiña baga. Baña ni naz guizon baquetsuba, eruapen andicua, dongaro enzun arren, ez daquidana dongaric eguiten; verba baten, Jangoicuaren bildurrecua. Gorde zaite bada aurreracuan orrelan verba eguiteti.

M. J. Ez eguizu bada zuc bere ain dongaro esan nire opicijocuac gaiti.

P. Ez dinot nic dongaroric zure biarguintzia gaiti: guizon biarrac zaree celan bait: bizarra quendu baga ecin egon gueindez; atera biar da odola gach ascotan, baña neure ustez, ez aimbestetan, celan ateraten dan; eta nic aguindu biar baneu, odola ateratia gaiti ez leuquee zubee leguezcuac

diru berezcoric eruan biarco, edo beintzac ez odolaterateric eguin Osaguille nausi, Medicuben icena emoten jaqueenac gaisua icusi, ta oneec aguindu artian.

M. J. ¿Cegaiti ez?

P. Cerren bestelango gaiso icustetan baño aloguer, edo biar sari gueijago emoten bajatzu odola ateratiarren, bildur izateco da diru guriac aci edo gueitu ezdeguizan odola aterateco preminac.

M. J. ¿Orren arima galducuac eguiten gaituzu, cein da sangrijac emongo ditugun diru gueijago irabazterren? ¿Cer daqui medicubac guc baño gueijago nos biar dan sangrija?

P. Beintzat ez dau ichutuco au diru gosiac odola aterateco aguindubaz. Besteti; ¿cegaitic orrembeste arrotu zeure buruba uste izateco ac beste badaquizula? Daquidana da, urte gueijago iragoten ditubela icasten gaiso osatutiac dacazan cereguiñac, ta guzurra ezpada, enzun dot, euren mendian egon biar dozubela zuc ta zu languac; ta ecin odolic atera ceinqueela euren baidurija baga. Bacochac gorde biar dau bere toquija, ta ez aguertu eraguin soñocoz, edo aoz eztana. ¿Ez dozu inos enzun esaquera asco esanguraco au; *Marija bichiguina, suba da oguiguiña?* Eta beste oneec; *Zulo bacochari laacua: aziac beria quirtena, ez dau guizonac izan biar urtena.* Zure aita ta asabac vici cirian arrotasun baga; artua beeuqueen, pocic jaten ebeela; abar-

cac cirian euren oñctacuac, ta ortocic ibilten bere ez cirian lotsatuten. ¿Eta celan aci cendubezan zu? ¿Celan cinuazan escolara?

M. J. Ori orrelan da. ¿Baña nic igon badot opicijo honrau batera, cetaco deshonrau biar dot erropa zantarracaz janciric?

P. Zagoz issillic. Bizcaitarra zarian aldeti eguinda daucazu idalguija; ez baña Bizarguin, Odolateratzalle, ta zauri-osatzallia zarianeti. Esquerrac emon eguijozuz nequezaleen oneguitasunari, ceintzuc esaten deutsuben *Maisu Jauna,* ta *berori.* Ni nas iru echaguntzaren jaube; buruba larregui urratu baga, badaucat cer jan, ta cegaz janci, ta ez dot oraindino Jaunaren icenic enzun neure umeen aoti bere, ta gura bere ez dot. Badaquizu barriz celan jazten nasan. ¿Cer ete daucazu gueijago? Vici zara iñoren gachaz, iñori miñ emonaz, iñori odola ateriaz. Uts edo bete emoten dituzu osagarri icenecuac. Illtera badua, achaquija, esesinoe, ta aquiaculia auan. *¡Ai leenago dei eguin baleuste! ¡Ai nire esanac eguin balira! ¡Ai aua gorde baleu! Orain ecer ecin nei; datorrela Abadia Elessacuacaz.* Or compon eguinda, biar alper edo caltegarri baten sarija artuta, zuaz zeure echera, ló eguiten dozu atsacabe guichigaz. Osatuten bada celan edo alan, *zorijonian dei eguin jatan; atera dot eriotziaren autzelati,* au dinozu arcuntza guztietan, ta zoro zoro zanzubez nequezale gaisuac. Alan jazoten da nic eza-

gutu ditudan zure biarguintzacuacaz: zure barri garbiric ez daquit.

M. J. ¿Cetaraco da ni bardin imintia zuc ezagutu dituzun Barberu chaar ta baldresacaz? Errebañu baten ardi batzuc dagoz mardo ta guicenac, ta bestiac macal ta argalchac. Aec ezequijen Anatomijaric, nic bai; aec ez eben Ospitaletan oñic imini; nic eguin ditut urte bi. ¿Cetaco erasoten deustazu lengua?

P. ¿Eta ce Anatomija daquije, nungo Gaisoteguijetan egon dira andracume azur imintzalla, barriqueta ta verba laban baga azur locatu, ta destoquitubac zucenduten daquijezanac? Zubec languac baño osasun bedarren ezaguera gueijago dauquee onelangoren batzuc. ¿Cer da Anatomija dontsu ta icen ospe andico ori? Verbia banzugu; baña cer dan, ez.

M. J. Zuc ecin aitu cinaiz nic esan neiquezan gauza asco Anatomija expliquetaco. Gure opiciocuac ebaten ditube gorputz illac, ta bein banaan icusten ditugu barruban daucazan zati andi ta chiquin guztiac. Badaquizu guero cer nun daguan; nun min daben gaisuac; cec on leijon.

P. ¡O guizon gogorrac! ¿Illai bere parquetan ezdeutsazube? ¡O ciquin zantarrac! Ori epailla baten cereguiña da.

M. J. ¿Cer da epallia?

P. Epallia da zuc carnaceruba esango ceuns-

quijona. ¿Icusi dozu inos onelanguac cer eguiten dabeen idi ta belarluciac illten ditubenian? Alcandora besuac jaso, ta gañibet zantar bat aldian dabeela dabilz abere illen zatijac ateraten. Baña ichi daiogun oni gueroraco, ta neuc aztertuco dot zure jaquiturija andija, ta icusico dogu zarian edo ez illepalla edo anatomico ona. ¿Cer da baña vicijentzat cerbait ateraco bacendu illac ebateti?

M. J. Adisquidia banua ni emendi neure echera. Ez naz etorri ona trago bat ezartera baño, ta ez zure desbergüenza ta burlac enzutera.

P. Ez arren: emoten deutsut verbia ezdeutsudala aitatuco atsacaba emongo deutsudan gauzaric. Alan eguin daiguzan baque osuac, emoidazu escu ori, ta adisquide garialaco ezaugarritzat eguin daigun alboroquia, ta au neure diruti.

M. J. Ez dirudi orrec ondo. Zuc ateraco bacendu ardaua zeure costura, urrengo baten esango cenduque barberu ta cirujaubac diriala dollor, prestubez, cicotz batzuc, iñoren lepotic ondo edaten dabeela. Nic pagauco dot ardaua, ta pagau eguizu zuc bazcari arin bat.

P. Aurra bada, izan dedilla alan.

M. J. Nesca *(dice el Cirujano á una criada de la ventera)* atera eguin azumbre bat ardao, ta esaijon ugazaba andriari ipiñi daigula cerbait bazcaitaco.

La moza. Ez nas ni nesquia, nescatilla utsa baño. Icasi eguizu beste verbeeta bat.

M. J. ¿Au cer da? ¿Guztiac nire contra? Ozta eguin ditut baquiac guizon onegaz, ta esesten deust nesca batec. ¿Cer don bada nescatillia nesquia baño onradago?

La moza. ¿Cer dan? Nescatilliac urten lei nora nai bere ule trenza ederragaz; baña ez nesquiac. Aituco dozu onembestegaz.

M. J. Ez nequijan orrembeste, ta parcatu eguidazu opendidu bazaitut, ta atera eguizu ardaua.

P. Ezdaigun edan cerbait jan artian. Nescatilla, ecarri eguiguzuz topinian icusi ditudan arbi, aza, ta oquelia erretillu baten. Ez eguizu ecarri saldaric, ta bai catillu bat, ardaua guero edateco

M. J. Adisquidia, ¿cer da erretilluba? Platerian ateraten dira aza ta oquelia.

P. Erretilluba da euscaldunen platera. Ecarrico deuscuben erretillubac euco ditu guichienez berroguei urte, ta iraungo dau beste aimbeste urtian. Zure bestelango plateroc austen dira egunian bein lurrezcuac badira, ta bestelanguac, edo urtu oi ditu subac, edo ausita saldu edo trucau biar izaten dira. Zurezco collara bat ecarten badeuscube, ezta guichi izango. Barriz alperrac dira nic eche batzubetan icusi ditudan oratzalle, zubec tenedoren icena emoten deutseezunac. ¿Cetaco emon euscuzan Jangoicuac amar atzac edo atzamarrac? Ascoz gozuago dira aza ta oquela zati escuz ebagui, atzacaz ta oguiz batu, ta jaten dirianac. Ondo izango da

zamau lodi bategaz estalduten badeuscube mai ardao cetacaz ciquinduba. Euscaldunac bagara benetan, vici biar dogu gueure aasabac eracatsi deuscubezan ecandubacaz. Serbilleta oraingüen ordian eztaucazu imini baño aus zapi, edo marrats bat loitu etzaitian. Ecarri daigubela galleta baten ura, ardauari ezarri gura badeutsazu, bada niri ur-ardauac eguingo leusquet sabeleco miña. Nic biti bat; edo ardao utsa, edo gueijenian ur utsa.

M. J. Errazoia daucazu: ezdira alcar ondo compoduten ardaua ta ura. Urte asco da uric edan eztodala saldaan ezpada.

P. Nescatilla, inguira zaite, sabel-zorrija eguin jacu, ta edan guria aimbeste verbaren ondoren. Dulabre ta ecertacuac dirian otseiñac, arin eguin biar ditube gauza guztijac. Ecarri eiguzu ecarrico dozuna.

*(Viene la moza con la comida despues de haber colocado la mesa mal ó asquerosamente cubierta y dice ella):*

La moza. Egon zareé luzaro barriquetan milla verba alper eguiten, ta guero beinguan ito biarra. Ona emen lapico galanta, ta pichar bete ardao: ase zaitece.

P. Adisquidia, etzazaudaz zeure icenez, ta baquetu garian ezquero, jaquin gura neuque celan derichun.

M. J. Niri esaten deuste Don Juan Jauna, baña

zuc esaidazu naozun leguez: ta zeuc ¿ce icen dozu?

P. Niri esaten deuste Peru batzuc, bestiac Perico: ezdot nic, umeetati bere, Jaunaren icenic enzuten, ta guichiago *Donenic*. Icen ederra dozu. Done Joan, edo San Juan gauza bat dira. Donianiac esaten jaquee San Juanetaco egunai. Beraz zuc bere Doniane barri batzuc ecarrico dituzu, subac eguin, donian bedarrac erre, ta egun gozatsu bat igaro eraguiteco. Nic esango deutsut emendic aurrera Maisu Juan, ta zuc niri Peru, ta alan aituco dogu alcar, ichiric ezjagocuzan Donoc Abade, ta bene benetan Andiquijac dirianai.

M. J. Ondo dinozu, ta eguija esango badeutsut igarten neban ezjaotala niri zuri baño guejago ez Jaunic, ez Donic. Asco da verbaric, ta equin dajogun aurrian daucagun oni.

*Empieza á comer Maisu Juan y dícele Peru.*

P. Maisuba, bedeincatu daigun maija; nire echian ta baserricoen artian beti jan aurreti alan eguin oi da, baita jan ostian bere esquerrac emon Jangoicuari, ceñen escubetati jatorcuzan on guztijac.

M. J. Ni baño obiac zaree, ezdot nic mairic inos bedeincatu.

P. ¿Cer diñozu? ¿Nun aci zara? Bedeincatu eguizu bada gaur esan eztaiguben cristinau gaistuac gariala.

M. J. Baña ezdaquit celan eguin; ta eguizu zeuc.

P. Zagoz issillic. ¿Cer esango litzate enzungo ba-

litz baserritar batec bedeincatuten dabela maija, ez jaquinarren Barberu ain apaindu, ta Madrilen urtiac eguin ditubanac? Escolauba zara; erabilli ta iracurri dituzu liburu asco, ta celan icasi ez dozu?

M. J. Peru, ez naizu lotsatu, ta errezau eguizu cer edo cer aguin artian, ta eranzungo dot nic bere aldodana igarrico ez deuscuben moduban noc bedeincatuten daben maija.

P. Aurra bada: Asten nas, «Aitiaren, ta Semiaren, ta Espiritu Santubaren icenian:» *Neure Jauna ta Jaincua, gure ichadote guztia zugan dago, ta emoten dozu bere demporan jaateco biar doguna. Zeure escuba zabaldu, ta guztioc bedeincatu gaguizuz.* Aita guria Cerubetan zagozana.... *(Reza.)*

M. J. Ez daquit nic eusqueraz Aita gureric, ta eranzungo dot erdera.

P. Maisu Juan: ¿etzara ori esaten lotsa? ¿Nos aztu jatzuz chiquitan guraso, edo Escola Maisubac iracatsi eutsuzan escaari Elesiac artuta daucazanac, ta Cristo berberac iracatsi eban Aita gueuria? Ezconduba zara? Boozu umeric?

M. J. Ezconduba nas, ta baditut iru ume; baña Amac dauca dotrinia iracasteco arduria. Ezda ori nire opicijua. Ez eban Jesu Cristoc eusqueraric verba eguin.

P. Ederto: ezda zure erdera mordolluan bere: baña norc nai jaquin biar dau Aita guria bere Amaren sabeleti icasi eban verbeetan. Zuri jaotzu

Amari baño guejago umiai gauza on guztiac iracastia. Baña ezda orain verba eguiteco demporia ta gaquijozan aurrera. *Doe guztien emolia ta gure Jauna; zure escuti guc artu ta jan biar dogun guztia, zuc bedeincatu eguizu, Jesu Cristo zeure Semia gaiti, ta bere icenian. Aita, Seme, ta Espiritu Santubac guztioc bedeincatu gaguizala, ta Ceruco bere maira betico eruan gaizala. Alan izan deilla.*

M. J. Peru, ¿nun icasi dituzu erretalla luce orreec?

P. ¿Erretallac esango cenduque Elcsaco erregu ta mai bedeincatutecuac gaiti? Obeto eguingo cenduban quendu bacendu buruco querizgarri, zuben auan sombrelluba derichona, guc quenduten dogun leguez buru-chapela. Eguija da zuben capela barregarri, ta asmo barricooc ez diriala gauza, ez euriti, ez eguzquiti guizona gordeetaco. Asco da: jan daigun.

M. J. ¿Ce oquela plaga da au? Zalago dago zoruba bera baño. Azooc balzac, ta queetsubac jaraozac. Arbijac gogor egosi bagaac.

P. Maisuba, ondo milica, ta buperia zagoz. ¿Uste cenduban ipinico euscubczala eperrac, ollandac, ollagorrac, ta andiquijen maijetaco janari gozuac? Oquelatzat ipini jacu aquetirenaren aragui gacituba. Idi guicen, ta cecin eguitecuac eruaten ditugu olaguizon, ta aberatsen echeetara, diru ederrac artuteco, ta gulangüen echeetaraco gordeten ditugu chaalchu, idisco, bei zar edo aquetirenac. Go-

se onarentzat ezdago jaaqui dongaric. Aberatsen maijetan echaquee ain gogoz equiten gueeli guizen, ta egaztijai, celan baserri echeetan arbi, aquetiren, ta aza lurruna darijuenai. Ogui zurija aentzat baño, gozuago da guretzat arto erregutada galanta. Talo ondo eguiña auspian, moroquilla, eznia, gaztañac, ta sagarrac daucazan nequezalia, dontsuago da andiqui guztiac baño. Miliquerijen artian ezda aragui sendoric eguiten. Beguiratu baserri mutill, ta guizon gaztiai, cein mardo, ta mamintsubac dauqueezan matralla alde ta zancuac. Cimentu onac daucazan echia, irauncorrago da argalac daucazana baño. Icusi eguizuz andiqui ascoren alabac loraz ta bichiz beteta. Ichurgatu, ta zurbilduta, gauza ez batzuc, argal, erquin, aise apur batec oeraten ditubala, oñac cerbait ezcotu, edo bustiten bajaquez, estulga ito biar dabeela. Barriz gure nescatilla, euri ta aterri, eguraldi on edo char, ortocic, edo abarca zulatubacaz dabiltzanac, ¿cein desbardinac besteetatic? Achurren, laijetan, irabatuten, landara jorraan ta biargueiric gogorrenetan, guizonen albó ibilli arren, eztarue ain erraz estulic atera; ez osaguille edo medicu atzian ibilli. Barijecubetan oquelia jaateco gach andija biarco dabee. Jatsico dira meza enzutera jai egunetan indrisca, ta eurra bada bere; ta ain sendo ta indartsubac dira, cein da urun zacu, edo zorro andi bat buruban dabeela, artuco lituquee besape bijetan andiquicume bi, vide lu-

cian eruateco. ¿Ez da alan? Maisu Juan, ¿cetaco zabiltz bada arpegui chár, igüina ta muquertasuna aguertuten erretillu onetan bota deuscubezan lapicocuai? Jaizu arin.

M. J. Jan biar cer edo cer besteric ezdaguanian. Baña bildur naz errebesau ez daidan, edo aise dongas bete ez nadin.

P. Jan daigunian erdiraño, emongo deutsut edaaten ardaua.

M. J. Ecin egon neinde artietan edan baga. Artu ditut celan alan atscada bi aza, aquetiren onen atal bat; ta iruntsico badot, edan biar dot. Ecartzu laster trago bat.

P. Eutsi bada neure escuti.

M. J. ¿Au cer da, Peru? Ardao oni ezarri deutsee ura; motela dago, indarric ez dauca. Bestelango bazcarija. Artu daijogun contu maija serbietan dabillen nescatilliari. ¿Ce icen dau?

P. Praisca dericho: baña orrelangoric aitatuten badozu emen, izango da atralaca, ta baralla andiren bat. Nescatilliac esango deutsa ugazaba-andriari; asico da aguiraca, chilijoca, ta verbaric onen esango deutsuna, izango da guzurra dinozu. Ta cer daquit nic Pielari dei eguinda barregarrizco gauzaren bat emen icusi ez daigun? Maisu Juan, obe izango da isillic egotia, ta ez ecer aitatutia. Guizon sacatu ta eruapen andicoac esteutsa calteric ecarrico burubari; baña irritu, aserracor, sutsu,

ta miñarinecuac euqui lei guerora damuquizuna.

M. J. Asco da zuc esatia, Peru; obeto daquizu onecetaco barri, ta bazaut aserratuten bagara, escatuco deuscula pagu andiren bat bazcari char onegaiti; ta neurdin ezdeutsagu ura quenduco ardauari, ta ez dot uste beste zaraguijetaco ardaua egongo dala purubagua. ¿Cer daantzut?.... Canteetan.... Gagozan isillic cer dinuan..... Peru, artu dozu goguan coplachuba?

P. Bai.

M. J. ¿Celan da?

P. Ona.

Aita semiac edanda dagoz
Ama alabac jocuan;
Ostera bere egongo dira
Soñoco zaarrac cacuan.

M. J. ¿Nor ete da cantoria?

P. Nic ezdaquit; itanduco deutsagu nescatilliari, ta esango deuscu.

M. J. Praisca, ¿nor da alango cantore ederra?

Praisca. Aita seme batzuc juan dira sabaira, aita catu andijaz ta semia bere bai cerbaitacuan. Ló eguiteco asmoz igon dabee, baña emon deutsa ,aguriac cantiari. Soñulari eder bat dozu ardaoz basa basa eguinda bere.

M. J. Peru, esaidazu arren ostera versua, ta

ateraco ditut papera ta tinteruba beti aldian darabildazan leguez, escribiduco dot aztu eztaquidan.

P. Enzuizu bada ondo. *Repite el verso expuesto, y lo escribe el Maisu Juan y dice*

M. J. Verso asco iracurri ditut neure aldijan erdaldunen liburubetan; baña ez verba guichitan gauza gueijago esan gura dabenic. Ai ostera cantauco baleu! Ai! asi da.... Gagozan issillic. Peru artu goguan.... Cantau ditu verso bi: ¿cer dino?

P. Ona cer dinuan.

Egun baten gaba eguinda
Ninoian neure echera
Larrapastadatzar bat eguinda
Jó neban beeco videra.
Jaso nenduben danau mancauta
Bizcar azurra ausiric,
Miñaren miñaz catu guztia
Beinguan niri igaroric.

M. J. ¿Cetan parau ete zan Piestia? ¿Noc osatu eban? Verso oneec guejagüen esque dagoz. Banua eurac escribietara. *(Los escribe; y entre tanto oye que prosigue en cantar el borracho.)* Contu goguan artutiaz. ¿Cer esan dau?

P. Ona cer dinuan.

Ecarri eusten egun-sentijan
Maisu Juan Barberuba,

Gurago neban neure albuan
Euqui Gaisquin Diabruba.

M. J. ¿Ce diabru? ¿Nungua da agure ordi cantore au?

P. Nic eztaquit, baña bai zeu aitatuten zaitubana, ta Diabruba baño gaisto gogorragotzat zaucazana. Zeure erricua da, ta zeure egoquiren bat. Aurra, artu eguizu lumia, ta daucazun ur baltz orregaz eratsi eiguzu zapi zuri orretan esan daben laucua besteen onduan. Onac ta chaarrac, atsacabia ta atseguiña emoten dabeenac artu biar dira aserre baga. Echatzu issilduco jazo jacon guztia bere soñuban esan baga. Ara,... badarraijo. Dino bada.

Borreru arec birau nenduban
Albo bateti bestera,
Egon biar dau onec, cinuan,
Beguira gaur bazterrera.
Asi zan guero erremientac
Bere ciscuti ateraten,
Otso bijotzaz barre eguinda
An egozanai esaten.
Cangrenatzar bat jajoco jacó
Ondo ezpadogu sageetan;
Ezdira ez onlango heridac
Bedarchubacaz osetan.
Jaurtigui neutsan osticadiaz

Ezarri neban lurrera
Sartu eztedin Maisu Juane
Nire echian ostera.

M. J. Badaquit orain nor dan agure cantore au. Da ordi pusiga eche guztija ondatu dabena; zoorrez beteric dago: tabernaric taberna dabill. Nosian bein darue banatuta, catubagaz duala, golpiac artuta. Alperric illgo da nigaiti: ez nauca ostera atrapauric. Nic ez daquit celan osatu zan cantau daben trancian: araguijac senduac ditu. Juan banaquijo daguan lecura, iracatsico deutsat celan verba eguin; eztaucat aaztuta egui-custana.

P. Obeco dozu jan, ta baquian ichi alango ordi galtzalla bati; ezpabere, orain adoreric beso ta oñetan euqui ez arren, orrelanguac, edo bere semiac emon leiquezu maquillaca galanta, ta buruba ausita ichi. Ara oraindino soñubetan, ta eztira alperric igarotecuac bere laucuac.

Maisu borreru juan zanian
Ecarri eusteen berbati
Andrachu on ta erruquior bat
Auzoco erri bateti.
Azur ta zauri guzti guztiac
Cituban contuz icusi;
Arpegui sona baquetsubagaz
Esan eustan onlan neuri.

Chomin gaisua, ordu onian
Bota dozu Barberuba,
Icusi gura ezpacenduban
Lurrian bertan impreinuba.
Pasmo bedarrac biarco dira
Eragozteco pasmua,
Orma bedarrac gozatuteco
Banatu jatzun albua.
Egun guichijan zara icusico
Indar galantac arturic,
Eta zure azur banatubetan
Incaren apur bagaric.
Esan ta eguin, aste barruban
Urten neban neuc echeti
Guerri cerdenaz maquilla baga
Jan gosiagaz besteti.

P. Maisuba, ¿bantzuzuz dinuazanac?

M. J. Bai, Peru, ta nago icaratuta, celan guizon ordi batec atera leiquezan alango bersuac, ta cantau ain claru. Nic uste neban, eztarri gustia euqui biar ebala catigatuta, ta berso gauzaric ecin gomutau lichaquiola.

P. Alan dirudi, baña ezda alan jazoten: icusi ditut nic beguijac lausotu, oñac locatu, guerrija macurtu, ezpanac bisustu, chapela oquertu, ta verbia moteldu ta zutinic egon ecin dirian guizon catutu ta ardaoz satstubac, eztarri garbi ta laztasun baguiaz soñuba joteco. Celan dan ez daquit, bai ba-

ña alan dala. Iñosco azcorren dagoz orrelaraco, ta itanduten badeutsezu Aita guria, uts eguingo deutsube amar bider. Asco da soñuric, amaitu daigun picharondoco ardaua, ta Jangoicuari esquerrac emonda, guazan oera; ni logura naz; ez dot ez eunezco, ez miesazco izararic biar, ez artulezco burcoric. Marragueruben izara latzen artian atserengo dot goisartian. Eznabee iratzartuco ez ardi, ez imichen ciricac.

M. J. Gurago dot nic orrelango oera etzun baño sutonduan egon eguna arguitu artian.

P. Agur bada, Maisuba, gois artian; gau on bat igaro eguizu, ta dei eguiquedazu, ez ollarraren goisseco soñuban, ta bai eguna cerbait arguituta. Egun on bat alcarregaz igaro badogu, obiaguac igaroco dituzu. Eruango zaitut egun batzubetaco neure echera. An ta videtan eracutsico deutsudaz gauza asco, ta esango dozu nos edo nos Baserritar batec iracatsi deutsuzala, erri barrubetacuac iracatsi ez eutsubezanac.

M. J. Esquerric asco, Peru; zuaz, ló eguizu orain, ta neure contura goisian zuri dei eguitia. Agur. Igaro eguizu guizaajo orrec zuc bere gau on bat.

## DIÁLOGO SEGUNDO

ENTRE LOS MISMOS MAISU JUAN Y PERU.

---

Interlocutores la ventera y su criada.

M. J. Asco da loric; arguituda eguna; anchina jó eban ollaarrac goiseco soñuba. Jagui zaite; almorzau daigun cerbait; ostatuba pagau, ta guazan emendi, nora etorrico ez nasan ostera buruba galduten ezpajat. ¡Ce aparija baarcua! ¡Celango gauba! ¡Celango desbergüenzac enzun biarra guizon onrau batec!

P. Banua jaaztera; baña icharan biar deustazu pusca baten goiseco erregu onac Jangoicuari eguin arteraño. Nic, egunoro gosaritu, bascaldu, ta apalduten dodan baisen ciur, eguin daruadaz goiseco escaarijac, ta bardin gabaz oera baño leenago neure emazte, ta umiac lagunduten deusteela. Maisu Juan, neure adisquidia; aserratuco ezpacinchataz, esango neusquezu, ez deutsudala icusi cristinauba zarianen usain ta igargarriric. Ozta ozta, indarrez,

gogo otzaz, ecin bestez ondo irichiz, ta nagui naguiciniala, erdi lagundu ceunstan maico erregubac eguiten: eta autortu ceunstan, neu lotsatuteco bestian, ez bacarric etzendubala maico jaana bedeincatuten, ta jan ostian Jangoicuari esquerrac emoten, baita bere etzenquijala celan eguin. ¿Eta dinozu guero iracurlari ederra zariala? ¿Celango liburubac iracurri daruazuz? Gomutau zaite, on guztija Jangoicua gandic jatorcula. Ez nas ni escolauba; baña badaquit, nic erein arren galgarauba soluan, ezarri arren simaurra ugari, jorratu, ta zalguia escuz atera arren, ez jatala gariric elduco, neu ló naguan artian eurijacaz gozatu, ta lur barruban celan ez daquidala erne erazo ta azten ezpadau. Beraz zor deutsaguz esquerrac Jangoicuari gure vicitziari iraun eraguiteco emoten deusculaco cer jan. ¿Eta derichazu gaisuac osatu gura badituzu, ez deutsazula escatu biar Jangoicuari lagundu daguizula?

M. J. Peru, sermoe ederra predicadore batentzat bere. ¿Nos enzunda ardantegui baten onelango conversacinoric? ¿Cer esango leuquee ventera, ta bere servitzarijac balenzube niri diraustazuna? Heregeren bat nasala.

P. Dana dala; baña adisquide asco gura jacon bati esan biar jaco nun nai, ta nos nai ondo jagocana. Bacarrian dirautsut, eta ez neure buruba arrotu guraz. ¿Icusico bacendu nic gachen bat daucadala, neuc ez dazaudala, ta ezagututa, jaramo-

nic eguiten ez deutsadala, ichico ceunsquet ecer aitatu baga? Ez asco gura baceunst, edo benetan maite banindüzu. Aitu eguizu onembestegaz cer esan gura deutsudan. Banequi gach irichico ez deutsula, itanduco neusquezu juaten zarian Meza nagusira Jangoicuaren verbia enzuten, edo egoten zarian bizarguintzan biar ez dan orduban zeure, ta besteen animen caltian. Itanduco neusquezuz beste gauzachu batzuc; baña mimberatu ez ditecen zure belaarrijac, largaco deutsut onetan gueijago aitatu baga.

M. J. Peru, ondo eguingo dozu, badaquit cer eguin biar litsatian, eguiten ezpadot bere. Almorzau daigun orain.

P. Laster nas, ta artietan issio eguizu suba, eta berotu zaite.

M. J. Belutuco jacu orretan, ta dei eguitera nuaco Praiscari.

P. Ichi eguijezu baquian eurenez jaqui ditezen artian. Zuc zeuriari aurrera; sabelac emoten deutsu ardura gueijago arimaco gauzac baño. Obeto eguingo cenduban zeuc bere ló eguin bacendu, gaba alperric igarota, ardi ta imicha chachar batzuc gora bera. Aragui mimbera ta guperac vide daucazuz. ¡Celango mutilla zu arratoetzarrez beteric dagozan toqui edo gueleetan ló eguiteco! Orra nun danzudazan oin otsac; jaguida Praisca; esan eiozu imini daguijala urdai zati bat erreten burduntzijan, ta ar-

to edo ogui erregutadac coipatsutubaz, euquico dogu gosari ecin obia: miazcauco dituzu atzac gozuaren gozoz. Andiqui echeetan artu daruen edaari arró, ta bistsubac baño mamin gueijago iraatsico deutsu. ¿Cer eguin etc zan bartco soñulari ardaoz berotubaz? Ez da bere arnasaric bere ona elduten. Sabaico lasto ganian etzunda egongo da oraindiño.

M. J. Arren jaguico ez alda datzan toquiti.

P. Ez arren biraoric iñori egotzi, Maisu Juan: errucarrija da, ta ez biraogarrija guizon adina galduten dabena. ¿Noc jaramon biar deutsee ordi baten esan eta soñubai? Erruqui gueijago emoten deust niri, gorroto baño, cerren dabillen bere osasun, eche, ta icen onaren caltian. Cristinaubac gara, ta ecin zucendu badituguoquer duazanac, edolan bere escatu daijogun Jangoicuari arguitu daguijala bere ichumendi ain ondagarrija. Orra or Praisca....

M. J. Nesca imini eguin coipatsuba; urdai zati bategaz; ondo etorrico jacoz lucainca adar bi.

Prais. Ez naz ni nesquia, nescatilla garbija baño; icasi eiquezu urrenguan obeto verba eguiten. Zuc zeure soñoco bichidunoc baño, nic gueijago estimetan dot buruco ule trenza guerriraño elduten jatana, ta zapi baga nun nai erabilli daiquedana. Botaco cenduquedaz plaguiaren echera, gauza ascori beguiratuco ezpaneutsee. Len bere esan neutsun au.

M. J. Ez zaite aserratu Praisca, ta imini eguizu coipatsuba.

Prais. Ez daucat guiltzic; echeco-andriac gorde daruaz.

M. J. ¿Cer? eta eguiten dozu egun bat bere compiantza apur bat ez deutsuben echian? Beragaiti ostu biar deutsazu aldozun jaaqui guztia, ta soldatia artuta juan zaquijoz echeti.

P. ¿Orrec dira cristinau baten aotic urtengo dabeen verbaac? ¿Ostuteco putzac emon? ¿Guraco cenduque, Maisu Juan, echeco zeure otseiñác eguin daguizun orrelangoric? ¿Ce ugazaba-andrac gorde ez daruaz guilzpian oquela, urdai, ta bestelango gauza asco? Oguija lotu edo catigatu biar ez jaquee otseiñai. Ugazaba-andria cicotz cequena bada onetan, calte gueijago izango dau. Biar eguiten dabenac, jan biar dau. Praisca, ez enzuteric emon onen esanai: izan zaite escu garbicua. Niri sinistu gura badeustazu, urten eguizu bai emendi. Ardao-echeetan sartuten dira agura baldresac, mutil gaisto lotsabagaac, ta ez dozu enzungo emen verba garbi ta zucenic, ta bai birao ta zantarquerijac. Ule trenza ori ain maite badozu, igues eguizu garbitasunaren lapurren arteti.

Prais. Ondo dinozu, guizon ona: emen barallia, diadarra, auzquia ta nasaitasuna baño besteric ez dago. Nic ez deutsat uric ezarten ardauari; baña bai atso arima bagaco chár onec; ta issillic bada-

ruat, lagunduten deutsat lapurretan. Edatera datosan guizonac esesten deusté neuc erruba baneuca leguez; ardaua macala daguala, neurri laburra emoten jaqueela, lapurrac gariala, ¿ta cer ez? Barriz issildu gura ditut aitatuten deustezan icen lotsagarri damu emoten deusteenac; beintzat urtia eguin daidanian artuco dot iguesa.

P. ¿Ce urte ta urte oste? urten eguizu aimbat lasterren onelango echeti, nun Jangoicuaren usainic eztaguan.

M. J. Zagoz issillic; emenche dator ventera, ta echeco andra principala, ta enzuten badeutsube conversacinua, galdubac gara. Pausu otsa da; orra or ichura ederreco prendia.

Fraisca. Gorra dago; diadar andi baga eztaanzu ecer, ta eguizu verba ardura baga.

M. J. Ondo dago bada. Peru, ¿cer derichu escatuco deuscula pagutzat?

P. Arpeguijan aguertu oi da ascotan nor celangua dan. Beguira eguijozu ondo buruti biatzetara atso oni. Baditu guichienez laroguei urte: becoqui guztia chimur chimur eguinda bere mamin ta guzti: begui bijac ezquelac, ta gorritubac, piztaz ta becarrez betiac; betseina catubaren guisacua: betuliac erdi zuri, ta erdi murritubac: betazpiac baltzitubac; ortzac anchina juanac, oi utsac aguiri ditubala; suurra azpiti auts gorriz betia, musquil baltza darijola; gañeti zubituba: lepua macurra, ta gita

artuba. Bacarric miña dauca chito ezco ta zolija, nescatilliac diñuanaz. Eztaucagu cer icharan abegui onic; gure lapicoco arbi, aza, ta oquela zantarra urre biurtuco jaco bere auan, ta diruba ezpadozu ugari, ez daquit celan ibillico garian. Alan bere urten daigun ezta-baideetati, ta itandu eguijozu, cembat escatuten daben gure apari, gosari, ardao ta oia gaiti.

M. J. Ondo: ¿baña ce icen dau? Nescatilla, esaizu.

PRAISCA. Maisu Jauna, Andra Madalena dericho.

M. J. Icen ederra; bere iceneco Santiaren devotia bada, ezta cequena izango. Probau daigun. Andra Magdalena, esan beigu, ¿ceimbat da gure contu guztia?

LA VIEJA. Ichaizu contubac atera daidazan..... Atera ditut, ta guizon honraubac zareen aldeti, ez da izango escudo bi baño gueijago; beste batzuc bacinee, gueijago pagau biarco ceunsqueet.

M. J. Andra Magdalena, ez gara bi baño gueijago; gau bacar bat igaro dogu; eztogu ez ollandaric, ez eperric jan, ezda pichar erdi bat baño edan. ¿Cer esan dau?..... ¿Escudo bi pagau biarco dogula?..... ¿Gorra dago?.... ¿Peru, issillic zagoz?.... ¿Barre eguiten dozu?..... Atera eguizuz contubac, ta nic paperian sumauco ditut.

P. Ondo dago. Lau onza aquetirenec, lau lauco. Zortzi arbi buruc, amabi zurico, edo iru lauco. Azatan coipe ta guzti, bost lauco.

Urdai apur apur, urtu zana, lau lauco.

Ogui baltzetan, zortzi lauco.

Pichar erdi ardao, amar lauco bits ta guzti, eucan ura sartu baga.

Nire oe anchinaco Eremutar, ta Padarrac gogor ta igüingarrijagoric euqui ez ebeena, sei lauco, ardi ta imicha bacocheco laumarai esquetan ezpadau.

Goiseco coipatsuba zortzi lauco; ez naz ni gueijagogaz gomutetan. Maisu Juan, jó eraguijezu batera lauco guztijai, ta esaijozu cer celan dan, ta beguiratu daijola arimiari.

M. J. ¡Ah zorua! ¿Oni arimia aitatu? Oin balegaz sepulturan jaraoc, ta bestiaz impreiñuban.

P. Zeuc daucazu erruba: etorri ezpaciña aimbeste soñoco bichidun ta apaindurijaz, ez eban aimbeste escatuco.

M. J. Peru, soñocuac eztabee ecer jan, ez edan.

P. ¿Cer da ansi, edo ardura? Zulango apaindubenzain dagoz onlanguac, ta arnasia bere zorco dozu.

M. J. Leenago impreiñuco guztijac eruango lejauquet atso sorguin au, nic, escatu dabena, pagau baño.

P. Eguizu eguingo dozuna, ta ezaidazu ceimbatera joten daben gabac, ta gois dontsubac.

M. J. Paperian batu ditut laucuac, ta igoten dabee berrogueta zortzi laucora, ta oneec eguiten dabee bost errial, ta bost lauco ta erdi. Impreiñuco

atsuac, sei errialera elduten eztaben contubari, igon eraguingo deutsala escudo biraño? Ez gaur, ni bici banaz. Magdalena, contubac atera ditugu ciatz, ta joten dau gure castubac bost errial, ta bost cuarto ta erdiraño; ona emen sei errial, ta iru lauco gueratuten dirianac, isten ditugu Fraiscarentzat burucorratzetaraco. Aguindu ta agur. Peru guazan.

LA VIEJA. Picaro bergantioc, ¿sei errialegaz paguba niri eguin? ¿Zuben contu arinetara ni etorri? Suba, ta embarazuba ¿nun dira? ¿Noc pagauco ditu nire echiaren errentac? Pagau eidazuz issil issillic neure escudo bijac; ezpabere jaquingo dot cer eguin. ¿Nos jan dozube echian alango lapicocoric? Urdaija, coipia, guecli ederra, ariquija, arbi ta azaac; ardaua inun ez obia, ta edan ala.

P. ¿Ez neutsun nic esan cer jazoco jacun? ¿Cer eguin orain?

M. J. ¿Cer eguin? Ichi eguidazu neuri escrupulubetan sartu baga, ta neuc emoten deutsut verbia urtengo dogula lauzuri bere pagau baga. Fraisca, ecatzu goiseco urdaijaren azala. Cetaco dodan laster jaquingo dozu. Baña ez: bota eguizu zeuc atso lapur onec igaro biar daben vidian; labanduta joco dau beia; mancauco da; etorrico dira nire biarrera, ta guero eguingo ditut contubac ederto.

PRAIS. Ez nic orrelangoric, eguizu zeuc gura badozu.

*Toma Maisu Juan la corteza ó pellejo de tocino; cae la vieja en tierra, se maltrata y exclama.*

La Vieja. Ai, ai! il! nas; atera dot besua, ebagui jat buruba; odola darijat arpeguiti beera. Praisca, Praisca, eldu zaquidaz; galduba nas betico. Nire dicha baguia! Guizon onac, jaso naguizu, ta ezarri oera. Dacardela barberuba.

M. J. Esta cer ecarri barberuric; neu nas barberuric asco. Zorijonian zuretzat urten ezdogunian echeti. Lenengo eguin biar dana da sangrija bat: guero curau buruco epaija, ta azquenian zucendu beso ateria.

La Ventera. Ai orrelanguac eguingo baceunstaz! Parcatuco neusquezuz guztiz escudo bijac, ta ipinico lichaquezu gaur bere bazcari ederra duaric.

P. Impreiñalen asmo, ta guizona. Maisu Juan, atso gaisuagaz eguingo cenduban orrelangua?

M. J. Zagoz issillic; atso sorguin lapur batec ez eban guichiago mereci. Fraisca, berotu eguizu laster ura, ecarri eguizu guero terreña bat; presta eguizuz venda ta sangrija chaplataac, ta contu issillic euquitiaz celan izan dan. Ama-ama gaisua; ecartzu beso caltebagaco ori; ezteutsut miñic emongo, lanceta barri ta zorrotza daucat: zure zaanac aguirijan dagoz.

La Vent.ª Ai, neure guizon ona! Eguizu laster sangrija eguingo dozuna, zerren nire buruba miñez ebaten daucat, ta besua ez guichijago.

M. J. Ecartzu bada beso ori; ez deutsut miñ andiric eguingo.

La Vent.ª Larregui daucat miñic. Alan bere zabilz contuz.

M. J. Larga niri; bada pulsubac ezteust icarararic eguiten. Ardura gueijago emoten deustee beso ateriac, ta buruco mallatu, tontor, ta epaijac.... Orra sangrija eguinda. Ecartzu orain, amandre, beste beso ori, icusi daigun ce caltiac eguin dirian..... Ai, ai! Galdu jatzu betico; azur ateria baño izan ezpalitz, neuc iminico neutsun bere toquijan. Ecin neurtuco dozu onezquero ardaoric, ez erabilli escu onegaz guiltzic. Azur ausija, ¿noc osatu? Jangoicuac bacarric. Iminico deutsugu coipe, ta malmazco emplastú bat, miñac guichitu daquizuzan.

Vent.ª ¡Ce atseguiña laroguei urte urrian dituban andracumiarentzat! Ez nequijan orain artian gacha cer zan; eztot neure oe aurrian barberuric icusi.

M. J. Ama-ama, ¿cer gura ceunquian? ¿Ill, gachic igaro baga?

Vent.ª Bai neure guizon ona; alan uste neban. Eguizu bada eguingo dozuna.

M. J. Atseguiñez; baña animo; ecin osatuco deutsut buru zaurituba miñ andi baga. Ibilli biar dabee jostorratzac, vinagriac, ta bai lancetiac bere.

Vent.ª ¡Ai nire galduba! Josi gura deustazuz ara-

guijac, erre guero vinagre ta gatzaz, ta epai barrijac eguin? Illgo nozu tormentuz beteric.

M. J. Proba zaite; quendu eguizu buruco zapi ori. Fraisca, urreratu eguizu cruselu ori; garbitu daijogun lenengo arpegui odolduba: ecartzu jostorratz bat bere arijaz.

Vent.ª Maisuba, icara jabiltaz azurrac, icerdi larri batec urteten deust gorputz guztiti; beguijac lausotuten asi jataz; ill biot.

M. J. Ez, amandre; aldi gaisto chaarren bat gueijen eguingo jatzu, ta obago zuretzat; cerren guichiago sentiduco dozun miña. Fraisca, ¿sartu dozu arija orraatzian?

Prais. Bai; eutsi.

M. J. Ama-ama, animo, escatu eguijozu paciencija Jaincuari, nic bere eguingo dot curutziaren señalia, ondo urtendaidan curacino gogor ta gach onec. Asten nas....

Vent.ª Oi, oi!... galdu nozu neure vicico... chut, chut..... Ichi eguidazu arren ill nadin orrelango borreruquerija baga.

M. J. Or compon bada. Eguin dot aleguiña, ta ez esan nire erruba izan dala. Nescatilla ona daucazu Fraiscagan: gu bagoaz, zu ta ni quitu. Agur amandre gaisua: guera zaitez Jangoicuaz...

*Salen de casa Maisu Juan y Peru.*

P. Maisu Juan; ez neban sinistuco munduban eguala guizon zu baisen gogorric. Beeco gaisquiñic

asmatzalleenac bere ez eben gueijago asmauco. Zeuc mancau dozu atso gaissua, ta isten dozu alaz beteric eriotza gogor baten atzamarretan. Calte oneec eguitia asco ezpalitz leguez, urteten dozu apari ta gosarija gaitic ecer emon baga. Nic beintzat bialduco deutsat eguin dodan zoorra; eztot iñoren gauzaric gura.

M. J. Peru; ezta illgo atsua, malpecau, ez. Lapurreta guichiago eguingo dau emendi aurrera.

P. Contu ederra. Oraindino damuco dozu eguin dozuna. Jaquiten badeutsu atsuac, osatuten bada, icusico dituzu elorrijocuac; ta dongago dana, ni bere sartuco nozu oquerren baten, erruric euqui baga. Badaqui Praiscac celan galdu dozun bere ugazaba andria.

M. J. Nescatilla issilla dirudi; ezteutsa ecer esango.

P. ¿Andreen issiltasunaz coipetuten zara? ¿Eztaquizu gu baño urcuago eguiten jacola bere ugazaba-andria, au celan alangua izan arren? Bere buruba garbitutia gaitic, ta iñoc erruric ezarri eztaguijon, esango deutsa dana. ¿Eta guero? ¿Etzara eceren bildur?

M. J. Badaquit cer esan gura deustazun: emongo dabela querellaren bat nire contra; etorrico jatazala escribau ta aguacilen batzuc, eguingo ditubela procesotzarrac, ta ezarrico costubac nire lepora, ta menturaz sartuco nabeela preso.

P. Bai, igarri deutsazu cetan daguan nire bildurra. Atsuari eguin deutsazun asmoric, ecin eguingo deutsezu alango guizonai.

M. J. Ah zorua! ¿Celan probau niri neuc bota eraguin nebala? Nescatilla servitzari baten testigancia ezta asco. Alango testiguba, ezta testigu legueco ta abonauba.

P. Zuc alan dinozu orain. Besteric ezpada bere, asco izango da zure lepora ezarteco luma biar eguiñen nequesarijac.

M. J. ¿Ce diabru? ¿Probanza oso baga niri ezarri escribau, ta justicijaco beste ministruen ibilli ta procesuac?

P. Ez barriz. Zeuc icusico dozu. Nundi edo andi ateraco ditube, ta nescatilliaren esanac, zure caltian izango dira. Besteti, atso gaissuac ondatuco ditu daucazan lauco apurrac; lapico ona ta olluaz eguiña biarco dau. Ecarrico dabe zure ordian beste osaguilleren bat.... Badaquizu gach luciac asco daruala. Eta baldin gomutetan bajaco nescatilliari esatia artu naguijela ni arguitasun gueijagoraco, ¿cer eguin? Eztot nic arimia galduco ez zugaiti, ez beste gaiti.

M. J. ¿Etorquizunac emoten deutsu orrembeste bildur? Guazan ceure echera, igaro daigun umore galanta; datorrena datorrela; neuc emongo deutseet arpegui justiciaco opiciale diru zaliai; asco jaquiñac badira, ni ez guichiago.

P. Zu laco bat beeratu dabce nos bait, ta zure janci bichidunoc ez ditube atzeratuco biarric ez eguiteco; zure lotsa, ta itzalac ez ditu beinguan icaratuco. Eguizu nai dozuna, ta guazan aurrera.

M. J. ¿Ce soñu da danzudana? ¿Peru, ez danzuzu zuc?

P. Bai, elessacuac eraguitera duaz nor baiti.

M. J. Campae otsa dozu barriz. Atsuari daruaque Abadia. Ilten bada juan zan nire querellia.

P. Zuc eztozu inos verba on bat esango; etzara zu cristinauba. ¿Eztaquizu ez jacola iñori gachic opa biar gueure calteguilla ta arerijua bada bere? Barriz zu zara atsuari gach eguin deutsazuna; zuc aurrera beti zeure saill gaistuari. Zeu ondo bazagoz, or compon bestiac. Jangoicuaren cigorrac jarraituco deutsu, guizonena austen badozu bere. Atsuaren odolac diadar eguingo dau.

M. J. Gura dabena eguin daguijala, ta ez eguidazu gueijago aitatu atso venteriaren conturic. Emendi aurrera, urten ezqucro tabernati, verba eguin biar dogu gauza obagüen ganian. Gauza batec icaratuten nau zugan, cein ederto eusquera verba eguiten dozun, escolaric euqui baga. Nic ecin dot iracurlante andija izanda bere. Bati baño gueijagori enzun deutsat, baserritarretan daguala eusquera garbija; gaztelan izan garianoc, ta uri barrubetacuac erdera ascogaz nastetan dogula eusqueria. Zuri enzuten deutsudazan icen, neuc eztaqui-

dazanac, iminico ditut paperian, eusquera ondo verba eguiteco. Gure errico curiari enzun deutsat buruba ausita bere ecin dabela sermoe bat eusquera ondo imini. Nic eracutsico deutsadaz zuri icasten deutsudazanac.

P. Maisu Juan, nic eztaquit beste eusqueraric neure guraso, ta auzocuei enzunda icasi deutseedana baño, ta eguizu onduen dèrichazuna. Ausiabar asco artu gura dozu buruban artutiaz, ta lumiaz iraastiaz eusquera icenac. Nic eruango zaitut lecu ascotara, ta enzungo dituzu zuc eztaquizuzan eusquera icen asco. Belarluce baten irrinza estuba danzut; ilten dago epaillia..... Urrian dago echia; guazan laster, ta icusico dogu zarian edo ez chaarriazterlari, edo leñ zeuc esan dozun leguez, anatomico ona. Nic eracutsico deutsudaz abere lau oñeco zantar onen zati andi ta chicar guztiac, ta icusico dogu daquizuzan euren icenac. Nic enzun dot charri (parcatu, au da bere icena) charri barruba dacusanac, dacusala guizonaren barruba. Berac zuc bata badaquizu, jaquingo bere dozu bestia.

M. J. Adisquidia, estuban iminten dozu nire jaquiturija: icusi ditut guizon illac edeguiten, baita bere bein banaan conteetan; ez baña charrijen anatomija. Nic esplicauco deutsut guizonarena. Itanduten dogu lenengo, ¿cer da anatomija? Eranzuten dogu, dala arte bat iracasten dabena disequetan corputzaren partiac, ezagututeco norenac dirian,

ta cembategaz componduten dan corputza. Anatomijac daucaz lau genero, *Osteologija*, edo azur ta cartilagüen ganian tratetan dabena; *Splanchnologija*, edo errajen ganian iracasten dabena: *Myologija*, ceñec eracusten daben, cer dirian musculubac, ceimbat, ta cetaraco. *Angeologija*; ta au da eracusteco cer dirian vasuac, ceimbat, ta ce usutaraco.

P. Barriqueta asco, gauza on guichi. Nic ezteutsut ecer aitu belarrijetara eldu bajataz bere verba zantar, buruban artu ecin neiquezanac. Eta ¿cetaco da anatomija ori?

M. J. Da emoteco Jangoicuari esquerrac icusiric fabrica ain ederra; ezagututeco campoco ta barruco gachac; eguiteco pronosticuac euren gañian, ta azquenic cureetaco.

P. Echatzu zuri inos burura etorri ez Jangoicoric, ez esquer emoteric corputz illaren azterquetan. Ezteutseezu igarrico barruco gachai; or oi zabiltzee zeuben jaquiturija ustiaz, gaisuac cer daben igarri ecinic; batari miña atera eraguin, ugarric, cetacaric, edo corticaric ete daucan; bestiari escuturra escatu, atz bigaz oratu, ta igarteco zanac iguituten ete dirian macal, bizcor, bardin, edo desbardin ¿ta zuben pronostico, edo etorquizunen barri emotiac celanguac oi dira? Batac illgo dala, bestiac ez dala: onec, gacha beriala ebaguico jacala; bestiac, luzatuco jacala. Zuc esango dozu odola atera biar jacola zanen arin ta vizcor ebiltia gaitic; zure lagunac

esango dau, ilgo dabela odola ateratiac, macal dabilcola escuturreco tintina. Orra zure anatomija icen andicuac dacazan mesediac. Emoten deutsezubez gaisuai edaari samin, mincoch, atsitu, ta errai guztiac irabildutecuac, gacha ezagutu baga abespeluan, urten daguijanac urten daguijala; illten bada, or compon; urteten badau osasunaz, zabiltzee bazterretan zabalduten, nic bai eguin dodala osaquetia urlija guizonegaz, iñor osatuten ezpalitz leguez odol aterate, ta edaari atsitu baga.

M. J. Peru, ezta zure bururaco gure jaquiturija. Anatomija ondo icasteco biar da buru andi ta irátzarrija. Enzun naguizu. Corputz humanua da mundu chicar bat edo *microscosmua*. Gorputz au da arbola bat leguez, ceñec daucazan troncua, ta adarrac. Troncuac daucaz iru cabidade ceintzuc dirian buruba, bularra, ta beeco sabela; ta adarrac dira besuac, ta beernaac. Orain ausico neusquezu buruba asico bañinchatzu bein banaan expliquetan certzuc dagozan buruco cabidade edo barruban: batzuc dira bere beriac; oneei derichee *pelicraneua*, ta *craneua*; bestiac comunac corputz guztiari, celan dirian *cuticulia*, *cutisa*, ta *guizentasuna*. Eztot asi baño eguin.

P. Asco ta larregui da; gordeizuz zeuben arteraco verba ezain orreec, ta eguizu eusquera.

M. J. Adisquidia; eusqueriaz ecin explicau leitez.

P. Lauoñecua bere arbola edo abe vici bat da,

zuc esan dozuna eguija bada. Daucaz buruba, bularra, ta sabel beecua: ta oneetan dagoz toqui, gauza asco barrubetan dauqueezanac. Oneec izango dira zure *cabidade* dontsubac. Lauoñeco batec buruban, ta corputz lecu ascotan daucaz azala, azalchubat, ta guicentasuna, ta mintzac; ta oneec dira neure ustez zure *cutisa*, *cuticulia*, ta *membranac*. Nire verbeetia lenengoti aitu ta ulertuten da; barriz zuria diabrubac berac bere aitnco eztau. Azala bera dago beste azalchu meiago baten barruban, ta azalchu mé azal lodijaguari eraatsita daguana, da mintz chito mé ta etenerraza. Buru azur biribilla da beste azur batzuben batzacuntzia, ceintzuc eguiten dabeen utsune, edo onci bat, ta garunteguija. Buru azur oni dago iraatsita bera eztalduteco minz mé mé bat. Maisuba, barriqueta luce, gogaitcarri baga ta verba errazacaz, adierazo deutsut eusqueraz cer daguan buruban: alan azaldauco neusquezuz beste gauza asco eusquera garbijan, beguijacaz icusi aldeitequezan zan, azur, edo mamin gauzeetan. Guazan laster icustera charri illa, ta nic esango deutsudaz icenac, anatomijaren icena inos enzun ezpadot bere, ezpada zure ao beroti.

M. J. Ecin esan cinait atseguin andijago emongo deustan gauzaric. Icaratuco ditut neure opicijocuac, esan daijuedanian topau dodala baserritar abarcadun bat, neuc baño anatomija gueijago daquijana........

*Llegan al lugar de la matanza del marrano.*

P. Badacutsu emen belarlucia illda, sutan igarota, edeguita. ¡O anatomico andi Maisu Juan! emen aguirico da verba arruai ichita, cein jaquituna zarian. Eracutsi, ta icentau eguidazuz gueure amaren sabeleti dacargun verbeetan lauoñeco zantar onen zati guztiac.

M. J. Peru, ecin nei, ta icentau eguidazuz zeuc.

P. Ona bada. Belarluciari aguirijan ta viciric daguanian icusten jacozan zati, edo gauzaac dira oneec.

Buruba,
Belaarrijac,
Beguijac,
Betuliac,
Betartia,
Musturrac,
Surzuluac,
Iduna,
Samia,
Zuurdaac,
Azal, edo narruba,
Lau oñac,
Allia,
Ciilla,
Aua,
Conzaluac,

Aguiñac, ta ortzac,
Matralla-aguiñac.
*Eta ao barruban;*
Oijac, sabaija, miña
*Buru barruban;*
Azur nausi zortzi azurregaz bat eguiñac,
azala, azalchu, edo
mintza, ta garunac
Eztarrija,
Corcamistia, ta oni dautsazanac,
Birijac,
Andaerraijac,
Biotza,
Estegorrija,

Urdalla,
Este-meiac,
Este lodijac,
Estartecua,
Lopia ó lopetua,
Guibela,
Odola,
Zaanac,
Biaztuna,
Baria,
Baresaria,
Gunzurrunac,
Ganza,
Sagubac,
Gantzazala,
Churinguia,
Solomuac,
Solomochubac,
Saiasquijac,
Papadia,
Bizcarra,
Arbijac, edo mollegia
Urdai guizena,
Urdaiunsaguija,
Azur asco, ta euren icenacaz,
Pusiguia, edo garnuoncija,

¿Naozu gueijago? Aztuten jatan corotza, aztuteco obia bada bere.

M. J. Ez neban sinistuco baserritar batec jaquin leijala aimbeste icen, ta eusqueria zala ain aberatsa bere verbeetan. Nic ecin artu neiz buruz icen guzti orreec illa betian bere. Iminico ditut paperian, eracusteco beste nire opicijocuai.

P. Ordu onian; ta esango deutsudaz bein banaan. Charrijac berac, ain ezaña izanic daucaz icen asco. Batzuc esaten deutsee, lauoñecua; bestiac *belarlucia*, beste batzuc *ganau zurdaduna*; lecu ascotan *ganadubaltza*; ez ain ondo, bada asco dira zurijac bere; badira *urdia* esaten deutseenac. Lau

oñecuac batzuc dira *ordotsat*, bestiac *aardijac*; edo arrac ta emiac. Gurasotzat artuten diriañai, edo aitatuteco, deituten jaquee *apua*, ta parcaciñua escatu baga, ecin emon deutsee nequezale prestubac onelango icenic. Inos erosi gura badozu lauoñeco echian aztecoric, beguiratu ondo belarri, ta bizcarrari. Belaarri luce, apal, ta macalac ditubana, ta bizcargora, edo jasua dabena, guicendu ta acico da tint. Maisuba, oná etorri garian ezquero, zabaldu biar da ciscuba, ta emon cerbait, epailla ta batu dirianac ardaua edan dajén. Pichar bete biarco dabee guichienez, ta cerbait gueijago guztioc edango badogu. Alan oida; ta zuc ain apainduba egon ezquero, eztozu prestubez dollór, cicotz, cequen, ta ciscu-estutzat ceure buruba aguertu biar.

M. J. Ondo dinozu, ta errazoia da neuc ecartia convita. Baña eurac bere prigidu daigubela guibela, edo erre cunzurrunac, ta solomo zati bat.

P. Ecin iñori aitatu guinaijo orrelangoric, eurac aurreratuten ezpadira; esango leuquee lotsabaga, ta dongaro acijac gariala; belutuco bere lichaquegu echeraco.

M. J. Orra lauoñeco bati emoten jacon pagubá urte betian erregaluban euquita.

P. Ondo dinozu, ta orain jatort gogora gaztetan icasi neban asco esan gura daben ipuin au.

Eldu zan corta batera azeri bat, ta topau ebao án belarluce, edo charri guizen ta mardua. Esa-

eutsan onec, ¿cer darabilc emen lapur cital orrec? Iri guztiac deubee gorroto. Eizaan dabiltzanac, eruaten ditubazalaco eurac ill gura jituben eperrac. Gurago juec ilaco bat, sei eper baño eguiten ditubazan caltiac gaiti. Echeetan ecin icusi abee, olluac atrapetan ditubazalaco. Chacurrac urrinetic igarten jeutseec, botaten duan atsaz, urrian abillela. Asco ostu, ta beti argal, beste lapurrac leguez. Ase ollaquiz, bildotsquiz, ta eperquiz, ta beti aragui chaarra eguiten duala. Illten baabe bere, ezabe cerlaco gura. ¿Ezdacusc barriz nire vicitza ona? jan ta ló, ta nos bait urten ibiltera. Jatort nescatillia zucubaz, arta garaubaz ta castañacaz. Sabelpian ta lepo ganian niri igorzten oi dabill, ta bere poza da, nic ondo jaatia, guizen eguitia; ta egun baten jan gura ezpadot, illunduten jaco biotza, ta dino negarrcz leguez; jangarzutu da gure lauoñecua, ta jabilt eregau ta palaguetan jan eraguiteco. Esaeutsan azerijac; ¡ah tontotzarra! Ló eguic; guicendu adi. Maite jitubec ire odoloste, lucainca, guibel, bare, solomo, ta duan guztia. Ire urdai gozatubac urte guztian egon biarco joc egozten, cunzurrun ta solomuac sutan erreten. Jatorranian epallia, ta iru edo lau guizonec oratuta, sartuten deubanian ganibeta samati erraijetaraño, irrinzaca aguanian oñi ecin eraguinda, esango doc. ¡O azeri zorionecua! eta ceinbat dontsubagua asan ni baño! Orra cetara jó dabeen nire jan, ló, ta vicitza onac.

# DIÁLOGO TERCERO

ENTRE LOS MISMOS MAISU JUAN Y PERU.

---

P. Eldu gara bada gabiltzan gabiltzan, ó adisquidia, neure echaguntžara ta jaquin eguizu derichola Landeta, landa eder baten dagualaco. Ezta guizon aldi daquigunian, eche onetara ezcondu mutil arrotz, edo beste echetacoric; belaunic belaun guizon echeco semeetati eldu da nigana; agaiti aldatu ezta niganaño neure icen ondocotzat eche onen icena; alan derist *Peru Landeta-co.* Belutu jacu vidian, baña oraindiño etzirian nire emazte, umc ta otseiñac oera juango. Eztauqué nire usteric gaur gabeco. Zurturic gueratuco dira nire umiac zu zacusezanian, etorri ez oi dalaco oná zu baisen guizon apainduric; iguesco dabee zoconductara cuijac leguez.

M. J. Peru, atia jó baño leenago esaidazu arren cer da cuija?

P. Zubec conejuba esaten deutsazuna, ta esaten jacó cuija, cui cuica, edo cucuisca leguez dabiltzalaco emen urten, an sartu, burubac orain aguertu ta guero ezcutetan.

M. J. Peru, chacur zaunquia da, ta andijarena. ¿Oratuten badeust?

P. Ez bildur izan; bacarric etorri banintz, ez eban zaunca aserre usaiñecoric eguingo, ta bai urten bidera pozcariaz alliari eraguin ta parlanzuban neugaz ibilteco; eguingo cituban pozezco incirijac. Etzaitu usiguico neugaz zacusazanian, igarrico deutsulaco zatozala baquez, ta ez ecer eruatera. Chacurrari dagoca zaunca eguitia, ta eche ur ta inguruban ibiltia. Ogui pusca bate gaiti; ¿celango onirichi ta asco-guria artuten ezteutsa bere ugazabari? Maquillaca banatu arren ugazabac, inciri illetazcuac eguingo ditu, ez baña jarqui ta aguinic eracutsi. *Tó, tó* bat esan orduco, enzuten dau, ta igarten dau ardi, aunz, idi edo beiren bat dabillela soluan, ta ateraten ditu arin onian. *Urtic bat* esaten bajaco, alde eguingo dau maijaren albotí goseric andijena badauca bere; alperric izango da gosesto salobria. Ipiñi gura zaitut gauza ascoren jaquituń echian sartu orduco. Daucat Jangoicuac emonda emazte otzan, baquetsu, euli bati bere gachic eguingo ez leusquiona. Azten ditu umiac lotsa onian, mancau baga, ondo esanaz, ta Jangoicuaren bildurra iracatsijaz. Zorionez umiac eurac bere esaneenac dira jatorriz leguez; eztaquije erremuscada, becoqui illun, ta mustur astinquetaric eguiten. Eztozu enzungo nire echian biraoric, ez baralla, ozpe, atralaca, ta isquibiduric; bai verba onac,

elessaco gauzaac, ta baque beticua. Daucadaz seme bi ta beste aimbeste alaba. Gari ta artuac daucadaz guiltz baga gambara zabalian; bada daucaguzan otseinac bere, aci ditugu gueure umiac baguenduz leguez, alcar maite dogula. Iñoren basori orri bat quenduten ez jacó, bai zaindu ondo gueuriac. Orregaitiño Jangoicuac emoten deuscu gaucia ugari; topin ona beti izaten da; ilten dogu lauoñeco guizena, idi lodi cecin ederra dabena. Euren demporetan izaten da jan al baño gucijago castaña ta sagar. Urte guztian, esateraco, daucagu eznia ta aurreratuten ditugu dirubac lagunduteco guero umiai, aututen dabeen vicieran. Dacustaz nic iru ta lau echaguntzaren jaube dirianac, zoorrez beteta, bururic jaso ecinda, gosia emoten deutseela euren ume ta oguitucuai. ¡O zorigaistoco ardanteguijac! Eta ¡ceimbat calte eguiten dozuben! Bizcairic gueijenac erriojara darua dabena ta eztabena.

M. J. Peru, zorionecua zu! Erregue bera ezta zu baño obeto vici. Guazan laster barrura; jó eizu atia.

P. Dran, dran.

Echec. ¿Nor da?

P. Umiac, zeuben aita, edeguidazu atia.

Echec. Bai bai pocic. ¡Jesus! ¿nor da au?

P. Umiac ez iguesic eguin; guizon ona ta adisquide barri bat da, ta ezteutsube gachic eguingo. Mun eguidazube escuban bestectan leguez, ta guero denda, ta iguitu zaitece apari ta oe garbi on bat

iminteco lagun oni. Maisu Juan, guazan escaratzera, oñac bustico jatzuzan, ta aldatu eguizuz. Eztozu emen ediroco oñetaco zorrotzic, bai abarca, edo zapata zapal edo motzac.

M. J. Peru, zu bere jausi zará nos edo nos zeure eusqueran. Zapatiaren icena erdaldunena da.

P. Nic eztaquit erdaldunen barriric, baña bai zapatiaren icena euscalerrijetacua dala. Zapatia esaten jacó oñetaco zoru sendodunari; *zapala* dalaco, edo *zapalduleco* cerbait, chito adjutuba. Zapua bere esaten deutsagu piztija atsitu zapalari. Ausse badaquit, ez ecer gucijago.

M. J. Issillic nago errazoe orreec enzunda. Ecin atrapau cinaiz ceure eusqueran. Ecarri eraguizuz bada zeure zapata batzuc, ceintzuc euquico dituzun gordeta jaiegunetan meza nagusira juateco.

P. Bai alan jazoten da aspaldico urteetan; nequezale guztiac bere badauquez euren zapatac zutoechubetan, ta calcerdijac cacuan eseguita. Sartu dira capela querizgarrijac, ta egal biribil ta luceddunac. Nic enzun neutsan aita asaba bati, anchina andiquijac bere ebiltzala abarcacaz, chapel batubaz, ceintzuc obago dirian buruba ta belarrijac beroluteco querizgarri zuc sombrellubaren icena emoten deutseezunac baño. Jaguico balira lurpetic anchinaco asabac, ez leuquee sinistuco vizcaitar, ta euren ondorenguac diriala gaurco jaun, andiqui ta andiquigurac. Mutillac beti erabillen buruba mutil-

duric, ta emendi etorqueen euren icena. Guizonac azten eben ulia lepoti beera ezarteco, ta aguertuco bacirian guizon artian. Nescatillac erabillezan uliac aguirijan euren garbitasunaren igargarritzat. Nesca zantar jausi, ta garbitasuna galdubac, zapijacaz estalduta burubac, lotsaturic, atzeratu ditezan bestiac dongaro eguitetic. Andra ezcondubac estaldu eruezan burubac, batzuc orain leguez, ta echanderac gira ascogaz. Aztu dira asco gaurco eguneraco anchinaco gure mutil, nescatilla, guizon, ta andreen jaanci irauncorrac. Nor nor dan ¿noc ezagutu? Len ozta ezagututen zan matsardaua. Sagasti asco cirian, ta errico ardao edo sagardauaz igaroten cirian vizcaitar ta beste euscaldunac. Diruba gueratuten zan bertan. Eztago icusi baño ceimbat tolara topetan dirian eche zaarretan, ecertaco eztirianac gaur. Maisu Juan, ¿cer derichu? ¿Cer diraustazu? ¿Nortzuc viciciriau obeto? ¿Aen lautasuna obia etzan, gure egunetaco bichitasunac baño? Galdu gaitube arrotz ta erdaldunac, ta chimino eguinic jarraitu gura deutsegu aen asmuei. Nire alabac jazten dira lau lau, astegunetan biar eguitiari dagocan leguez, ta jai egunari emoten jacola beria. Daucadazan alabac dira bicochac, edo batera jaijuac, ta etzara onegaz zurtuco zu, daquizulaco izan oi diriala nosbait irucochac bere. Seme bata escolauba da, liburu zalia; badaqui erdera, ta eusqueratuten deuscuz, gaba igaroteco, iracurri dituban ipuinac, baña ipuin

onac, garbi ta iñoren calte bagacuac. Egoten gachacoz auac zabalic enzuten, une chicarrac Peru ta Marijaren ipuin gatz bagaac enzun daruezan garraz. Lengo egun baten berac buruz icasita, esacuscun ipuin chito eder abade batec imini ebana verba neurtu ta soñutubaz.

M. J. Aguindu eguijozu arren, esan daigula apaldu baño leenago.

P. Chominchu, esaizu lengo eguneco ipuin abadiac atera, ta iracatsi eutsuna. Ez bildurtu; echecotzat euqui eguizu emen dacutsun guizon au.

Chom. Aita, asco da zuc aguindutia ta ona bera.

Sagu bi celai baten
Egozan gauzac esaten;
Bata zan basocua,
Bestia echecua.
Dirautsa ác oni;
Gurozu ñeugaz etorri?
Bai ordu onian
Adisquide usainian.
Baña emen campuetan
Zelai basuetan
Cer dogu guc jango?
Ez deustazu emongo
Ona dan gauzaric
. Ez coipe, ez eztiric.
Basoco sagubac

Daucaz palagubac
Echecuari esateco:
¿Ni baño nor obeto
Vici da lurrian?
Ez dot neure vician
Izan nic bildurric,
Ez ez catiguric.
Nago neure basuan
Atseren osuan;
Ez dot arerijoric,
Ez ta galdu loric.
Darraico echecua,
Basoco jatecua
Icusteco guriaz
Jan barri gosiaz.
Maija imini zan;
¿Cer icusi etzan?
Bazcari ugarija
Eder ta garbija.
Sagar eta urrac,
Mispilla ta inchaurrac,
Ocaran ta madari,
Ta sabel gaisuari
Emon al guztia.
¡O bazcari andija!
Dirautsa echecuac,
Jaaqui icustecuac;
Niretzat baña otzac,

Argalac eta motzac.
¡O neure anaija!
Zuri neure maija
Jatort emotia,
Ta esquertsu izatia.
Darua bada echera,
Eta emen emotera
Andiqui janarijac,
Aberats ta ugarijac.
Coipia eta eztija,
Gaztae ta urdaija;
Ase zaite emén,
Eztozu alan jan len.
Eztago basuan
Ez zuben cobauan
Onlango apariric.
Musturrac coipeturic,
Bizarrac miazquetan,
Eztarria garbietan,
Ause bai bazcaria!
Arto eta garija
Jan ala gambaretan;
Gabaz oramaijetan
Icusten cer daguan.
Ta gura bogu juan
Gueroago lotara,
Oc utsetara,
Eztago ez ichiric

Guretzat maratillaric,
Ate incirricatuba
Da vide adjutuba.
Oneec cituban esaten
Goi ta be erabilten
Echeco sagubac:
Ta orra nun catubac
Deutseen jarraituten,
Ta atzamarrac ezarten.
Echecuac igues eban,
Basocuac ecieban
Topau zurculuric;
Beebillen estuturic
Chillijoca gaisua
Guztija igarua:
Nequez da ezcutetan
Tresna zuluetan.
Dirautsa lagunari;
¿Cetaco nacartzu ni
Lecu oneetara?
Nua neure echera;
Egon zaite zu emen,
Bizarrac coipetuten.
Ez, dino echecuac
Gueitubaz erregubac,
Zagoz aldi baten
Oraindino, bai arren.
Daquit catuben barri,

Igues dodalace sarri;
Egon zaite jaten zu,
Ni izango nachatzu
Ateen jaolia,
Ta catu beguiralia.
Alan jardunacaz
Ta verba labanacaz,
Saguchu basocua
Barriro badua
Billetan jaaquija,
Eta zelatarija
Beragaz batera.
Baña juaque atera
Guiltzera andria;
An da esturia.
Lapico barruban
Basocua eguan
Guztia sarturic,
Sabela beteric.
Nai dau igues eguin,
Baña ecin dau ez arin;
Oñac coipaturic
Vidiac labanduric,
Da bildur ta icara
Juan ez dedin ara
Eche guiltzeria.
¡O ce icaria!
Dago ezcutuban

Lapico barruban;
Ezta azartuten,
Arnasa artuten.
Bere zorionez
Ez juaco ara ez.
Jatorco laguna
Sagu eche jauna;
Eta onec aserrez,
Cegaiti, dino, igues
Eztozu beinguan?
¿Cegaiti lapicuan
Zara gueratu zu?
¿Celan eztaquizu
Iguesa artuten,
Buruba gordeten?
Basotar gaissuac
Dino, ¡ce gozuac
Emengo jaaquijac
Eta edaarijac!
¡O adisquidia!
¡Ah bai ce gorija
Dan zure jana!
¡Ai baso laztana!
¡Ai campo maitia!
¡Cein zaran obia!
Estozu ez caturic,
Ez nesca guiltzeraric
Dator coipe billa;

Guichiarren ni illa
Iza-ez naz coipetan.
Ez ta basuetan
Onlango arriscuric.
Laguna, niri ez deiric
Gueijago iños eguin.
Ezta au ez ipuin
Guzurrez asmauba
Bai eguijaztuba.
*Biotza quezcaturic*
*Eta arriscuz beteric*
*Daguan atseguiña*
*Ezta cindo-piña.*

M. J. Chominchu, ez juat inos enzun ipuin ain ederric. ¿Celan baña imini dabee verso ain lucian? Ce plagac iracasten deutsee eusqueraz coplaac eguiten? Asto bat naz ni. Ordi sats eguiñac bere ateraten jitubec versuac, eta ecin najaic bat vicitziaren beian.

Eta ¿cer esan euban abadiac canta ori iracatsita?

Chom. Ez inos aztuteco. Goguan banerabillen, vicico nintzala ondo; bada vicitza onac ecarrela bijotzeco baquia, ta donguiac, atsacabia ta icaria. Basoco sagubac esan eutsan eguija echecuari; bijac ebiltzan lapurretan, iñoren gauciari imurchi eguiten. Lapurrac beti vici dira bildurrian: egun gozo bat ez darue: iñori ecer quendu deutsanac, dauca

barruban iraatsita aranza gogorra; lurrian ta ceruen aldeti da gorrotauba ostuten dabillena, ta beste edoccin calte eguiten dabena. Eztago baque irauncorric ezpadago Jangoicuaren bildurric; baña bildur, donga eguiteti atzeratuten gaitubana. Au esan euscun guri abade onac, ipuina iracatsi onduan. Lenenguan olguetan guinian asco saguchuben verbeeta ta jazoerac enzunda; ez guenquijan celara zucenduten zan ipuina; baña igarri eraguin euscunian cetaraco zan, ta cer atera biar guenduban, gueratu zan barria.

P. Maisu Juan; badaquit erdiz erdi artuten zaitubala ipuin onen esanguriac. ¿Gomutetan jatzu, cer eguin ceuntsan atso gaissuari? ¿Ceimbat calte eguin? ¿Celan zoorra aztuerazo? Nic esaten neutsun ondo etzala; etzeustan jaramonic eguin, ta uste cenduban nintzala ni guizon coldar, arima bildurti ta gatz bagaco bat. Gurago neuque gauza asco baño gueijago, artuco bacendu gogoz ipuin eder au.

M. J. Galdu deustazube aita semioc apaitaco gogo guztija. Eztot nic zubec leguezco misionistaric enzun. Aen diadar guztiac baño gueijago zaurituten dabee nire bijotza zuben verbeeta piestaz leguez esanac. Agur nire gaurco lua. Echera nuanian, garbitu biar dot neure arimia quezca guztietaric.

P. Nescatillac, inguira; imini eguizube maija. Badaquizu, Maisu Juan, celangua oi dan baserri

echeco janlecuba; chisilluban zamauba zabaldu, subaren ondoan egon, lapicua éraz, ta urrian euqui; ¿nun, Erregueen jauréguijetan bere, mai egoqui ta adjutubagoric? Uste baguian leguez artu ditugu. Jaquin izan baleu Marija nire emaztiac etorteco ciniala zu, ipinico eutsun apari galanta. Gaur igaroco gara celan alan. Urdai cielgati ta lucaincasolomuacaz eguingo dogu coipatsu; gura badozu ogui erregutacaz, gura badozu arto berozcuacaz. Zeure auqueran euquico dozu. Erreten dagoz castañac; egosten dago beiseguijaren ezne chito mamintsu ta coipatsuba: lapicuan dagoz urdai ta cecinaz eguinico azaac; erreten sagar mueta asco, berazac, gazaminac, urtebetiac, domenchac, curcubietac, gorrigarratzac, abapurubac. Burduncijan dacutsuz ollanda ta usacumiac. Eztogu echeti urten eceren billa; usuac azten ditugu emen, ez gueuc jaateco, ezpada eruateco artuemona daucagun andiqui edo abadeen echera, ta bai nor edo nor baletor gueurera uste uste baguian. Usacume ill barri ta aragui berodunac ez dabee samurtuteco gorde biar egunen bat edo beste, eper, ollagor ta ollaarirenac leguez; ill, lumatu, ta gardostu ezquero sutan luma apurretati garbituteco, eztauquee burduncijan sartutia baño, samur ta coipatsubac egoteco. Usteco dozu biar bada, eztogula euquico ardaoric. Badaucagu, ta cer jazuan, edo cer etorrijan beti euqui daruagu gordeeta, ez gueuc edaateco, baña

bai emoteco iñor badator. Jazoten da nos bait etortia andiquiren bat edo beste mendi albocuetara, basaurde, eper, edo ollagorren eizara, ta jaquinic nasala guizon prestu ta biotz onecua, datoz cerbait artutera lotsa ta atzeracuntza baga, ta eguiten deutseegu abegui, gera ta arrera chito ona; ta nos bait jazoten jaquee eguraldi euritsu, ta truju gogorrac artuta, etortia ona gaba igarotera, ta gueratuten dira zurturic, iminten jaqueelaco apari ez chaarra ta oe garbija, ta esan darue, ezebela euren echeetan obeto apalduco. Agaiti nacusenian errira juanda jai egunetan, alcarren leijan esesten ta equiten deustee bazcaritara eruateco, ta nauquee euracaz maijan. Eztau echeric galduten onelango prestutasunac.

M. J. Eguija dinozu, Peru; baldin bizcaico baserri eche guztiac balebitz ain zucen, celan zuria, ta nequezale guztiac balira zu baisen beguiratubac, urrezco vidiac icusico liraatez. Zure echeau Jangoicuaren gracijaz beteric dago. Nauca zurtuta zure seme alaben lotsa onac ta moduztasunac. Maite dituzu, ta maite zaitube.

P. Bai, Maisu Juan; emoten deutsadaz Jangoicuari esquerrac, iraatsi jaqueezalaco euren bijotzetan nire ta nire emaztiaren verba onac. Datorrenian ona Jangoicuaren deicoren bat, icusteco ta poztutecua da, celan, bata baño bestiac aurrerago diriala, daruaquen arto zatija edo catillucada sal-

dia, ta nos bait zelatau ditut, ta icusi artua emon, ta escuban mun eguiten escale gaissuari; baita bere erregututa ecarten sutondora, otza dan aldijetan berotu ditezan, ta liortu daijezan abarca bustijac. Cer gueijago esango deutsut? Alaba bijen artian gazteenac eztaucaz amazortzi urte baño gueijago, ta ez bacarric susmau, baita bere ciur jaquin deutsat, gordeten dabela sarri bere gosaarija, emoteco ezcutuban, bere burubari quenduta, Jangoicuaren deico lenen datorconari, esaten deutseela, ez iñori ecer adierazoteco. Baru baruric dago alangüetan egubardiraño, ta eztago orregaitiño atzerena biarric gogorrenetan. Bere amac dino, topau dabela belaunbico gabac ordubac emonda, burubari lua quenduta, bazterchu baten. Ezteuscu inos chil bat cranzun, ezdogu icusi aserratuta ez bere nausiaguaz, ez bere nebaacaz. Baña esan biar deutsut egun baten jazo jacona. Etorri zan ona, neu echian ez nenguala mutil lotsa gaistoco bat. Oles eguiebanian, urten eutsan atera esan deutsudan alaba onec. Bere ichura ederrac icusita beste baga, zoraerazo eutsan mutillari, ta zabaldu cituban besuac laztanen bat eguiteco; nescatilla onec atzeratu eban gorputza, baña bai prestau bere besua emoteco belarondoco ain sendo ta zolija, cein da icariaz, ta uste bagaco escu ezartiaz, jausi zan beera; ichi eutsan alia nescatilliac, cirautsala; juaadi lotsabaga ori etorri asan videetati. Asi zan biraoca, ta arao-

ca mutilla, ta igues eban mandatùric ichi baga. Etorri nintzanian echera esan eustan bere amac cer jazo zan: ta dei eguinda emon neutsazan esquerrac neure alaba onari aserratu zalaco, aserratu biar dabenian nescatilla batec. Onetan bardina da nire beste alabia; ez leijo, esateraco, arpeguira beguiratu guizon bati: mutilloc bere ez ditu inoc icusico nescatilla atzian, ez euracaz verba bacarric eguiten. Egunac dacaz echera. Esan daruaquet nic; mutillac, aurrerena da Jangoicuaren bildurra; baña zeuben munduco on izatiari beguiratuta bere, gorde biar zaree nescatilletaric. Catuba sagubaren zain leguez dagoz bat baño gueijago, nundi ta celan atrapau aldaijen mutillen bat. Verba zoro batzuc erasotia asco dabee, buruba aguertuteco esan ta banatubaz bazterretan, ezconduteco itunduta dagozala urlija mutillegaz. Eta enzun dira gauza gaistuaguac eurac ganic; ibilli eurac besteren bategaz gura dabeen guisaan, ta seindun gueratuten badira, esarri erruba erruric ezeucanari. Neure mutill onac; igues eguizu gaurco nescatilletati. Jangoicuac euquico dau zubentzat, berac aututen dabena. Etzaite inos ezcondu nescatilla nasai, baldan ta mutilzalegaz aberatsa bada bere. Zuben amac ta nic euquico dogu zuben arduria, ta vide zucenez, garbiz ta Jangoicuaren vorondatia dan leguez, ezconduten bazaree, zorionecuac zubec. Eztaucat eche bat baño. Bizcaico porubac emoten

deust escubidia aututeco zuben artian gura dodana neure oinordecotzat. Guztiac bardin diriala, autuco dot semeen artian lénen jaijua. Zubec buru dongacuac bacinee, autuco neuque alaba nagusija. Ezta ondo gurasuac lotuta euquitia euren escubac. Seme nagusijac balequi, ta balezau gura ta ez izango dala ondasunen jaube, eguin lei otuten jacona; echeco caltian dan ezcontzaren bat jaramon baga gurasuai, edo onei euren bai-etz noraezecua escatuta, negarrez largaten ditubala. Bildurric ezpalenque galduco dabeela echaguntzia, buruco miñ ta atsacabe asco emon leijue gurasuai; baña oneec dauqueenian escubide ta auqueria emoteco gura dabenari seme-alaben artian, ecarri eraguingo deutsee lotsia, ta gordeco dira dongaro vici izateti. Beti da ondo berez semeren batec eruatia echia, arrotz ta beste iceneco bat jaubetu baga. Baña guraso onac, bat ondo baño obeto ipintearren, eztau aztu biar guztien gurasua dala. Aituco dozu onembestegaz cer esan gura dodan.

M. J. Peru, ezta mundu guztijan topauco zuc beste cenzun ta argui daben nequezaleric. Apaldu daigun orain, ta apal ostian igaroco dogu demporia alegrija onian.

P. Ondo dinozu; baña icharan eguizu pusca baten, itaune bat edo beste eguin daguijedan artian. Mutillac, ¿bota deutseezu jaatecua idijai? ¿Oinazpijac garbitu jaqueez? ¿Beijac sartu dituzube langa arteco ciscubetan?

M. J. Esaidazu, Peru, ce ganadu daucazun echian.

P. Daucaguz buztar-idi bi, bata belleguija, bestia zurija. Lau beei; bi buztartutecuac premina danian, edo idijac biar asco eguinda aricatu dirianian, nais gaisotu; beste bijac umiac aazteco necatu baga. Daucaguz bigae bat, bigancha bi. Badaucaguz oneez ostian zortzi basa-bei, ta basa-idisco galant bat, ta isten dot esan baga daucaguzala cecin-idi bi; bata echeraco, ta bestia salduteco.

M. J. ¿Ceri esaten deutsazu chaala, ta ceri urrucia? Enzun ditut icen oneec, baña ezdaquit cer esan gura dabeen.

P. Chaala esaten jacó edoccin beicumeri, dala arra, dala emia; baña urrucia emiai, ta bardin ardi bildotsetan.

M. J. ¿Cer da bei antzituba?

P. Chala quenduten jacona.

M. J. Eztaucazu ganadu lanadunic?

P. Bai; daucaguz laroguei guiberri; iruroguei ardi, aari bi, ta zortzi aunz. Aztuten jatan aitatutia bizartsuba, edo bere icenian aquer bat. Ardijacaz ezta asco ateraten: ostuten deuscubez batzuc errilapurrac, ta ez guichi basa-lapurrac. Euri asco, ta otz andijac dirianian, ilten dira bein banaan. Auntzac dira gogorraguac, euri ta otzari obetó jarquiten jacozanac, simaurtijac, eznetsubac, ta atia idigui ezquero, laster topauco dabee cer jan. Baña

dira caltegarrijac, ondo zainduten ezpadira. Zutinduten dira landara gazteen orri samurra jaateco. Eztago eurentzat esi ondo eguiñic. Echian daucadazanac eztabe gueure irabacijetati urteten, ta jagoten ditugu aleguinez. Baagoz inguruban usa edo erri-basuac, baña aristijac batzuc, bestiac artaadijac, ta ecin leje oneetan calteric. Baso-lapur, edo azerijac eztira azartuten auntzetara, ardijetara leguez; baña bai bildots ta anchumeetara.

M. J. ¿Cer? Azerijac azartuten dira bildots ta anchumeetara?

P. Celan bere dirian; baita ardijetara bere badira azeri zar, aci ta bein ardi araguija sabelera dabeenac; ta icustecua da, damubaz bere, celan dendatuten dirian celatetaco, vidiac ebaguiteco, samapeti oratu ta itoteco. Zati bat janda, darue emparauba dandarras euren abija, edo leza zuluetara. Eta guztiz dira gaistuac umiac dauqueezan aldi edo egunetan. Ecin aturau leite euracaz. Ezpagueunca chacur urrineti igarten deutsana piztija asco jaquin, ta malmutz onen urebiltia, ta usaatuten ditubana billatu ta jarraitubaz, ecin euquico guenduque ez ardi ez olloric. Maisu Juan, asco da gaurco verbeeta jaquinguracoric. Apaldu daigun ondo, edo emoten jacuna, ta guero bero aldi bat artuta guazan oera, ta bijar jarraituco deutsagu artu dogun lanari. Eruango zaitut errotara, olara, basuetara, ta beste lecuchu batzubetara, ta eracutsi-

co deutsudaz zuc eztaquizuzan, ta jaquin guraco dituzun gauza asco.

M. J. Ondo derist, ta asco da gaurco conversacino contuzcoric.

P. Maisu Juan; esaidazu cer gura dozun; zeuc, emaztiac eta neuc bacarric apaldutia, edo echeco guztioc aldabatera? Gurian ezta lenengo, ta bigarren mairic; otseiñac bere gueugaz iminten ditugu mai baten, ta jaaten dabee gueuc jaten dogun guztija. Andi-eche, ta andiquiguracuenetan, otseinac jaten dabee bacarturic, ta ez ugazabac dabeen guztiti. Emen guztijoc bardintuten gara.

M. J. Damu asco emongo leusquet guztioc ez jaatia batera.

P. ¿Noc maija bedeincatuco dau?

M. J. Nic ez, ta zeuc gura dozunac.

P. Ondo; bada Chominchu, escolauba zara, badaquizu, ta eguizu zeuc.

Chom. Aitiaren, ta Semiaren, ta Espiritu Santubaren icenian.....

*Se hace la bendicion de la mesa.*

P. Marija, jarri zaite zu maijan sutondotic urrindu baga. Ortisse ateraco dozu saldia, ta ecarrico dozu guero banaan daguana. Maisuba, eztago emen salda garbi, gueli ta olluaz eguinic. Igaro biarco dozu gaur celan al dan.

M. J. Ezta ardura. Uste dozu neure echian bere beti artuten dodala salda garbija, ta jan gueeli

gacitu baguia? Cein guichi! Eta eguija esateco obia da lapico gacico salda urdai, ta cecin galantacaz eguina, gueeli argalcha ta chacharracaz eguiña baño.

P. Ondo dinozu, epalla ta araguiteguija cúren ganera artu daruenac, bein baño gucijagotan illdaruez gabaz, edo issillic basa-bei argal, edo idi necatubaren necatuz azurra ta azala baño eztauqueenac, errico zucenzalliac amar begui ezpadauquez, edo itzaltsu ta asco jaquiñac ezpadira. Erri-idijen orde sartu daruez mustur baltz, begui cetacadun, edo Asturijacuac, ceintzuben oquelia dan ispi lucecua ta zaalagua, ezpadira oneetan cortatu, luzaro egon ta guicenduten.

M. J. Peru, eztago zuc eztaquizun gauzaric. Dacuscun bada ce salda daucazun. ¡Cein eder ta gozua! ¿Cetaraco ete dira piper ta azapraez gorriturico saldaac onelangua euqui ezquero? Lotsatuten nozu onembeste aparigaz. ¿Noc esango leuqué Landetaco baserrijan imini jatala, uste uste baguian sartuta ollanda ta usacumezco erria; ta emen dacustan beste jaaqui? ¿Noc sinistu, ateraco ceusteezala iru ardao mueta; chacolina, clareta ta naparra? Emoidazu, Peru, chacolin trago bat.... Brindo zure ta familija guzti onen osasuneraco.

P. On daguizula, Maisu Juan. Esnintzate ondo acija izango, nic bere eranzungo ezpaneutsa zure eguitada prestubari. Neure lagun ona, zure osasu-

na gaiti: urte ascotan izan daigula alcarregaz gaur leguezco apari bat. Echatzu ateric ichico beintzat eche onetan.

M. J. Nire dichia, certan edo atan serbidu al bacenguidaz. Eche onetacoric gaisotuten bada, ez beste barberuric billatu. Ordu bi videc ez nau icaratuco gabaz ta edurretan balitz bere.

P. Jangoicuac daigula osasuna; baña iñor gaisotuten bada zu vici zariala, ez gara beste baten atzian ibillico. Bedeincatu dogun leguez maija jan aurrian, emon daijoguzan esquerrac Jangoicuari. Artuco dogu beroaldi bat guztioc, esango dogu errosarijua, ta juango gara bacocha bere guelara. Nic esnaatuco zaitut goisian adiuntzaz urteteco gauzaac icustera.

M. J. Milla esquer, Peru, ta agur gois artian: agur gente ona.

P. Agur bada, Maisu Juan.

---

## DIÁLOGO CUARTO

CONTINÚA PERU EN INSTRUIR Á MAISU JUAN.

---

P. Egun on, Maisu Juan. ¿Ondo ló eguin dozu?

M. J. ¿Nor da or?

P. Neu; jaguiteco orduba da.

M. J. ¿Ce ordu da bada?

P. Guesi baten zortzirac.

M. J. Ez nire gorputzeco erlojuban. Ló gozo gozuan nenguan, ta ló batec iraun deust etzun nintzaneti oná. Orainche bere ecin edegui ditut neure beguijac. ¿Celan urten oe onetati?

P. ¿Cer dauca oe orrec?

M. J. Eztauca erreguec ez bigunagoric, ez obagoric. Sartu nintzanian eguin neban luma artian toqui eder bat; eztot gira bat eguin gau guztian.

P. Amar orduco lua eguin dozu beraz, bada etzun cinian bart amarretarunz.

M. J. ¿Nundi daquizu emen ce ordu dan erlojuric ezpadago, enzuten bere ezpada elessacua?

P. Baserrijetan daucaguz igargarri asco egunez ta gabaz, ta zuzenago gabilz gu ordubetan, erri barrubetacoac baño.

M. J. Beraz jagui biar dot. ¡O ce nagui nasan! Bentaco imicha guztijac bere ez nenduben iratzartuco. ¡O ce beste gaba, atzocua ta gaurcoa! Ce eguraldi modu dago?

P. Chito ederra; eztago odeiric, bai eguzqui ederra; lei apur bat jausi da, baña ez esatecoric, ez calte eguin leiquianic.

M. J. ¿Nos jagui cinian bada zeu?

P. Goisabar, edo egun usaiñagaz batera; ta belu nerichon beste egunetacuen aldian. ¿Noc egon biar dau eguzquijaren pecuan leguez oetic urteco? Olluac carcarassaz astiaz batian, jaguiten nas beluben dala. Ollarraren azquenengo soñubaz inguiratuten dira nire mutillac, ta jaguiten dira gaberdirunz gueure bei, idi edo chaalai beguiratutera, guero oera biurtuco badira bere. Eztaquigu emen alperrerija cer dan; ez eguna gau eguiten, errijetan ascoc leguez. ¿Etzinian bart etzun nire pentzudaan, edo nic iratzartuco cendudazalaco uste osuan? ¿Ez guinian alan itundu?

M. J. Bai Peru; baña badaquizu ez dala bardin gabeco jaguiguria ta goissecua.

P. Daucagu gaur cer ibilli, ta cer icusi asco, ta alan inguira zaite.

M. J. Ecartzuz bada neure erropoc, ta parcatu satisfacinoia. Besua aterateco bere nagui nas.

P. Maisu Juan; gauza bat esan biar deutsut. Olara biar dogu, ta bazuaz ceure soñoco bichidun

ta ederracaz, urtengo dozu sartu cinialaco damubaz. Ango ormaac quedarratuta dagoz queiaren queiaz. Jarten bazara guizateguijan, ciquinduco dituzu pracaac, ta eztozu gauza garbiric ateraco. Obeco dozu jaztia neure soñoco batzucaz: iñoc etzazauz oncetan, ta Maisu Juan izango zara guero, baserricotzac bazauquez bere olaguizon ta beste zacusezanac.

M. J. Ondo dinozu, ta ezta zuri gomutauco ez jatzun gauza onic.

P. Aldatu biar dozu buruti biatzetara; lenengo alcandoria, bigarren jaqué zuri bat, ta gañetic guerrestuba. Praca odolestubac, abarca ta dagocazan calcerdi marragazcuac ta buruban chapela. Zure asabac baño gueijago etzara, ta alan aguertuco zara bazterretan emen zagozan egunetan.

M. J. Ecartzu bada alcandoria.

P. Bai, ta ara emen prest presta, eguin barrija, ta inoc lenago imini baguia.

P. Chut, chut; latza dago, guilli guilli eguiten deust. ¿Cezazcua da? ¿Perrestupezcoa, edo quirru samurrez eguinico euneti ateria? Zambrotuco deustaz neure aragui guztiac, edo beintzat bai egun ascotaraco gorritu ta suminduric ichi.

P. ¡Guizonaren milica, ta buperia! ¿Cer gura cenduque? ¿Miesa utsez eguiña? Eta ¿iru edo lau lisiba, edo bogadaan igarua? Aragui mimberac dituzu. ¡Ce guizon galanta asco nequezalec jazten

dituban muetacuac erabilteco mormosieta baga!

M. J. Ecartzuz bada jaqué zuri alcandoriaren gañecua, ta guero guerrestuba.

P. Eutsiz: beintzat oneec ezteutsube eratzico araguiric.

M. J. Ecartzuz abarca ta oneen mantaac; baña zeuc janci biarco deustasuz, cerren eztaquit nic celan iminten dirian.

P. Urten eguizu bada nos edo noz oc orretati; ecartzuz berna, ta oiñoc.... Zutindu zaite orain, ta eutsi chapela. ¡Cein ondo dirudizun! Guazan orain escaratzera; nire emaztiac prestauta euquico dau oraingo coipatsuba, ta egosita bei ceguijaren ezne ederra.

M. J. ¡Ai Peru! Labanduta joco dot escallerati beera. Abarcá oneec leun ta labanac dagoz, ta ¿cer izango da campora urten da arcoscuen gañian ibilli biar badot? Oiñazpijac eratzico jataz.

P. Ez leuque guizonac izan biar zu languac. Escallera mallectati jasteco oratu eguijozu alboco aga escu ordeco oni, ta larrapastada bat emon arren etzara jausico beeraño. Eta oraindino bildur bazara, oratu eguidazu neuri beste escu orregaz. Aurra, guazan. ¡Cein ederto zuazan! Egun bigarreneco esango dozu, oñetaco orreec obiaguac diriala zuben zapata asmo barricuac baño. Jatsi gara jausi baga. Erdu sutondora. Ona emen Marija guria gure zain maija iminita. Artu eguizu aulqui au, ta jarri zaite.

M. J. Eztaucat bada almorzutaco gogo andiric; bada bart larregui apaldu guenduban, ta erreguelduac jatorlaz.

P. ¿Cer dira erreguelduac? Aupatsac esan guraco dozu.

M. J. ¿Nic daquit bada celan derichen baserritarren artian?

P. Jan eguizu cer edo cer; bada gosetuco zara ibillijaz, uste dozun baño gueijago.

M. J. Jan daigun bada. ¿Nun dira zure seme, alaba, ta otseiñac?

P. Batzuc juan cirian solora, ta bestiac basora iraurquiñac batutera: laster etorrico dira gosarija artutera, guero biurtuteco euren biarretara eguberdiraño. Arratsian icusico dituzu, ta guazan orain urrengo olara, noraño daucagun ordu beteco vidia. Eutsi bada maquilla bat larrapastauta jausi etzaitian, ta baserri chacurren batec usigui etzaizan. Maquilliac bildurtuten ditu; bestelan badaquije atzeti bestela baitacuan oratuten, ta osatuteco, biarco cenduque bere ulia; bada esaeria da; *chacurrac eguiñico zaurija, osatuten dala chacurraren uliaz.*

M. J. Peru, ¿errepranac bere badaquizuz?

P. ¿Cer da erreprana?

M. J. Erreprana, erreprana; edo beste icen batez adagijua.

P. Len bestian gueratuten nas.

M. J. ¿Cer esango deutsut bada, ezpadaquit celan esan eusqueraz?

P. Esaizu bada edolan bere bat, ta nic esango deutsut celan derichon.

M. J. Orainche esan dozu bat, ta ona neuc anchina enzun nebana: *Errementarijaren echian, zotza burduntzi.* Eztaquit gueijago eusqueraz, erderaz batzuc bai.

P. Orri esaten jaco eusqueraz esaeria, edo esacuntzia: gogait eraguin artian aitatuco neusquezuz orrelango esaerac. Urten daigun echeti, ta gura badozu esango deutsudaz batzuc batzuc.

M. J. Guazan bada; baña vidia erraz igaroteco, asi zaite beriala esaten.

P. Ona bada, ta zeuc esango deustazu nos asco dan.

1 Azeri zaarrac allia luce, bere leguezcuac bestiac uste.

2 Marija bichiguiña, suba da oguiguiña.

M. J. ¿Cer dinozu? Esaizu ostera.

P. Marija bichiguiña, suba da oguiguiña.

M. J. Baantzut cer dinozun; baña ¿cer esan gura dau orrec?

P. Esan gura dau, oguija eztala ona bichi asco euqui arren, suba chaarra badauca. Au da, guizon edo andria bichiz edo soñoco apainduz azaleti aguertu arren, buru chaarrecua ta alperra bada, eztala guizon ta andra ona izango.

M. J. Eguija dinozu. Zuaz aurrera.

3 Jan sarrija, jan gartzu.

4 Gois jaguija, gois gosé; belu jaguija loz asé.

5 Zór zaarra, zór chaarra.

6 Zulo bacochari, laacua.

M. J. ¡Ce eguija ederrac! Aurrera Peru; nic baño buru obia dozu.

P. 7 Zaijetan ciogui, urunetan ero.

M. J. Eztot aituten eusquera ori: ez cer dan ciogui, ez cer ero.

P. Esan gura dau, zai apur bat galdu eztedin bildur ta icara; ta uruna ondatuba gaiti ardurarie ez.

M. J. Badaquit orain cetara doian esaera ori.

P. 8 Ezdacusan beguijac, gachic ez.

9 Aciac, beria quirtena, ta arichac bere ericua ospala.

10 Erroijaren arrautciac, usacumeric ez.

11 Auntzac ichi baleijo, aquerrac ichi leijo.

12 Suba daguan lecuti, queia.

13 Otsuac otsuari gachic ez, ta lapurrari lapurrac laztan.

14 Cruselu onduan, goruric ez.

15 Irarguico arrija, pozuba.

16 Ardao gozuac lau begui, ta oñic ez.

17 Astuaren arrancia, min baguia.

18 Ontzari ez beguiratu lumara.

19 Zu beti ero; otz ezdana bero.

20 Chacur gosiac, oguija ames.

21 Zoruen eztija, gozua guztija.

22 Marija guria gorubetan, biar ez dan ordubetan.

23 Errementarija senarra, Jaincuac obia diñaala.

24 Auzoco beijac, errua luce.

25 Otsein barrijac galbaiaz ura, zaarrari edarriaz bere lecuric emon ez gura.

26 Aceri zaarrari ulia juan, baña antza ez.

27 Churi biren eznia perza bete.

28 Ollo gosia beti soñulari.

29 Lecuban lecuban malua, gurian andijagua.

30 Gois-gorri, laster euri.

31 Arrats-gorri, goisian eguzqui.

32 Abadiaren lapicua, chiquina baña gozua.

33 Icatzquiñaren lapicotua, andija baña erua.

34 Arzañac aserratu, gaztaiac aguertu.

35 Jan edanaren gozua; contuemonaren gaistua.

36 Eche utsa, atralaca utsa.

37 Guztia gura izatia, guztia galdutia.

38 Igazco chacurra, aurtenguaren urcatzalle.

39 Aldats goriá, aldats beriá.

40 Ondarrua ta Motricu, idijac idija arquitu.

41 Lecuban lecuban ardijac, baltzen artian zurijac.

42 Dollorra, beti prestubez gogorra.

43 Eguzquija nora, zapijac ara.

44 Ce languintza zamarguin, bizarrac bizarra eraguin.

45 Amuarrañac begui bi, sei escalluc amabi.

46 Ara bertan ecer ez, azaac bai coiperic ez.

47 Otz larreguija, zarren illgarrija, ta gazteen zaargarrija.

48 Guzurra esan neban mendijan, neu baño leenago zan errijan.

49 Topinac galdariari, ipur balz.

50 Daucanac gabon, eztaucanari emon.

51 Urdaija, jan da garbaija.

52 Soldaduba, amaren seme galduba.

53 Eztaquit, emen urtia badaguit.

54 Gabeco biarra, eguneraco lotsaari.

55 Eguija, ascoren erregarrija.

56 Ibiltari gabian, logura goissian.

57 Etorquizuneco oliac, biarric ez.

58 Etorrico jatzu, adisquidia, gomburubaren erreseria

59 Baneuca, baceuncaque; zeuc baceunca oba ceunque.

60 Badaucazu zeugaz, jango dozu neugaz.

61 Bacocha bere zoruac vici.

62 Batalaco beste, auntzaren odoloste.

63 Catubac daruan sardiniari, oratu eguijoc.

64 Alaba bi, ta iru semé, adi on umé.

65 Usuac juan, sariac eda.

M. J. ¿Cer esan gura dau orrec?

P. Ez dala belubaren zain egon biar, gauzaren bat eguiteco. Eztala osasuna guztiz juan artian

egon biar, osaguilliari dei eguin baga. Adiuntzaz ta era onez, edo asierati gachari videra urten biar jacola: ezpabere berandu datozala osacarrijac.

M. J. Ori esaten deutseet nic beti gaisso-echeetan, ta eztago noc buruban sartu daijuen. Echat aztuco esaera eder ori. Asco da Peru esacuntzaric.

P. Ondo dinozu; eldu gara olara, ta euco dogu cer icusi, ta ceri verba eguin.

M. J. Jesus, ¿ce gente modu da au? Impreinuba dirudi. ¡Ce suba, ta gaarrac! ¡Ce erremienta, ta toqui tristiac! Guizonen ichuraric eztauquee emen dacustazanoc. Ezteuscube agur bat bere eguiten. Eztauquee arpeguijan balcitu bagaco gauzaric.

P. Maisu Juan; ¿cer uste cenduban emen ediro? ¿Guizon ederto apaindubac? Beguiratu eguijezu ondo buruti biatzetara: eztabe aguiri ez begui, ez betuleric baltzaren baltzaz: ederrac dirá maurubac oneen aldian. Capela igartu ta erdiquin bat buruban, zapi quedartu bat becoqui erdiraño icerdija artu, ta subaren berotasuna arinduteco. Obrera uts, idunian lotuba; ezta cer escatu jaqueric, ez calcerdi, ez abarca, ez ta pracaric bere. Oera etzuteco ta jaguiteco eztauquee nequeric cer artu.

M. J. Ori da bada: eta ¿nunguac dira guizon oneec?

P. Bizcaitar garbijac, odolian zuri ecer zor ezteutsubenac.

M. J. ¿Ceimbat opiciale dira, ta cer aloguer emoten jaquee?

P. Dira lau biarguiñ; *Ijelia*, *Urtzalla* bi, ta *Galzamallia*. Aloguera aimbestecua da; baña bai ondo irabacija. Ijeliac darua biarsari, edo aloguer gueijago, ta onec izan daruaz egunecuaz ostian, escupeco edo atseguin sarijac.

Burdiña asco eguin bada, ondo irabazten da; bestelan guichi. Galzamalle gaissuac darua nequeric gogor ta gogaitgarrijena, ta irabazteric laburrena.

M. J. ¿Celan ori cristau errijan?

P. ¿Eztozu enzun inos praile-echeetan jazoten dana? Praile gaztechu edo sartubarrijac darue nequeric gogorrena. Ezta oneentzat bigungarriric: sendo sendó, osoz osó daruez aguindu guztijac. Alan biar da, jaquin daguijen cetara juan dirian. Lenengo urtian bigunegui balerabillez, ta euren burubetan icusi baga pisu guztija, guerora esango leuquee guzurtaubac gueratu ciriala, ogui biguna eracutsi ta emonaz birzaiz eguinico balz ta jangacha. Alan bada galzamalliac bere, izanic sartu barrijac, icasten dabee neque andijen ta irabaci laburraren videz, cer icharaten deutseen, ta gueroco obiaguaren penzudaan egonaz, igaro erraza eguiten jaquee, daruen biar gogor ta necatsuba. Celan alan, dinue euren artian, igaroco ditut iru urte, icasico dot biar eguiten; guero sartuco naz urtzalla; eguin-

go nas guizon oguija irabazteco duin, ta alan gueroco nequiai emongo deutseet arpegui, irabazte obiaz, ta gogorraguac icusita nagualaco. Lur argaleco munteguijan aci dirian landara gaztiac, iragoten badira lur coipatsuco basora, ezta esatecua ceimbat irabaci daruen; ta cein marduac guero aci: ez ala lur gozatsuti badaruez lur agorrera.

M. J. ¿Cer esan gura dabee icen oneec *Ijelia, Urtzallia* ta *Gatzamallia?*

P. *Ijetiac* esan gura dau ijeztu, edo irunduten dabela burdiñia. ¿Icusi dituzu sarri gorulac, celan amulu edo quirru goruban biribilduba ijezten, edo iruten dabeen, moltsoti ari meia eguiteco? Bada Ola-ijeliac burdiña biribildu ta moltsotuta daguana, dacar miatubaz; ta esan guiñai iruten dabela. Beraz ondo ipinija dauca *Ijeliaren* icena. Esaten da barriz *Urtzallia,* cerren urtu eraguiten daben mia suteguijan. Icentetan da *Gatzamallia,* onec jaon, edo zaindu biar dabelaco lapicua, ta oni gatza ezarri edo emon. Au da beste iruren morroe edo otseiña leguez, aguinduten jacon guztija eguiteco, ta *Ijelia* guztien jaola, iracasla ta buruba.

M. J. Eta ¿ce biar eguin biar dau bacochac?

P. Urtzalliac bete biar dau suteguija miaz; ezarri biar dan icatza, ta eguin biar dan guztija, agoia aterateco prestau artian. Auspuac gueratu ta atala gorituten imini, ta ecin esan beste cereguin ditu suteguijan. Lagunduten deutsee agoia su azpiti ate-

raten ijela ta gatzamalliac, bacochac bere burdinaga edo palanquiaz. Ateraten dabee suteguiti aguirira, ez icerdi tanta, ta bero asco botabaga. Botaten dabee beera, ta chiriquiña edo burdin cato bat iraatsiric, darue gabipera. An ezarten deutsee atala oracarri ta quirtentzat. Gabija ibilli dedin emoten deutsa ura ijeliac uraguiaz. Asten da durundija, orma ta lur berari icara eraguiten deutsana. Darua agoia urtzalliac mallutzarpeti gabi-igunaren azpira. An asten da beste soñu, belarri atara ez eguiñac, zurtuten dituban̄a. Ijeliac bere uraguiaz darabill gabija miats edo sarri, celan gura daben; ta ondo dan ura gueitu edo guichitubaz, beguira dagoca urtzalliari, ta iracasten deutsa cer eguin, nos aurreratu, nos atzeratu, ta nos albotu burdin oratzar edo agoia. An dira su chipristin urrinera duazanac: an ascatu ta bota eraguitia gueratu jacozan lojac, cepa ta chatarrac. Alan igunpian ta mallupian apainduten dau agoia urtzalliac; gogortu ta chiquituten dau, ta erdibitu biar danian, iminten deutsa gatzamalliac achurra, ta gabi-mallubac emoten deutsan joaldi edo colpiaz erdibituten da; zati bata gueratuten da atal edo quirten eraatsijaz, cein daruen barriro suteguira; ta aric aurreraco biar edo lanac gueratuten dira ijeliarentzat, ceñi jagocan ijestea edo irutia burdiñia, ecarri artian burdin-barra izatera, emoten deutsala vitartian gatzamalliari uraguia, gabija erabilli daguijan, berac aguinduten

deutsan arintasun edo guelditasunaz. Amaitu dabenian urtzalla agoia zaindu dabenac, esan dogun biarguintzia, dua lotara gura dabenian; eta artuten dau bigarren urtzalliac beste agoe ta eguiquizunen arazo, ta arduria.

Gatzamalliac chiquindu, edo jó biar dau agoe guztietaraco mia malluca chicar bategaz, batian belaunico daguala, bestean alboquerara etzunda, celan otuten jacon. Oni jagocà mandatubac eguitia nora nai; ta icuscarrija da vide aguiri ta caleetati ciar igaroten bere obrera erdi gorritu, erdi balcitubaz zaraguichu bat escu, edo lepuan dabeela, ardaua olaguizonai eruateco. Ecanduta dagozan beguijac, ez dira orregaitino mimberatuten. Oneec bai bene benetan irabazten dabeela jan biar dabeen oguija euren becoquico, ta corputz guztico icerdijaz. ¿Cer dinozu, Maisu Juan?

M. J. ¿Cer esan neiquezu? Ni baño buru obiagua zan, ola ta biarguintza au asmau ebana. Eta ¿ce on jatorco bizcaijari ola oncetaric?

P. ¿Ori itanduco cenduque? ¿Cer eguingo neusquijue nic neure basuetaco abe vicijai, olaric ezpalego? ¿Badacutsuz aimbezte baso ain ederto jantzijac? Igaroco baciña Bizcai guztico beresi ta mendijetara, etzenduque esango aimbeste egur ebagui leitequiala. Guizon bacocheco, ¿ceimbat milla arich, arte, pago, castaña? Bada azcoriac inausten ditu, ta subac daruaz eurrez leguez. Dirianac, eche-su-

caldetan biar dirian apur batzubez ostian, burdiñatuten dira esateraco, ta sartuten dabee cidar, ta urre asco. ¿Ceimbat irabazten eztabee icatzguiñac? ¿Ceimbat itzañac icatzac olara eruaten, errenterijetatic mia ecarten, burdiñia bera eraasten? Eta ¿ceimbat ola-guizonac eurac? Eta ¿ceimbat emparetan jaquee ola-jaunai gauzaac zucen badabilz? Ezta Bizcaijan arraa bete lur alperric galduten; besteric ezpada, toquiric agorrenian billatuten da iraurquina, ta eguiten da simaur edo satsa lurraren ongarritzat. Coipe bagaco lapicuac eztau aragui mamintsu ta mardoric eguingo, ezda simaur bagaco lurrac bere gari ta arto ugariric.

M. J. ¿Nun ló eguiten dabee, ta nos olaguizon oneec? Dacustanaz gau ta-egun dabill olia.

P. Ijeliac badaucaz une luciac agoe aldi bacochian, ta emoten jaco astija ló aldijac eguiteço, ez zazpi ta zortzi ordu, baña bai ordu binaan leguez. Urtzalle batac agoia zainduten daben artian, guichi gora bera lau orduban, dua bestia lotara. Gatzamalle gaissuac, aurreratuta badauca bere mia jotia, aimbestian dabill; baña celan agoia aterateco unetan lagandu biar deutsan urtzalliari, jó biar badau mia, ta zaindu lapicua, lua arina jabilco. Erdu neugaz oneen oetoquija ta oia icustera. Eztozu icusico ez uarcaric, ez etzun-toqui jaso ta adardunic. Lurraren gañian lastamarraga bat estalqui zantarragaz, ta burco ez obia. ¿Cer derichu?

M. J. Dacustanaz, capuchino ta cartujo batec baño vicitza gogorragua dacusee oneec.

P. Bai eguijaz: alan bere ez daquit nic cer dan bacocha bere burubaren jaube izatia, ta catebagaco vicitzia. Ez litzatequez guizon oneec egongo illa betian sartuta praile-eche baten gauza asco gaiti, ta gogorragotzat euquico leuquec illa beteco vicitza ezcutucua, emen negu guztico ló chaarra ta biar gogorra baño. Gurago dan otsuac baso vicitzia, jaatecua nequez billatu biarra, eche-chacur catiaz lotubaren eregu ta ogui biguna baño.

M. J. Baña celan ló eguin leije emengo gabi-ots, auspuen illeta soñu, ta subaren argui zabaldute, ta nosian beingo illundutiaz? Ate quisquet baten otsac esnaatu narua ni, lé zorro gogorrenian banago bere.

P. Maisuba, ¿ez daquizu guizona guztira eguiten dala? ¿Ez dozu enzun errotarijari ez deutsala lua galerazoten errota-soñu jarraitubac, ta iratzartuten dala soñuba gueratuten bada? Gabijaren ots, ormaac icara iminten ditubanac, ez deutsa guilliric eguiten olaguizon lotan dagozanen belarrijai. Eta eurac iratzartuten dira ao chistubaz, soñuba joten dabenian biarrian daguanac.

M. J. Eta ¿ce jaten dabee?

P. Ieatzguiñac baño lapico obia. Beteten dabee sabela ogui beratu ta ondo coipetuz, otuten jaquenian, ta ezdozu zuc iños jan gauza gozuagoric.

Escu atz ta ezpanac bere miazcauco cenduquez gozuaren gozoz. Nun illten da oleetan baño sesinguei, edo idi guicendubagoric? Andiquijac eurac datoz nos bait olara beste cereguin baga, oneen lapicuan oguija beratu ta coipetuta jatera; eta esan darue euren echeetan sesin ta urdai ederracaz lapicua eguinarren, ecin dabeela ain gauza gozoric jan; ta neuregango dator au, suteguico icatz ondo erriaz gar baga iraquiten dabelaco emengo lapicuac gueldi gueldi gañecic eguin baga. Guizateguijan dauquee mai iminerraza. Saldia artuten dá catillubaz, araguija chiquindu ta aoratuten da atzamar Jangoicuac emonicuacaz; ura edaten da galletiaz, ta au da lau lau vici izatia ta asmo baga.

M. J. Eta Peru, jango cenduque orreecaz mai baten?

P. Bai, ta igüin baga: ez neuque cocadaric eguingo, ez errebesau guraric eracutsico oneen obrera baltz ta escu cetacatubac icusi arren; eta derichat euren janguriac gueituco leuquiala neuria.

M. J. Eta ¿eztabee ardaoric edaten?

P. Ez egunoro ta guichiago bere. Asteazquenian dauquee edanaldi bat ola-jaunaren lepora, ta nos edo nos zu ta ni orain leguez, etorrita cerbait emoten deutseenian euren icenian edateco.

M. J. Ori niri esatia, da, ichi biar dogula cerbait edan daijen.

P. Bai, gura ezpadogu esan daijen atzeti biotz

cimel, edo chimurtubac daucaguzala, ta dollorraren icenic eztau enzun gura guizon prestu batec.

M. J. ¿Ceimbat emongo deutsegu?

P. Guichienez amasei laucoco bana, edo errialbico bat bijoen artian, ta au emon ezquero, aguindu eguijezu gura dozun guztija.

M. J. Emon eguijezu bada bijoc gaiti, ta guero alcar aituco gara.

P. Ordu onian. *Ijelia*, eutsi au gure icenian sabel liortu orreec busti daizubezan.

IJEL. Esquerric asco; urte ascotan eguin daizubela beste onembeste. Aguindu guri gura dozuben guztija.

P. Nire lagun onec gura leuque agoia atera, apaindu ta iruten icusi. ¿Nos prest egongo da?

IJEL. Bere beriala; urreratu dedilla ciarzulora. Nua vidia edeguitera urten biar daben cepa-guejari.

M. J. Jesus, ¿au cer da? Emendi dua burdiña urtu guztia.

P. Ez Maisu Juan: au da miaren errauts ta loiquerija. Onelan garbituten da burdiñia. Au astunago dan leguez gueratuten da ora bat eguinda suteguijan, ta urten dau gañeztu jacon loiquerijac cein gueratuco dan cepatuta.

M. J. ¡Oneec dira icustecuac! Aimbeste urte Bizcaijan eguin ta ¿oneec icusi baga egongo nintzan?

P. Auspuac gueldditu ditube: orainche icusico dituzu bein banaan, nic len adierazo deutsudazan

gauza guztijac. Ez da bardin enzutia ta icustia. Begui ichi edegui bateco icustia gueijago da icasteco, verba luceen jarduna ta equiña baño.

M. J. Atseguin ta arreta andi bategaz jarraituco deutseet biar guintza miragarri oneei neure beguijacaz. ¡Ai guizon gaisso ta errucarrijac! Igues eguiten dot nic urrinera iraun ecinic agoetzar aren chipristina ta berotasuna. Ara celan dabiltzan burruca oratzarragaz zucendau ecinic, ta bere albo albuan.... Oneec dira otsac: lurra bere badabil colpe bacochian....... Peru, eguin eguiña: zuc esan ceunstana, ta icusi dodana. Badaruat cer esan. ¡O egun ederto igarua! Esaiozu orain ijeliari eracutsi daiguzala eche baltz onetaco toqui, erremienta ta icusquizun guztijac.

P. Ijelia; eracutsi eijozuz guizon oñi emengo zurculu, tresna, erremienta ta icusquizunac, ta esan eijozuz gueldiró ta banaan euren icen guztijac.

*El tirador maestra á Maisu Juan todos los instrumentos, máquinas, etc.*

M. J. Guizon ona, esaidazuz opicialen icenac, ta alan beste gauza guztijenac, bada gura ditut eruan paperian escribiduta.

IJEL. Ona bada gueutati asi ta beste guztijac.

| | |
|---|---|
| Olia. | Urtzalla bi. |
| *Biarguinac lau.* | Gatzamallia. |
| Ijelia. | — |

Auspuac.
Auspo-ardatza.
Escamelac.
Chimbua.
Ujaiquija, edo uaguia.
Cañuba edo aisevidia.
Toberia.
Suteguija.
Beelarrija.
Aisa-arrija.
Aga-arrija.
Ciarzulua.
Estolda-aldia.
Guzur-asquia.
Onda-asquia.
Tiquinoia edo erruedia
Auspo-pujoia.
Pujo-macurra.
Ardatz-nausija.
Tiquinoe nausija.
Zutoiac edo cepuac.
Cepo-amia.
Mazucarijac.
Gabija.
Gabiguna.
Boguia.
Aldabarrac.
Burcuac.
Jungudia.
Dendala.
Dendal-arrija.
Chimela.
Macubac.
Cateiac.
Guiltzac.
Curutziac.
Cepa-amia.
Cepotilluba.
Nardaquia.
Bergamalluba.
Bandijua.
Chacurzulua.
Cirijac.
Urculia.
Usteijac.
Arrogo echia.
Arragoia.
Achurra.
Epailia.
Durmiendia.
Bandijua.

—

*Biarguinen erremientac.*

Orricaac.
Chiriquiña.

Palanquia edo burdin-agaac.
Mallubac.
Porroia.
Caicuba.
Galbaia.
Zaraac.
Paria.

—

Burdingaija.
Icatza.
Idurija.
Mia.

—

*Jancija.*
Obreria.
Capelia.
Capela zapija.

—

Guizateguija.
Issilluba.

—

*Sucalde tresnaac.*
Topiña.
Topin-estalquija.
Catillubac.
Erretilluba.
Burdun zalija.
Bitsadera.
Galletia.

—

*Toquijac.*
Auspoteguija.
Icazguelaac.
Gabiteguija.
Miateguija.

—

Agoia.
Atala, edo agoequirtena.
Bertaaguia.
Belaiquija.
Burutia.
Chatarraac.
Tochuba.
Galdabatecuac.
Burdin-barria.

M. J. Noc asmau ete cituban aimbeste icen, ta tresna?

P. Biarrac, ta demporiac.

M. J. Emengua icusita dago, ta guazan, Peru, gura badozu zeure echera.

P. Ondo dinozu, bada eztago urrin egubardija; baña esquerrac emonaz, eguin daijegun agur gozo bana guizon onei.

M. J. Bai, esan eztaguijen dongaro acijac gariala. Aurra bada esan daijuegun aldabatera.... Agur guizonac, esquerric asco eguin deuscuzuben arrera ona gaiti, aguindu guri aldaigun edocein gauzatan.

Los oficiales. Zeubei esquerrac emon deuscuzun dirúba gaiti. Ondo ibilli, osteraco artian.

P. Asco da goiseraco cer iguinic: guazan echera ecertan gueratu baga, ta jan ostian urtengo dogu beste gauza batzuc icustera.

---

# DIÁLOGO QUINTO

ENTRE LOS MISMOS MAISU JUAN Y PERU.

---

P. Eldu gara echera, ta neure ustian izan dozu gois eder ta atseguintsu bat olaan icusi dituzun gauzaacaz. Jan daigun gogoz, ta eguberdi ostian ló apur bat eguinda, atara eguiña bazagoz, euqui eraguingo deutsut arrastegui, edo egubarte ez chaarragua. Emen da arratsaldian lino ezpatetia, ta icasico dituzu ez daquizuzan gauza asco biarguintza gogaitcarri onen gañian. Zu alcandora eder, samur edo bigun zalia zara: baña jaquinda euqui eguiquezu, ceimbat arazo ta arazquerijaz ecarten dan bedar bat euna eguiteraño. Nire alaba batac, bera da gazteena, daucaz eunteguijac; daqui eunguintzan, ta echeti urten baga, ecer erosi baga, aciereiteti dacargu alcandora ederrac eguitera. Ichi daigun baña arratsalderaco icusquizun au, ta erdu maira... Zuaz orain gorputzari atseren apur bat emotera, ta jaguico zara oeti derichunian.

M. J. Etzun naz oera sabela bazcari ederragaz ondo iminita: aguertu jatan lua; baña nic eztaquit cer otsac izan dirian, igues dau luac nire beguijetati, ta asmau ecinic cer dan, ernegau ta jagui nas.

P. ¡Ah chorua! Ezpatarijen otsac dituzu.

M. J. ¿Cer da lino ezpateta ori?

P. Nic esango deutsudaz gauzaac sustrai ta ondo ondoti. Ereiten dogu lina-acija lur ondo guijau ta azaro onecuan. Lurrac biar dau guiro ona, ez ibilli senian, ta abespeluban, ta nos nai erein. Lino mueta bi dagoz, batari dericho agorra, ta bestiari lina beria; á ugarijagua, au obiagua ta lasterragua. Eldu dedinian, atera biar da escuz, ez ebagui iguitaijaz: aterata eguiten dira escutaac, ta oneec lotu. Guero dator garrameetia. Garramauta, gabicotu biar da, ta gabico eguinac sartuten dira uretan, samurtu ditezen, ta bota daijen loitasuna. Ur guelditubau iminten badira gabicuac, ezta esatecua, cein atsituba gueratuten dan ura. Ondo samurtu dirianian, eruaten dira zelai batera, ta an zabaldu ta banaturic, liortu biar dabee. Liortu ta ostera gabicotuten dira. Gabico oneec daruez trimin trimin eguitera erruqui baga zur-mallu edo mazubaz. Beso senduac biar dira mallubaz banatuteco, ta vitartian andracume batec darabill gabicua biraac emoten. Arazo necagarri onen ondoren astotuten ditube astosapinian; emen samurtuten da tint bedar gogor au. Guero darue charranchetara ganac aterateco. Onelan arquituco dabee ezpatarijac gaur. Ezpata oñian edo onduan iminten dabee lino astozapinduba, ta esesten deutsee zurezpatiaz: trisca trisca eguinda, nosian bein escu ta belauna-

gaz samurtuten dabee igortzijac emonaz, ta guero isten ditube otzaran cucustuta.

M. J. ¿Cer gueijago eguiten deutsee?

P. Cucusturic dagozan lino guijaubac, daruez barriro charranchara, ta an erbatzac juacoz, ta gueratuten da bateti quirru garbija, besteti amuluba, ta amulu onec daucaz perreztupia ta gana. Oneec iruteco biar dira goruburuban apaindu, ta ardatzian batu arija eguinaz batera. Eztira onetan amaituten lan guztijac. Arijac biar dau matasatu ichorosquijan. Ichorosquiti atera ta daruez matasac austietara ur gori, ta egur-autsian. Sartuten ditube guero lisiba arratzian, ta emen garbituten dira asco. Lisibatuta sartuten ditube caco edo agueetan, ta iruntz edo euritan zuritu ditezan, zabalduten dira bedar ganian.

M. J. ¿Ez dira onembestegaz amaituten lanac?

P. Ez, Maisu Juan; ari zurituba, ta matasatuba sartuten dabee arilteguijan. Emen dira lan barrijac arija eteten jaqueenian, edo arija catigatu ta nastuten danian. Neque gogorren videz eguiten dira arillac eunteguira eruateco. ¿Ceimbat lor emoten ezteutsee andracumiac euren burubai? Baña ez dira buruauste ta lorric chicarrenac, eunla gaisuarentzat gueratuten dirianac, ta guztiz, ari eten erraza badaruaque. Gogait eguingo ezpacendu, icusi eraguingo neusquezuz eunla batec biar dituban tramanculu, tresna ta erremientac euna ejoteco.

M. J. ¿Gogait eguin nic, Peru? Ez, ez: icastia da irabaztia, ta jaquitun urtetia.

P. Dei eguingo deutsat neure alaba eunliari eracutsi, ta esan daizuzan euren icenac. *Popachu*, ator ona, eracutsi eijozan oni eure biarguintzaco tresnaac.

HIJA. Bai aita, atseguiñez. Biartoquijan daucadaz, ta erdu bijoc ara. Ona emen cunteguijac. Au da goisubilla; beragocuau, beesubilla. Aitatuco deutsudaz guztijac.

Au, garranguia.
Oneec, izunzac.
Bestioc, gambelaac.
Aec, erraiarijac.
A, urculia.
Beste á, anezquia.
Ause, anezca-zotza.
Beeco orreec, oinolac.
Oneechec, ipurtolac.
Emen dacusuzanac, oinugalac.

Onaco au, chirringuia.
Areec, mazurcac.
Beste aec, orracijac.
*Ona emen beste batzuc, ta dira:*
Iraztasquia, edo arilteguija.
Iraztramaac.
Buztarrijac.
Arillac.

P. ¿Noc esan lei, icusi baga, ceimbat neque ta arazo artu biar dirian aciereiteti alcandora bat janci artian? Amaitu daguijanian eunliac bere cereguin gogaitcarri ta necatsuba, sartuten da josla, edo jostuna lan barrijetan. Onec biar ditu artacijac, orra-

atza, arija, ta icuste argalecua bada, betaurreco ondo datorcozanac, ta alcandora dontsuba josita bere, barriro biar dau bogada edo lisabara, samurrago ta zuritubago gueratu dedin. Agaiti esaten da; *linuaren atsacabiac, amai gabiac.*

M. J. Ni baño buru obacua zan asmau citubana aimbeste erremienta. Guazan icustera celan ezpatatuten dituben.... Agur nescatillac; arratsalde ona euqui daizubela. Jangoicuac bedeinca zuben biar eguiteco gogua, ta besuetaco sendotasuna.

LAS ESP. Ez da guretzat biarguintza atseguingarrijagoric: alcarren leijan, miña verba eguiteco ascatuta daucagula, olgantzaan egotia, neque gogorra ez da: gogorragüetara eguinda gagoz, bacarrago ta guchiago jan da. Gura dogunian canteetan dogu gucure soñuban. Batec equiten deutsa zorcicuari, ta guero bestiac eranzutiari. ¿Gura dozu enzun? Ona bada.

**Ezpatarijen cantia lino guijetaco aldijetan.**

---

Cantadu daguiguzan
Linuaren penac
Ezpata oncen otsian
Izanic latzenac;
Alcar ondo artuta,
Soñuba neurturic,
Gorputzeco nequia
Isteco arinduric.

ESTRIVILLO.

---

Gara nescatillac,
Euscaldun ez illac,
Ez da iñor lurrian
Gure biar ezdanic;
Ez atso, ez agura
Acandora baric.

Achurlarija dua
Botaten lurrera
Lino aci elduba,
Eta estaldutera
Chorijac etorrita
Jan eztaguijezan,
Ta guero ecer baga,
Gueratu ez ditezan.

Elduten dan orduban
Bedar ain biarra,
Escubacaz oi dogu
Gueldichu atara,
Eguiteco escudac
An bertan soluan,
Largateco arduraz
Etzunic albuan.

Escutadac dituguz
Guero orraztuten

Ondo garramaduta;
Ta aric eruaten
Gabico eguitera,
Beratu ditezan
Pozu baten euquita
Egun batzubetan.

Ura iminten dabé
Dan dana loituric,
Bazter guztietara
Atsa zabalduric:
Baña icusten dira
Ugarassijuac,
Burubac ateraric
Emoten soñubac.

Atsa darijuela
Dagóz gabicuac
Pozuti aterata;
Eta gu lacuac
Escubetan artuta,
Igüin bagaric,
Ditube zelajetan
Isten zabalduric.

Liortuta daruez
Guero mazupera,
Erruquija aztuta
An banatutera;

Lan au eguin oi dabe
Eguzqui-galdatan;
Lina jailla gaissuac
Icerdi lamatan.

Ez da onembestegaz
Nequia-amaituten;
Bedar ain banatuba
Dabe astotuten.
Asto sapin batian
Isteco samurric,
Gogorra eguana,
Ondo bigunduric.

Charranchia derichon
Orraci ascatuban,
Icusten da ostera
Ondo catiguban;
Lino agorra bada
Jacoz ateraten
Ganac, eruateco
Guero-ezpatatuten.

Emen sartuten dira
Gure lan barrijac,
Soñubaz emoteco
Pena latzgarrijac
Astosapin, ta mazu
Azpijan juari

Eguiten gariala
Guztioc cantari.

Tris trasca dirautsagu
Erruqui bagaric,
Isten ez deutsagula
Guc azur osoric,
Ispi char ta erbatzac
Jacoz ateraten,
Eta largaten deuscu
Guroguna eguiten.

Onclan iru bat ordu
Egonic olguetan
Soñu, algara eta
Barre gozuetan,
Lino jaubia dator
Guri deitutera;
Erdube ori ichita,
Cerbait artutera.

Laster, ta atzera baga
Gara gu jaguiten;
Ez dogu ez erbatzic
Soñian ichiten:
Garbi garbi eguinic
Guaz mai batera,
An gogo galantagaz
Gauza asco jatera.

Guaz guero ostera
Gueure biarrera,
Ta lan au amaituta,
Barriro apaitara;
Largaten ditugula
Bertan cucusturic,
Eta charrancharaço
Edertó guijauric

Charrancharijac ditu
Charranchan iminten,
Cucutsac quendu eta
Erbatz baga isten,
Quirruba alde batian
Besteti amuluba,
Au ganduba eta
Perreztupetuba.

Gorulac guero dabee
Eguiten arija,
Matasaraco biar
Da ichorosquija;
Lisiba ta iruntzac
Dabee garbituten,
Eta ariltoquijan
Dira arilduten.

Tramanculuba dauca
Eunla andriac,

Emen artu daruaz
Arazo nequiac,
Eguiteco euna
Besteen biarrequin;
Corputz, escu ta oñacaz
Biar deutsa equin.

Joslaac artuten dabee
Eun ateria,
An da artacijacaz
Zucen ebatia.
Alcandoria dago
Guztija eguinic,
Ari eta orraatzaz
Lotu ta josiric.

Euscaldun nescatillac
Nequiac arturic,
Eztabe onetaco
Guizonen biarric;
Eurac dira erella,
Lino guijarijac
Eunla eta jostun
Ta gorularijac.

M. J. Eztaquit topauco dan inun andracume euscaldunac baño senduagoric.

P. Nic bere ezdaquit, Maisu Juan. Dira sona, dulabre ta ascotacuac. ¿Noc sinistu lei, guizonen

premiña baga artu daiqueezala linuac dacazan, ta enzun dituzun arazo ta lor guztijac? Soluetan dacuscuz achurretan, laijetan, saraquetan, jorraan ta edocein biar eguiten. Badaquije idijac buztartuten, itzaintzia eguiten, itaurreco dabiltzala nos nai. Lau nescatilla baserrijan acijac, zucenduco leuquee echaguntza andi bat, guizonen premiña baga ecertaraco.

M. J. Aitatu dituzun ezquero baserrico biarrac, aitatu ta eracutsi eguidazuz orreetaraco dauquezan tresna edo erremientac.

P. Bai atseguinez, ta eracutsiaz bertan esango deutsudaz euren icenac, ta dira:

Aria bere guija catiaz ta arescubaz.
Nabasaija bere idunaz.
Iruortza.
Nabarra.
Aassia.
Achurra.
Achurculuba.
Aztajorraija.
Galjorraija.
Laijac.
Escubaria.
Iguitaija.
Ota-achurra.
Corta-achurra.
Podaña.
Ascoria.
Aijotia.
Sardia edo simaur batzallia.
Naarra cantenchubacaz.
Burdija.

Ona barriz burdijaren zure Anatomija, ta nire azterquetia.

| | |
|---|---|
| Iduna. | Edia, edo locaarrijac. |
| Perticac. | Azconarra. |
| Echia. | Edergarrijac. |
| Cirijac. | Colzaac. |
| Aquerra. | Garachuba. |
| Ardatza. | Burtczpatia. |
| Laacuac, iru. | Arasac. |
| Ugalac. | Biurrac. |
| Burtpillac. | Aculuba. |
| Buztarrija. | Itzaina. |

M. J. Nequez irabazten dau achurlarijac bere oguija.

P. Ondo dinozu: baña guri zor deuscu mundu guztijac, irautia ill baga. Gure nequiacaz dator garija, dator artua, datoz baba, irar, indirar, garagar, olo ta jancai guztijac. Achurrac dacaz maastijac, ta oncen ardaua. Achurrac dacar linua, edo jaazteco duin duina. Nequezarijac guizenduten ditu idijac, oquela ona jaateco; ta enzun neutsan nic guizon jaquintsu bati, Jangoicuac eguieban lenengo guizonari, emon eutsala lurra landuteco aguinduba, onec pecatu eguieban baño leenago, lurra samur ta biarerraza bazan bere; ta pecatu eguiebanian gogortu, arantzatu ta lártu jacola lur berez bigun ta samurra zana; baña len ta guero izan zala Adan achurlarija ta baserricua. Guerora asmau ebeela guizonac erri batubac eguitia. Eztaquit nic noscuac dirian

bizarguin ta gaiso-osatzallac. Guizon jaquitunac guzurra esaezpeeban, achurlaritzia da artez artez Jangoicuac emonico lana, lenengo guizonagandi datorrena.

M. J. Ori orrelan izanic, ez da izango lurrian opicijo onraubagoric.

P. Eguija dinozu, bada ecin iñor izan ceitequian, ez izango da lenengo gurasua baño odol garbijacoric, ta bera izan zan achurlarija.

M. J. Eta, ¿asco necatu biar da eguin arteraño oguija?

P. Chito asco, ta alan jaana ta jancijac dacaz burucomin, arazo, lor ta atsacabe asco.

M. J. ¿Certzuc dira?

P. Ercin orduco garija oraingo euscaldunen lurrian, onec saratu biar dau; nabasaijaz igaro ta lajacaz ondiatuten da. Zoijac chicartu biar dira achurraz; ariac, nabasai iruortz ta nabarrac igaro biar dabee soluan galgarauba ondo gorde dedin, ta eruan ezdaguijen currilloe, belá ta beste chori garau zaliac. ¿Ceimbat simaur ezarri biar ez jaco? Eta simaurra eguiteco, ¿cembat buruauste? Batu biar dira basuan iraurquinac, orri igarrac ta ota-sostrac: eruan oneec echera; bota cortaan; eraguin nosian bein. Guero garija erne onduan, biar da jorratu, escu-etendu, zalguia ta bedar chár guztija aterateco. Neque ta lór andi oneec igarota, dator garija elduteco aldi ain biotztuba. Prestau oi dira

iguitaijac, itzinduten ezpadira burubac erri batzubetan leguez. Bero anditan ebaten dira ta eguin azauac; oneec lotu, ta muquirijuac eguin; oneec zabaldu, ta igartu ditezan. Arazo oneei darraico galjaite necagarrija icerdi bitzelan, alcarren leijan, ta soñuba neurtubaz gorputza mancauterano.

Azao juac, edo lastotu dana alderatu biar da escubariaz garija ganic. Au gueratuten da aotzez, ta galburu utsituz nastauba. Andracumiac artzaatu darue, isteco galgarauba cerbait garbituta, ta güenian garbi garbi eguiteco arcosco, lur apur, olo garau, auts ta loigarri guztietati, galbaatu biar da ardura andi bategaz. Gari garbitu ustecua, zorroturic, darue bolu edo errotara; ta ¿noc esan ceimbat cereguin daucan errotari gaissuac uruna eguin artian? Errotiac, ¿ceimbat tresna ta erremienta? Eijo onduan, bere laca edo mendia errotarijac artuta, darue urunzorrua echera. Neque barrijac oguiguiñentzat. Eralgui biar da bae zarratuban; alderaguin birzaijari; au garbitu biar da, zai utsa isterano. Eguin oi dira batzubetan iru ogui mueta: bata garbija; bestia tremesa, ta zantarrena ta chacurrentzat obia, birzaizcua. Ogui oneec eguiteco, ¿ceimbat lór? Chanchaduria aurrez eguinda ezarri biar jaco ogui oriari. ¿Ceimbat gorputzeco gorabera, ta escu eraguite oria eguiten? Oguijac ichuratu, ta jagui biar dau bere tercijuan, ta onetan utseguiten bada, larregui edo guichijeguijaz, ez dau ogui onac

urtengo. Darue labara, ta labazaina ezpada zuurra ta aituba, edo subac igaroco dau gania balcitu ta barruba erre baga, edo danac urtengo dau ezcotu ta errearinac.

M. J. Echataz niri inos burura etorri neque orreec. Jan dot oguija ecegaz gomutau baga.

P. Alan jazoten jaquee chito ascori, goguan artu baga nequezari gaissuen lan ta lorrac, ceintzuben icerdijaz daruen vicitza olgura ta gozo andicua.

M. J. ¿Badaucazu cer eracutsi gueijago eche barruban?

P. Bai: mutil gaztia nintzanian icasi neban arotzija, neure anaija nagusijaguac echaguntza au eruango ebalaco ustiaz. Ill jatan anaija á; ta gurasuac ichi nenduben euren oinordecotzat ta eche jaube. Nosian bein eguraldi chaarrac eragozten deustazanian baso ta solo biarrac, jardun daruat mai, aulqui ta ezgauza batzuc eguiten; ta daucadaz neure lanteguija ta biar dirian erremientac.

M. J. ¿Ce erremienta biar da arotzijaraco?

P. Enzuzuz: ascoria, azuelia, ceijua, laatrua, guimbaleta, escoplua, zurmalluba, biar-maija, barrenia, gubija, cipilluba, garlopia ta cerria.

M. J. Asco da gaurco eracusteric, baña bijar goissian eruan biar nozu basuac eracustera, ta arbolen icenac esatera.

P. Ondo dago ori; baña ¿alperric igaroco dogu

neguco gau lucia? Gure vicitziari ez jatorco alpertasunic. Autu eguizu bada ceren ganian verba eguingo dogun. Ezdeutsut nic debecau, ez galerazoco ondo dan gauzaric. Abagadune chito erazcua da illunceti ta apal orduraño sutondoco ingurnban verba eguitcco, iñori ecetan icutu baga. Nire echian ez da enzuten dongaroric lagunaren vicieriaren gañian. ¿Cec sartu biar gaitu iñoren gauzeetan? Bacochac jazten dau aldaben alcandoria, ta nic neuria. Iñoren beguijan badacuscu edocein samar; gueureetan abe andi bat bere ez.... Olesa ta ate jotia da: ¿nor ete dogu? Chomin, urteizu atera. Verbarua da, ta bat baño gueijago dira.

Chom. Aita, Juanis Prancesa da, ta lagun bat dacar beragaz nic eztazaudana; baña abarqueen ichuriari beguiratuta, uste dot dala zure ezagun quiputzen bat.

P. Datozala aurrera..... ¡O azpaldico neure Joanis! ¿Vici zara? Ondo etorrija izan zaitiala. ¿Nor dozu lagun ori?.... ¡O Chorgori! Emoidazu apa laztan bat. ¿Zu bere emendi? Erdu bata ta bestiori escaratzera. Emen daucat egun oneetan adisquide barri bat, ta dirianoc igaroco dogu gau ederra.

M. J. Peru, erdu ona mandatuchu bat esan daizudan issillic..... ¿Ce guizon modugaz tratetan dozu? ¿Celan echian artu prancés, ta quiputz bat? Noc daqui, daucazun guztija ostu, ta emen gau chaarren bat emongo ete deuscuben? Ez neban uste orren compijauba cinianic.

P. ¡Ah Maisu Juan! Burutacino, ta zaijo donga orreec quendu eguizuz. Bijoc dira neure ezagunac. Prancesa sarri egon oi da emen, ta da zu ta ni baño christinau obia.

M. J. Prancesa ta ¿christinau ona? Sartu eijozu ori zoro bati.

P. Eguingo neusquezu tema edocein gauza, Jangoicuaren gauzeetan zu ta ni baño jaquitunago dala.

M. J. ¿Ara ezdaquijala Aita gueuria bere?

P. ¿Ara zu baño gueijago dala? Enzungo baceuntsaz guc leguez celan Jangoicuac munduba bere gauza guztijacaz eguieban; ceimbat egunian; cetati lenengo guizona, eta alan beste gauza asco, esango cenduque, abade izateco beste badaquijala.

M. J. Peru, nic sinistuco badeutsut, neuc enzun biar deutsadaz. Baña beinic bein itandu biar deutsagu dotrina pusca bat, ta guazan orain euracaz ezcaratzera.

P. Ondo, baña ez arren verba minduco dabenic esan, ez batari ez bestiari. Iñor ezda lotsatu biar, ta guichiago mimberatuco nintzate, neuri esango baceunstaz amar verba astun ta garratz, oncei bat baño. Nic ezdaquit oneen eusqueria aituco dozun.

M. J. ¿Cer? Eusqueria izan, ta nic ¿aitu ez?

P. Guazan bada eurac gana, bada juan dira escaratzera.

M. J. Icharaizu pusca baten, ta esaidazu, ¿celara etorten da prançesa?

P. Luebaguiña ta otaepallia da. Urteten dau illunzeetan ibai onduelara, ta artu daruaz igarabijac chito erraz. Gueijago esango deutsut. Oneetan dirian azerijac, dacaz nai dituban toquira, ta burdin laquirijo bat iminiric, artuten ditu. Berreun baño gueijago artu ditu urte bete barru, ta batzuc emenche gueure ataijan.

M. J. Peru, ez neban uste guzurric esaten cenquijanic. Icusita sinistu; ta icusita bere usteco neuque beguitacinoren bat dala. Alacoric bada, encantubac daucaz ta pamerijalac, ta laster atrapauco dabe, inquisicinoera eruateco.

P. Ez dauca oneec orrelango artuemonic gaisquiñacaz.

M. J. Gurago neuque orrelango bat icusi, orain artian icusi eraguin deustazuzanac baño. Vide onez bada albidade ori, mereci leuque sari andi bat. Guazan bada beriala eurac gana......

*(Pasan á la cocina; y Maisu Juan saluda al basco francés y al guipuzcoano.)*

M. J. Agur adisquidiac; ondo etorrijac izan zaitiala. Alegretan nas euquitia zubec ezagututeco portuna au. Peruc esan deustanaz, bere adisquidiac zaré; beraz adisquide on bat daucagu zubec eta nic.

B. Y Q. Esquer andiac: ta ondo arquitua izan zaiteala emen. Eseri zaite, amildu gabe.

M. J. ¿Cer esan dozube? ¿Cer da eseri zaite amildu gabe?

P. Maisu Juan, laster catigatu zara oneen eusqueran. Oraindino enzungo dituzu gachaguac. Esan gura deutsube, jarri zaitiala jausi baga, labandu edo larrapastadaren bat emonda.

M. J. Peru, eta zuc ¿aituco deutseezu? Eta ¿nic ez?

P. Ni eguinda nago oneci enzutera, ta zuri baisen ondo aituco deutseet. Aitu ecin dituzunac, nic azaldau ta adierazoco deutsudaz.

M. J. Aurra bada, itandu eguijozu *Pater nosterra* eusqueraz, ta au aituten ezpadeutsat, alperric buruba cansauco dot. Ez aljaquee aserratuco.

P. Ez orren bildurric izan. Ontzat eruango dabee itandutia edocein gauza. Baña ¿nori gura dozu esan eraguin daijodan?

M. J. Lenengo, prances azeri artzalle oni, ta guero quiputzari.

P. Joanis, adisquide onec enzun gura leusquezu *aita guria*, ta atseguin au emon eguijozu. Enzun gura dau zuben eusqueria. Ezdaqui onec bizcaicua baño, ta bera bere celan alan.

B. Ori baño nai ezpadu, othoiz laburra da. Ona bada.

1 Gure Aita Ceruetan zarena,
Erabil bidi sainduqui zure icena,
2 Ethor bedi zure erresuma,

3 Eguin bedi zure borondatea, Ceruan bezala bezala lurrean ere.

4 Iguzu egun gure eguneco oguia,

5 Eta barcadetzagutzu gure zorrac, guc guregana zordun direnei barcatzen derauztegun bezala,

6 Eta ez gaitzatzula utz tentamentutan erorcera,

7 Aitzitic, beguira gaitzatzu gaitzetic. Alabiz.

P Maisu Juan, enzun ta aitu deutsazu?

M. J. Verba banaca bat bai, ecer ez gueijago. Orren arin esatia, ji jaca verbaac aitatutia, ez da niretzat. Eusquera apurren bat badaqui, ta beste nic aituten ez dodan lenguageren bategaz nastetan dau, ta niri sinistu eraguin gura ceunsquede, eusquera verba eguiten dabela. Ez naz orretan engañauco. Esan daguijala Ave Marija.

P. Joanis, esaizu agur Marija zuc esan daruazun leguez.

B. Agur Marija, graciaz bethea, Jauna da zurequin. Benedicatua zara emazten artean, eta benedicatua da zure sabeleco fruitua Jesus.

Maria Saindua, Jaincoaren ama, eguizu othoiz gu becatorentzat orai eta guero heriotzeco orenean. Alabiz.

M. J. Len bestian gueratuten nas; igarrico bere ez neutsan Ave Marija zanic, jaquin ezpaneu cer esatera joian. Aserratuten ezpajaco esan eguijozu esan daijala credua.

P. Echaco aserratuco ceuc gogait eguiten ezpadozu..... Joanis, esan eguizu sinisvidia.

B. Bai: oná.

1 Sinhesten det Jainco Aita bothere gucia duena baithan, ceruaren eta lurraren creatzallea:

2 Eta Jesu Crhisto aren seme bakar gure jauna baithan.

3 Cein concebitu baitzen Ispiritu Sainduaren bertutez: sortu cen Maria Virginia ganic:

4 Pairatu zuen Poncio Pilatusen manuaren azpian: gurutzeficatu zuten; hil cen, eta ehorci zuten.

5 Jautsi cen Ifernuetara; irurgarren egunean jeiqui cen viciric hilen artetic.

6 Igan cen ceruetara; jarria dago Jainco Aita bothere gucia duenaren escuinean.

7 Andic ethorrico da vicien ta hilen juiatzera.

8 Sinisthen dut Ispiritu Saindua baitan.

9 Eliza Catholica Saindua. Sainduen partaliertasunean.

10 Becatuen barkamentuan:

11 Haraguiaren phiztea.

12 Bethiere iraunen duen bicitzean. Alabiz.

M. J. Eta, Peru, zuc aituten dituzula verba salsa ta gach orreec?

P. Baita nire emazte ta umiac bere.

M. J. ¿Celan ori, ituaren itoz, ta arin esan biarraz, ta arnasa ots batzuben artian badino guztia?

P. Alan uste dozu zuc: baña eguingo baciña soñu onetara, ta aitu verbaac, etzenduque orrelangoric esango. Neuc bere lenengo etorri zanian ezneutsan zeuc baño gueijago enzuten; baña orain chito ederto derist.

M. J. Eun urtian bere ecin icasi nei verbeta enredau ori. Eraso eguijozuz orain oracino ta Credo, bestiac esan ditubanac, quiputz orri, ia clarubago verba eguiten daben.

P. Chorgori, emon eguijozu zuc bere atzeguin bizcaitar uts oni escatuten dabenian.

Q. Bai pocic, ta ¿cer eguingo ez det nic zugatic? Ez vide du aitu Prances onen eusquera. Aitudo ote du nerea? Ona bada, ta esan zaozu adi nazala arreta apur batequin, ta gueldicho itzac ebaguico ditudala.

Aita gurea Ceruetan zaudena

Santificatu bidi zure icena;

Betor gugana zure Reinua:

Eguin bidi zure borondatea, nola ceruan, ala lurrean.

Egun iguzu gure eguneango oguia;

Barcaizquigutzu gure zoorrac, guc gueren zordunai barcatzen dieztegun becela, ta ez utzi tentacioan erorten; baña bai gorde gaitzetic. Alabiz.

Agur Maria graciaz betea: Jauna da zurequin; bedeicatua zera andre gucien artean, ta bedicatua da zure sabeleco frutua Jesus.

Santa Maria Jangoicoaren Ama, erregu ezazu gu

becatarioc gatic orain ta guere eriotzaco orduan. Alabiz.

M. J. Ichan daguijala pusca baten. Oni obeto edo gueijago aitu deutsat, ta obeto irichi deust prances euscaldun icenecuac baño. Baña batac ta bestiac esan dabee *agur Marija*. Gauza barregarri, ta verbeta zantarra Ama Virginiari agur eguitia. Esan biar da *Ave Marija*.

P. ¿Ori esango cenduque iracurlante, ta euscalduna izanda? Agurra da eusquera garbi ta ederra, esaten dana sarrera ta juaeran. Agur jauna, agur andria esaten jaquee lotsiaren calte baga andiquijai bere. Badaquigu cer dan agur gozua norbait topeetian. *Ave* ori cer dan ezdaquigu baserrico ta beste nequezaliac; eta biar bada zeuc bere ez.

M. J. Issildu nozu onetan: baña ¿ce verba plaga da *Alabiz*? ¿Cetaco esaten eztabee *Amen*?

P. Eusquera ez dalaco icen au, ta á bai. *Amen* esanda, eusquera ez verba eguiñaz ostian, jaquin biar da cer esan gura daben verba onec, ta esan ezquero *Alabiz*, edo alan izan dedilla, edo alan da, cer dagocan esan danari, guztia dago eguinda.

M. J. Ondo dago Peru, baña esan daigula credua quiputz orrec.

P. Esan deutsat, ta esatera dua. Enzun eijozu.

Q. Sinisten det Aita Jangoico guciz poderosoan; ceruaren ta lurraren eguitzallea. Eta bere Seme bacar Jesu Christogan, cein sortua izandu zan Espi-

ritu Santuaren bertutez ta graciaz. Jaio zan Maria Virgina gandic. Padecitu zuen Poncio Pilatosen aguintearen bean. Izandu zan gurucificatua, ill ta obitua. Jetsi zan infernuetara: irugarren egunean piztu zan illen artetic. Igo zuen ceruetara, an dago eseriric Aita Jangoico guciz poderosoaren escuitic. Andic etorrico da viciac eta illac juzgatzera. Sinisten det Espiritu Santuagan. Eliza Ama Santa guciaquicoa. Santuen partelitasuna: becatuen barcacioa, araguiaren piztze berria, ta beti iraungo duen bicitza. Ala da.

M. J. Itandu eguijozu, cegaiti Ave Marija ta Aita guria esatez amaitu ditubanian, esan daben *alabiz*, edo *ala izan dedilla*, ta creduaren ondoren *ala da?*

P. Etzaitut lotsatu gura ori oni itandubaz. Neuc esango deutsut. Agur Maria ta Aita guria esaten dirianian, escatuten jacoz gauza asco Jangoicuari, ta onen ondoren dator ederto esatia *alan izan dedilla.* Baña sinistu biar ditugun gauzaac dirian leguez, Jangoicua Elessiari aguerturico eguija utsic emon ecin leijenac, ez da esan biar *ala izan dedilla*, ezpada *alan da.*

M. J. ¿Ce guizon modu nas ni? Baserritar ta Prances luebaguin batec bere dotrina gueijago daquije nic baño.

P. ¿Badaquizu nundi datorren ori? Jaijegunac datozanian, igaroten dozuz goissac bizarguintzan

meza arin bat enzunda, ta meza nagusi guichitan izango zara. Escolauba zarialaco sinistiaz, usteco dau zure Elessa-jaola abadiac, jaquituna zariala, ta ecer itandu baga, edo ceimbat Jangoico dira itanduta beste baga, emoten deutsu chartelchuba. Zuc onegaz arduraric artu ez daruazu, aztu jatzu gazteurteetan icasija, ta onlan zagoz ain atzeria.

M. J. Eguija esan biar deutsut; ez neuque osóz esango eusqueraz credua, ta daquidana bere erdi erdera ta erdi eusquera: alan eracutsi eusten chicarretan. Enzun dot prances ta quiputz credua: esaizu zeuc bizcaicua.

P. Ona bada eusquera garbi zalia zan gueure eleis-abade batec eracutsi euscuna.

Sinistuten dot guztia daiquian Aita Jangoicuagan, cerubaren ta lurraren Eguillia.

Eta bere Seme bacar Jesu Christogan, cein sortu zan Espiritu Santubaren eguiñez ta gracijaz.

Jaijo zan Marija Virginia gandic. Padecidu eban Poncio Pilatosen aguindubaren beian. Izan zan curutzian josija, illa ta lurbetuba.

Jatsi zan inpernubetara; irugarren egunian biztu zan illen arteric. Igoeban cerubetara; an dago jarriric Aita Jangoico guztia daiquianaren alde escumatati. Aric etorrico da vici ta illai epaija emotera.

Sinistuten dot Espiritu Santubagan.

Eleissa Ama santa Guztientzacua.

Santuben partiltasuna.
Pecatuben parcacinua.
Araguijaren biztuera barrija.
Eta beti iraungo daben bicitzia. Alan da.

M. J. Ederto esan dozu. Ezdozu esan neuc aituten ez dodan verbaric.

P. Ori da bada guri abade iracasliac esaten euscuna. *Sinisten dot*, au adietan errazagua zala ascozaz, bestelango nastau ta eusquera gaistocua baño. Euscaldun utsac ecin aitu eiqueezala verba oneec; *Poderosua*, *Criadoria*, *concebidu*, *poderiaren beian*, *erresucitau*, *Çatholiquia*, *comuninua*, *erresurreccinua*, *seculacua*...... Verba eraatsi ta gach oneec biar ebeela azaldaqueta luce bat, ta guztiaz bere ecin ondo ulertuco citubela euscaldun utsac. Agure ta atsuac esaten euscuben *credo barrija* icasten guendubala: baña chito ondo ericheen guc esaten guendubanian gueuc icasija, ta autor eben guztia adietan ebeela: baña ez euqueela bururic icasteco.

M. J. Peru, beti ondo verba eguiten dozu, ta Jangoicuac gorde daguizuzala buru ta miñ orreec. Alperric izango da ni verba eguiten astia luebaguin orregaz; ta alan esan eguijozu presta dedilla azerijac ataira eracarri, eta artutera neuc dacustala. ¿Ce icen emoten deutsazu? ¿Cer da Joanis?

P. Joanis esaten deutsee prances euscaldunac Juan edo Juanico esaten deutsagunari, celan Petri Pedrori, ta Estebe Estebani. Quiputzari esan deutsat Chorgori Gregorijo esateco.

M. J. Eta ¿ce opicijo dau quiputz orrec?

Q. Ni arzaia naiz, adisquidea, ecer bear badidazu. Gaztanguiña ere bai. Nabil batetic ta bestera ardi ta auntzac erosten, ta negu gogorren batec illtzen ezpadizquidaz, ongui irabazten det artille, bildots ta gaztaia salduarequin. Jaana, nola alacoa: loa nai adiña, gorputzac neque guchi. Cer edo cer bear da: languillaric ez da, lór gabe. Aizerietatic arcumeac zaitzeac, ematen dit cer eguin. Gabaz ere oi dabiltza eizaan bezala. Icasi bear det nic ere nola arrapatzen diran piztia caltegarri oec. Otsoric ez da zorionez nere egotoquietan.

P. Joanis, eguizu bada azeri janaria.

B. Ecardazu urdai zati bat. Nerequin ditut beste gauza batzuec, ta naasi guciac ipinita, burni trampa paratuta, arranoac aragui quiratstura bezala, elduco dira nola ezdaquitela, aiceri urruti daudenac, ta erorico dira. Zatozte bada nerequin eche aurrera; ta goiceco catibu arquituco degu azeri zaarren bat.

*(Prepara su mejunge: arma la trampa.)*

M. J. Guazan orain apaitara, guero lotara, egun sentijan jaagui ta icusteco jausi dan edo ez azerija.

*(Se acuestan.)*

P. Maisu Juan. Ló eguizu gois artian.

M. J. Ecin loric eguingo dot azerija buruban artuta.....

P. Jaguiteco orduba da.

M. J. Banua laster.... ecartzuz pracaac, eztaucat astiric gueijago jazteco. Guazan laster..... Jausi da, jausi da azerija. Caderati lotuta dago. Eta ¡cein esquerguia dan! ¡Ce arpegui errechinauba daucan! Ez dago cer icusi gueijago, au icusi ezquero. Ez dago prancesac asmauco ez dabeenic; azerijac eurac baño azerijaguac dira. ¿Ce encantu imini ete dau zoraerazoteco, ta urrinetic ona eracarteco? Emon eijozu cerbait, eracutsi daigun cegaz eguiten dan unturia.

P. Eztau eracutsico; asco da icustia. Guazan eche barrura.

---

## DIÁLOGO SEXTO

MAISU JUAN, PERU, EL FRANCÉS, EL GUIPUZCOANO, UN CURA Y EL ALGUACIL.

---

P. Esquini neutsun Maisu Juan, gaur goissian eruango cendudazala basuac eracustera, ta eurelan abe vici edo arbola chito asco, esateco euren icenac. Baña zeure azeri artzeiaz aztu zara. Muquer muquer ta abegui charragaz beguiratu ceuntseen lenengo sarreran prances euscaldun ta quiputzari. Ez dozu uste izan biar bizcaiti campora ez daguala gauza onic; arrotz ta erbestecuac macal, baldan, baldres, motz, oquer, cital, astó ta dongaac diriala. Erricoijeguija danac, begui ichubac euquico ditu; beintzat bai erdi gueundu ta leusotubac. ¿Celan guero zucen gauzaac icusi? ¿Celan epai uts baguia emon? Bereini zoratu oi jaquee alde onetati. Icusico dozu zuc erri cascar, basoti, otsotoquitzat ontzat euquico dozuna, ta dinozu, ¿celan vici leitez erri onetan? Eta erri atacuai deriche, ez dala bera baño adjutubagoric era guztietara. Esango deutsube ez daguala inun iturri obagoric; aise osasuntsuba dauquecla, gari ederrac artuten ditubela, ta euren bizarguin celan alangua gaiti esango dabee España guztian jaquitunagoric ez daguala. ¿*Bacocha*

*bere zoruac vici dau;* alan da esaeria, ta alan izatia. Baña igaro jatzu zuri leengo zoraasuna, ta ezagutu dozu, zuc dongatzat, lapur-usainecotzat, sorguintzat ta guzurtitzat ceuncan luebaguin prances au, dala guizon cinzó, eguijazti, on ta cristinau garbi bat. Quiputz arzain ta gaztaeguinau bere ez dala edo celangua, ta bai ondo vicija, ta baldresquerija baguia; ta bata ta bestia onac diriala adisquidetzat. ¿Gura dozu bada gueure gossarija alcarregaz artuta, urten daigun lauroc basuetara? Zuc uzte dozun baño jaquitunaguac dirá, necazari batzuc jaquin aldaiqueezan gauzeetan.

M. J. Bai, Peru, bazaut uts eguin nebala dongaró susmaubaz oneec gaiti. Ez eguijezu esan, cer bildur neucan nic lén eurac gaiti.

P. Guazan bada cerbait jaatera, urten daigun aimbat lasterren, ta biar bada esango dozu zorionian etorri ciriala oneec eche onetara.

*(Almuerzan, salen de casa.)*

P. Adisquidiac, ez dogu verba alperric eguin biar, ezpada onen bat ecarri daiquiana.

M. J. Joanis, parcatu, baña jaquin gura neuque, ce erritacua zarian Prancijan.

B. Ni nas baigorritarra; erri tippi batecoa.

M. J. ¿Etzara guerraan ibilli igaro dirian urteetan? Baigorricuac ots eguiten ebeen, ta euqueezan gaistotzat.

B. Guerla cer dan ez dut jaquin. Ihes eguin nuen andic, ta ebildu naz Españaco iri euscaldunetan nola ala ezcutuz edo agueriz. Beldur icigarrietan irago nituen asco egun. Maiz bihillatua izandu nintzan prances icena gatic. Behein baño guehiagotan eguin nuen ló basoan bizcaitarren beldurrez. Pranciara ez nuen joan nai, guerlara eramana izan ez nindin. Zorionez bucatu zan guerla gaizto ura, ez daquit nola viciaz irten nintzan Francian ta Españan, Baigorri ta Bizcaian, nor nai ardiac ta haunzac; arcume ta haunzchumeac, onac eta gaiztoac. Baciren Baigorrin ecin bestez, edo indar utsez ta porchaz guerlara cijoacenac. ¿Nai duzu enzun urte char aietaco Baigoitarren canta soñuequin lagundua? Ona emen.

Guerlara ethorri guinean
Gure vicien perillean,
Gure aguintariac frances,
Alons, chasseurs, avancez;
Guc euscara eranzutea,
Diabriac eraman bacincez.

Viva Nafarroaco
Volontarioac,
Asamblean dezuiez
Contrarioac;
Eguin zaizue guerla
Biotzez ta gogotic;

Gu ere elduen guera
Zuen ondorendic.

Asto bizcarmendi
Mendi famosó,
Españarra an dago
Beti sendo sendo;
Francesa joaiten bada
Gueldi eta mansó,
Coco ezur andiac
Etorrico francó.

Otsondoco mendian
Nor vici, nor vici
Ustez asamblearen;
Joan ciren ihesi,
Mutuia izan eta
Itz bat ez bihurtu
Urdachuri aldeco
Bihorrac izutu.

Eguberri eguna
Eguna bai tristé;
Ez guenduen guc beintzat
Alacoric usté;
Mezaren enzuteco
Libertade gabé,
Fusilac arturican
Centinelan daudé

Onla itz eguiten zutenac, etziren ez biotz gogorren jabeac. Naiagoco zuten beren echeetan lanzan ari, ecen ez guerlaan Españarren odola issurtzen. Nola nai, orain adisquide guera. ¿Nai dezu zuc izan nerequin?

M. J. Bai pocic bere.

B. Aizazuz bada adisquiden gañeco erracuneac.

Adiskidea saharric
contua berriric.
Adiskidea gauza tipian bihar da porogatu:
andian empleatu.
Adiskide eguin, ez bear duanean
baña bai behar duaneco.
Adiskideaz eguin urreaz bezala,
Iguerri gabe ar ez tezala.
Adiskide gabe vici den aberatsa,
Picatuetan lo eguiteu datza.

M. J. ¡Au ce contu da! ¡Ni nas asto andi bat. Orra celango conseju onac emoten dituban euscaldun luebaguin ta francesac, ta ce esacune ederretan! Esaizuz arren, Joanis, orrelango beste esaera batzuc; lenenguan baño gueijago aituten deutsut.

B. Niri ere Bizcaira ethorri nintzen lenbicico egunetan, zuri bezala gosta citzaiten emengo euscara aditzea. Orain berriz nerea bezala aditzen det. Ona bada zuc nai dituzun berste erracuntzac.

Echeco sua estalzazu,
Baña echeco autsa ezarzozu.
Gaitza hunqui ator
Bacar bahator.
Guizon bizarpeituti, eta emazte bizartsuti,
Ihes eguic, nola Ró suti.
Gois gorriac dacarke euri,
Arrals gorriac, eguraldi.
Goiz otsadar, arrats iturri.
Arri erabilliac
Ez ditu bilduco oroldiac.
¿Jaunen artean cein da latz-gogorrena?
Tipi izatetic jauntzera eldu dena.
Jocalariaren lasterra; gora ta bera,
Goratzea egui erdiraño;
Beheratzea ondarreraño.
Erle joan naia, ez ezti, ez bresca.
Campoan uso, echean belá.
Egurra daguienac lecu gaitzean,
Ecarri beharco du soñean.
Arstoa osinian,
Irriz irriz itotzean.

¿Nai duzu gueiago gauza onetan? Chit asco daquizquit onlaco erracunetan.

M. J. Enzungo nituque pocic ezpagueunca beste cereguinic. Baña asco dira esanac igarteco ascoz gueijago daquizula. Or dator nor bait escopeta

ta chacurraz. Abaderen bat dirudi; gois jagui da oraingo emen danian....

*(Se les acerca el clérigo y dícele Maisu Juan.)*

Jauna, gueldítu gura badau pusca baten gugaz emen, enzungo ditu enzutecuac. Ona emen iru euscaldun modu, prancesa, quipulza, ta bizcaitarra, alcar ederto aituten dabeenac. Zurtuta isten nabee aimbeste gauza jaquitiaz. Asco jaquin lei berorrec, baña ez ditu eusqueraco contubetan atrapauco.

Ab. ¿Nic artu ez? Eranzun daideela neure itaune oneetara. ¿Cer esan gura dau *Aguriac*?

P. Aguriac, *Ai guria*, edo aica illetan daguana, ta zaarrac aigurac dira. Baita beste gauza bat bere, *Agur-ia*; agurica daguala lurra ichi biar dabelaco laster.

Ab. Ecin obeto. ¿Eta *Atsuac*?

P. *Atsduna* dala, atsa darijola, edo bai aitsuba dala, edo aica daguala.

Ab. Larramendic bere ez juan edertuago esplicauco.

M. J. Abade Jauna, beequijan berorrec cer esan gura ebeen?

Ab. Ez nequijan: ¿cetaco guzurra esango dot?

Ab. Eta ¿cer esan gura dau *aserijac*?

P. *Atserija* da atsaren gacha, ta aserijac alan dabee: atsitubac dira, ta guztiz atzeco aisiac bota-

ten ditubenian. ¿Ezdau inos enzun chacurrac urrian ditubenian aserijac bota daruazala atzeti, edo allapeti aisiac, onen atsac aztu eraguiteco chacurrei oñatzetan usain eguin daruena, edo euroc lacuac esan oi dabeen leguez, arrastuba galerazoteco?

Ab. Prances ta quiputza, ¿cer dinozu zubee? ¿Ondo esan dau guizon bizcaitarrac?

B. y Q. Ederqui dio: Guc esaten diogu *eiceria* ta oro bat da, urcho dabill eizaria aiceriaren icenarequin, batez ere *ai* biurtzen bada *E* aoz, frances guisaan. Onela ongui datorquio eizari, edo aceriaren icena, ollagor, eper, erbi, ollo ta gauza ascororen eizaan ibilli oi dalaco usaica zacurrac bezala.

M. J. Jangoicuac nai ba, escribidu ta erdera biurtuta iminico ditut zuben esplicacinuac, ta lotsa baga esango dot, nortzuc iracatsi eusteezan.

Ab. Aurrera. ¿Cer esan gura dau *suguiac*? ¿Cer *musquerrac*?

P. Suguia da *subaguia*, otz otza dalaco, ta au edoceñec daqui. Musquerra da *musu-oquerra*, celan esquerra escuoquerra. Musu oquerra esatia da, beguiraune gaisto ta bildurgarrija euquitia. Esaten da guizon oquerra, guizon gaistua gaiti, ta muquerra bere bai.

Ab. ¿Cer da *otsua*? ¿Cer *artza*? ¿Cer *catamotza*? ¿Cer esan gura dabee icen oneec?

P. Otsua da *oitsua*, lecu oi, edo goi zalea, menditarra. Artza *Ar*, edo *atzapartsuba*. Cata-

motza esaten jaco *musu motza* dabelaco, ta catuba dirudijalaco.

Ab. ¿Cer da *chacurra*? Quiputza, esaizu zuc bere, bada enzun dodan leguez pastoria bazara, euquico dozu ceure chacurra.

Q. Arzaien chacurrei esaten zaie *artzanora*; edo arzaiac *ora* eguiteco daucatena. Esaten ere zaio zacurra, esan nai du *zaucorra*, edo zauc-urra, adierazotzeco zaucaria dala, edo zauca urrean duela. Onelacoac dira zacur andiac, *zaunc zaunc* lodi eguiten due: berriz chiquiac, *chaunc*, *chaunc*. Ala bada, chacur andiac gatic esaten da zacurra, chiquiac gatic, chacurra.

Ab. ¡Cein mé iruten dabeen guizon oneec! Baña ¡ce ari ederra!

M. J. ¿Bantzuz, abade Jauna, oneen esplicacinuac? Oneec bai diriala icenen anatomico andijac.

Ab. ¿Cer da *basaurdia*? ¿Cer *izurdia*?

P. Basaurdia, *basoco urde* edo charrija, ta izurdia, *ichasocua*.

Ab. ¿Cer da *oiloa*?

P. *Oi* edo goijan ló eguin oi dabena; ta oiloac igon darue lotara al dabenian egur gain, edo otaan.

P. ¿Cer da *catuba*?

P. *Catigatuten* daquijana bere atzaparracaz, edo bai *queatuba*.

Ab. Ea quiputz pastore edo arzaiña, zugaz orain neure esaminia. Cegaiti esaten dira *ardiya auntza*,

*aquerra, gaztaia, gaztamberia brujaquia?* Oni eranzuten badeutsazu, esango dot abadioc baño eusquera gueijago daquizula.

Q. Ez da gauza gaitza oriei eranzutia. Adibeza. Ardija, da *l-ardija*, larraco bedar zalea dalaco: ardiac escatzen du larraan ibiltzea, an belarra jaatea.

Auntza deitzen zaio *auan* duen *antza* gatic. Bere arnasa da gaizto ta caltegarria, ta ez guchiago bere ortzac.

Aquerra, da esatea *adar-oquerra:* argatic esan oi da itzaren arintasun ta garbitasuna aguertzeco, *aquerrac adarrac oquerrac ditu.*

P. Edertó dino quiputzac. Guc bere esan daruagu, noc miña garbijagua daben igarteco, *machin aquerra maquerracoren aquer adar oquerra baño, aquerric oquerric ez dot icusi nic.* Au zucen esaten dabena, miiñac larrapastadaric eguin baga, miñ garbicua da, ez motela.

Q. Gaztaia, da esatia *ai gaztua*, edo gatz ta eznearequin eguiten dan aia.

Brujaquea, da *buru-jaquea*, edo burutic beera janci oi dana.

Ab. Beraz ¿erdaldunac ostu deutsee eusqueriari verba au? Quiputza asco da, ez daucat zuri cer itandu gueijago, ain ondo eranzun deustazun ezquero. Baña esaidazu irurotatic edoceñec, ¿cer esan gura dau *erbijac*?

P. Erren eguite bi ditubana. Oin bat laburrago dabenac erren bat eguiten dau. Oin bi oquertuta daucazana, bijetara errenduba da. Erbijac aurreco escuchu edo oin bijac laburraguac ditu atzecuac baño. Beraz birritan errena da, ta igarten jacó ibileran, batez bere aldats-beeran.

Ab. Eta ¿cer da *mozolua*, naiz *ontza*? Icen bi oneec emoten jacoz.

P. *Mozolua* edo *motz-ollua* da *ollo-motza*, ta aguertuten dau bere motztasuna arpeguijan. *Ontza* cerren on utsa dan. Ez teutsa iñori calteric eguiten. ¿Gura dau enzun gure artian dabillen ipuin sona ta barre eguiteco bat? Anchina anchina baten jaio zan mozolua luma baga, motz motzic edo billosic. Eguan lotsatuta arpeguiric emoecinda. Asi zan uluca. Batu cirian ulubetara chori asco: inguiratu ta itandu eutseen, ¿cer eban? Eranzun eutseen ¿cer izango dot? ¿Ez nacutsu danau moztuta, luma bat baga? Otzac igaro biar nau, ta ez daucat arpeguiric egunaz urteteco; gau chori izan biarco dot neure vicitza guztian. Emoidazubez arren bacochac lumachu batzuc; jaioco jatzubez barrijac, ta ez jatzube igarrico guichi batzuc quenduba gaiti. Erruquitu cirian; emoeutseezan luma alic onenac ta ederrenac. Alango baten urteeban bere zuloti chito edertó janciric. Arrotu zan dana ain apainduba buruba icusiric, ta esateutseen beste egazti ta chorijai, eztago zuben artian ni baisen ederric. Be-

guira nire luma bete ta ederrai. Eguieben beste chorijac euren batzaarra, ta cinuen. Cer? Lotsatuco gaitubala guztioc zantar zarrac? Eztago bera baño ichusi ta ezañagoric bere arpegui ta corputzian. Gueuria da daucan luma janci ederra. Eranci daigun. Esaeban currilloiac, obe izango da leenago mandatu bat bialdutia gure aldetic, escatuten jacozala atzera, emon jacozan lumaac, ta neu izango naz mandatari. Juan jacon currilloia ta emoeutsan mandatuba. Mozolua larritu zan, ta damutu jacon arrotasuna artubaz iñoren mesediacaz. Igues eguieban ecer eranzun baga. Aric ona dabill ezcutuz, buruba egunaz aguertuten eztabela beste chorijen bildurrez. Nos bait urteten badau, darraicoz chori asco euren lumaac quendu guraric, ta darua vicitza bacar bat, eta au, bere arrotasunaren dongaquerija gaiti.

AB. Ez da ipuin ori zubec languac ateria. Asco esan gura dau. Iñorenaz jazten dana, bildur da billostu ez deguijen. Ezagutu biar da ondo eguiña, edo mesede artuba, ta esquertsuba izan. Ez dogu arrotu biar gueuria ez danaz, ta guizonac daben on guztija, Jangoicuac emona dau. Orra ceimbat gauza sarturic dagozan zure ipuin eder orretan. Ez dot sartuco zacu eten ta zulatuban. Guazan aurrera. Eta ¿cer esan gura dau *eperrac*? ¿Cer *galeperrac*? ¿Cer *ollagorrac*? ¿Cer *mingorrac*? ¿Cer *anzarrac*? ¿Cer *egaberiac*? Oneci eranzuten bajat, ezteutsut gueijago itanduco.

P. Itandu begui gura daben artian; ez dogu gogaitic eguingo guc, berorrec eguiten ezpadau. *Eperra* da *erpe-ederra*; alan ditu egazti onec bere erpe bijac. *Galeperra* da gari artetan ta galonduetan oi dabillen *eperchuba*. Aetan eguiten ditu bere arrautzac, ta atera bere umiac. Berori eizazalia da dacustanaz, ta au jaquingo dau. *Ollagorrac* eż dau cer adierazoric; verbiac berac dino dala *ollo muetia*, ta *gorra*. *Mingorra* esaten da soñuric joten ez dabelaco, dalaco mutu, ta issilla. *Anzarrac* esan gura dau *anditzarrac*, ta alan da.

M. J. Itanduten badeutsee oncei, cer esan gura dabeen *zorri*, *ardi* ta *chimicha* citalac bere, emongo deutsee esplicacinoia.

Ab. ¿Bai ete? Ea bada, ¿cer esan gura dabee?

P. ¿Noc ez daqui ori? *Zorrija* da *zordoguna*, ta guizon ta andra guztien pechuba. Ez da iñor, au zor ezdabenic. Gueugan sortuten dira bartzac, edo zorricaijac. Bartzetati urteten dabe, ta azten ditugu. Orretaraco aimbeste orraci. *Ardija* da *aarra*, ta ugarija, ta au esan gura dau ardijac. *Chimicha* edo *imichia* esaten da *chimurchi*, edo imurchi eguiten dabelaco. Ondo daquije au piztija cital oneec dagozan gueleetan ló eguiten dabenac, ta chimurchi natu edo cetaca gorritubac aguertuten dira alango chimurchituben sama, beso edo gorputzian.

M. J. Au bai dala contuba. Eusqueriac euquitia aimbeste ondasun, ta guc ez ezagututia biar dan leguez.

Ab. Esan neutsuben itanduco ez neutsubela gueijago; baña jatort gogora *erlia*, ta jaquin gura neuque, cer esan gura daben icen onec, edo cegaiti imini jacon icen au egaztichu biarguin oni.

P. *Erliac* esan gura dan *errillia*, edo osuago, *erriguillia*. Eta bene benetan erliac eguiten dabec erri bat. ¿Ceimbat echechu ederto eguiñac? An bertan dauquee biar eguinda, jateco biar dabeena. Dauquee euren buru edo aguintarija. Alperrac, celanguac dirian curuminuac, botaten ditube echeti; eta ceimbat gauza miragarri iracurten dira, dinuenez, erle biarguinac eche barruban eguiten dituben gauzeen ganian!

Ab. Jaquin gura dot gueijago bere. ¿Cegaiti esaten jaquee *mirubac*, ta *gabillaiac* egazti arrapatzalle edo chori lapur oneei?

P. *Miruba* esaten jacó *mé-iruten* dabelaco; ta esaten da mé iruten dabela, chito zuurra ta arte andijetacua dalaco, chori ta chitachubac atrapetaco. Eta arrituteco gaucia da ceimbat asmogaz, igote, jaazte, ezcuteta ta aguertutegaz ostu ta eruan daruezan. *Gabillaia* da osoz *ega-billaia*, dabillelaco *egaa, billatu*, aratu, ta aztertuten zozo, birigarro ta beste chorijac, orain gora igon ta egaan dabillela, icusten nundi nora dabiltzan, nun ezcutetan dirian; guero jaazten diriala sasi onduetara, an edo nun dacusezan beinguan arrapeetaco.

Ab. Guizonac, ez bururic ausi gueijago. Ez da-

go gueijago cer enzun. Orain niri jagot imintia erderaz zuben iracatsija.

| | | |
|---|---|---|
| *Aguria*. . . | Hombre anciano. | El quejoso ó que quiere quejarse |
| *Alsoa*. . . | Mujer anciana. . | La quejosa ó la fétida. |
| *Aserija*. . . | Raposo ó raposa. | Aire pestífero, ó cazador. |
| *Suguia*. . . | Culebra. . . . . . | Sin fuego ó fria. |
| *Musquerra* | Lagarto. . . . . . | Semblante torcido ó temible. |
| *Otsua*. . . | Lobo. . . . . . . | El montañés ó el de los altos. |
| *Artza*. . . . | Oso. . . . . . . . | El de mucha garra. |
| *Catamotza* | Tigre bastardo. . | Gato sério. |
| *Chacurra*. | Perro menor. . . | El ladrador débil. |
| *Zacurra*. . | Perro mayor. . . | Ladrador fuerte, grueso. |
| *Arzañ-ora*. | Mastin.. . . . . . | Perro de pastor, agarrador. |
| *Basaurdea* | Jabalí. . . . . . . | Cerdo montés. |
| *Izurdea*.. . | Tollino. . . . . . | Cerdo de mar. |
| *Oilua*.. . . | Gallina. . . . . . | Sueño en alto. |
| *Oilaarra*. . | Gallo. . . . . . . | El marido de las gallinas. |
| *Catuba*. . . | Gato.. . . . . . . | El ligador ó humeado. |
| *Ardija*. . . | Oveja. . . . . . . | El dado al pasto de yerba. |
| *Auntza*. . . | Cabra. . . . . . . | Boca fétida ó maligna. |
| *Aquerra*. . | Cabron. . . . . . | Cuernos torcidos. |
| *Gaztaia*. . | Queso.. . . . . . | Papilla salada y fortificada. |
| *Brujaquia*. | Brujaca. . . . . . | Traje de espalda que se mete por la cabeza. |
| *Erbija*. . . | Liebre.. . . . . . | Doble cojo. |
| *Luquia*. . . | Raposo. . . . . . | El enterrado ó encavernado. |
| *Mozolua*. . | Mochuelo. . . . . | Gallina séria. |
| *Ontza*.. . . | Mochuelo. . . . . | El puro bueno, que á nadie persigue. |
| *Eperra*. . . | Perdiz.. . . . . . | Zarpa hermosa ó corte hermoso. |
| *Galeperra*. | Codorniz. . . . . | Perdiz de los trigales. |
| *Ollagorra*. | Becada. . . . . . | Gallina sorda. |

| | | |
|---|---|---|
| *Mingorra.* | Becacin. . . . . . | El de lengua muda. |
| *Anzarrá.* . | Ganso. . . . . . . | El grandazo. |
| *Erlia*. . . . | Abeja. . . . . . . | El fabricador de pueblo. |
| *Miruba*. . . | Milano. . . . . . | Hila delgado: astuto. |
| *Gabilaia*. . | Gavilan. . . . . . | Vuela buscando: el buscador de noche. |
| *Zorrija*. . . | Piojo. . . . . . . | Tributo ó deuda. |
| *Ar-dija*. . . | Pulga. . . . . . . | Insecto fecundo. |
| *Arcacutsua* | Pulga. . . . . . . | insecto ensuciador ó cagador. |
| *Chimichia*. | Chinche. . . . . . | El pellizcador. |

Orra emen escribidu ta erderatuta, zubec iracatsi deustazuzan verba, edo icenen azterren edo esplicacinuac. Iracatsi eguidazuz gueijago jaquin daijen gaztelar ta erdaldun guztiac, celangua dan gure eusqueria.

Ab. ¿Cer esan gura dabee icen oneec, *zapuá, erroijá, beliá, ugarasijuá*, edo *iguelá, cecená, beeijá, idijá*? Oneec adierazotia, gacha izango da.

P. *Zapua* da *zapalduba* leguez verba laburtuban, ta zapua ondo zabala da, ta zapaldubaren guisacua.

*Erroija* da *belá* mueta lecu *goi* edo mendituben beti egon edo dabillena.

*Belia* da lecu *beetara* jatsi oi dana.

*Ugarasijua* da uretan *garrasica* ta *igueri* ibilten dana.

*Iguela*, da *iguerijan* dabillena.

*Cecena*, da *cerdena*, edo buru arrotu ta jasocua.

*Beeija*, *buruz beracua*.

*Idija*, edo *idundija*, idun galanta dabena.

Ab. Banua erderatutera.

| | | |
|---|---|---|
| *Zapua.* . . | Sapo. . . . | El ancho, aplastado ó zambo. |
| *Erroija..* . | Cuervo.. . | Casta de cuervo de los altos. |
| *Bélia.* . . . | Cuervo.. . | Cuervo que anda en los bajos. |
| *Ugarasijua* | Rana. . . . | Nadador vocinglero. |
| *Jguela.* . . | Rana. . . . | Nadador. |
| *Cecena.* . . | Toro. . . . | Cabeza erguida. |
| *Beeija.* . . | Vaca. . . . | Abajado. |
| *Idija.* . . . | Buey. . . . | Buen pescuezo. |

Ab. ¿Cer da *astua*, *zaldija*, *zamarija*, *mandua*?

P. *Astuac* esan gura dau, *astiro* doian, edo *astunac*. Alan gogaicarrija da astazainarentzat asto zamatubaz juan biarra; beti ibilli biar dau maquillaca leguez iguitu dedin arinago.

*Zaldija* ale, edo *garau zalia*: edo zaala da sendua leguez.

*Zamarija* da *zamatu* (edo batzuben berbeeta chaarrian) cargauta duana.

*Mandua*, *ederto dua*, edo ibilli onecua dala; gauza mania esaten dogu gauza on ta gogocua gaiti.

Ab. Nua neure erdera ipintera.

| | | |
|---|---|---|
| *Astua..* . . | Burro. . . . . | Camina despacio ó pesado en andar. |
| *Zaldija..* . | Caballo. . . . | Aficionado al grano: fuerte. |
| *Zamarija* . | Cabalgadura. . | Cargador ó conductor de cargas. |
| *Mandua.* . | Macho. . . . | Camina apaciblemente ó á placer. |

Onectati ateraten dot Abere, ganadu, guiberri,

piztija, patari, aar ta vicitzia dauquenen icen guztijac, diriala berarijaz eraatsijac, adierazoteco euren inclinacino, edo propiedaderen batzuc; ez daquit celan esan eusqueraz ondo verba onec. Ni liburu zalia nas; asco iracurri dot neure urteetan, ta esan biar deutsubet, zubec jaquin ecin cinaijan gauza bat. Jangoicuac beste gauza guztien ondoren eguieban guizona, ta oni emoeutsan jaubetasun ta escu osua leguez, eguin cituban animalija guztien ganian. Aguertu jacozan oneec Adani, ta jarri aurrian morroe batzuc leguez, ta bacochari imini eutsan conveni edo ondo etorcon icena, ceñian espliquetan cirian euren propiedade, edo bata bestiagandi desbardintuten citubana. Emendi ateraten dabec jaquitunac, lenengo guizonari eraatsi eutsala Jangoicua berbeeta bat, ta ezagutu eraguin beinguan animalijen bacochtasunac edo propiedadiac, ta eguiebala jaquituna. Au jazo zan Adanec pecatu eguin baño leenago, ta celan Jangoicuac eguin da laster jausi zan pecatuban, ez eban izan demporaric berez icasteco animalijen cercelidade edo circunstancijac, ez asmeetaco berbeetia, ta alan dana izan zan, Jangoicuac beingo baten iratsirico jaquitia.

Mundubac citubanian eguiña izan zaneti, guichi gora bera, milla zazpireun irurogueta amar urte, ondatu cituban Jangoicuac vicitzia euqueen criatura guztiac, itoten ciriala bialdu eban ujol andi bategaz, zortzi guizon ta andra, lau aetati eta beste

lau oneetatic, gorde citubala cucha onci moduco baten, nun bere gorde cirian animalia batzuc, guero barriro gueitu citezan. Castigu au iragota, lau guizon ta lau andra aen ondoringuac gueitu cirian asco urtiacaz, ta ezaguturic ecin alcarregaz, edo alcarren urregui vici zeitequezala, zabaldu baño leenago munduco aldeetara, erabagui eben eguitia torre chito luce bat euren icena onrauba izan cedin. Arrotasun andi bategaz baciarduben jasoten torre au. Artietan etzan munduban verbeeta bat baño, ta berá Jangoicuac lenengo gurasuei iracatsija, ta oneetati euren ondorenguai etorquena. ¿Cer eguieban orduban Jangoicuac, ichi eraguiteco arrotasunez asi eben biarguintza á? Aztu eraguin len equijen verbeetia; iraatsi beste verbeeta batzuc. Confusinoe edo alcar aitu ecinagaz, ichi biar izaeutseen torria amaitutiari, ta guero zabaldu cirian munduti batzuc batera, bestiac bestera bacocha bere verbeeta iraatsi jaqueenaz. Andi asi zan verbeeta asco lurrian egotia, guerora gueituten ciriala gueijaguaz. ¿Cer jazoco lichaquegu bizcaitarrai aztu eraguingo baleuscu eusqueria, ta erri bacochecuai iraatsi beste verbeta barri bana, erri baten bacarric isten dabela lengo eusqueria? ¿Ce confusino ta alcar aitu ecina erri batzucuac bestecuacaz? ¡Apartauta banatuta leguez vici biarco guenduque!

Noeren ondorengoren batzuc, munduti zabaldu

cirian demporan, etorri cirian Españara; nortzuc izan cirian, ezdaquigu ciur. Baña San Geronimoc gueijen gueijenacaz dino Españara etortia tocau jaqueela Tubal berari, edo bere ondoringo urrecuai. Oneec ecarri eben euren verbeetia, ta onec izan biar eban Babelco Torre eguitian Jangoicuac iraatsi cituban artecoren bat. Eusqueria zala verbeta au, sinistu guiñai dagozan errazoe andijac gaiti. Eusqueriari eztaquijo inoc arrezquero etorreraric. Eusqueria zan anchinaco España guztico verbeetia. Eusqueriac ez dauca, ezagututen dirian beste verbeetacaz, alcartasunic. Eusqueriac daucaz chito anchinacua dalaco usain ta sinisgarri asco, ta gauza ascotan. Baña cec gueijen zurtuten naben ni ta gozaro, da icustia, celan abere, piztija, guiberri ta egaztijac dauqueezan eusquera icenac, azaldau edo espliquetan dituben verbaac, batu ta laburturic, euren cercelidade ta propriedadiac. Au berau eucan Jangoicuac Adani iraatsi eutsan verbeetiac, ceñec izan biar eban verbeeta oso edo perfeccino andicuac. Iñoc ez daqui ciur, cer eguin zan verbeeta lenengo onegaz; edo galdu zan guztiz, edo nastau zan guerora besteen batzucaz, edo dan hebreotarrac gorde ebeena. Baña dan leguez dala, badirau bere verbeeta ác, ez lenenguan eban garbitasunaz. Ondo da jaquitia zubec bere barri edo noticia oneec, ta nic cerbait iracastia, iracatsi deustazuzan ezquero niri aimbeste gauza, leenago

ez nequizanac. Eta Jangoicuac nai ba, emendi aurrera artuco dot ardura andi bat, baserritar ta beste nequezale erdera bagacuetati eusqueria ondo baño obeto icasteco. Egongo nintzate luzaruago zubecaz deituco ezpanenduque elessaco cereguiñac. Erosico ditut, topau aldaidazan, basco ta quiputzeco liburubac bere, eusquera guzti guztietacua aituteco. Agur guizonac, guera zaiteze ondo, bada poz ta irabaci gueijagogaz nua, amar erbi edo eper illda baninua baño. Jarraitu eguijezu orain artu dozuben bide, ta lanari.

Todos. Agur, jauna; ta becargu escu ori mun eguin daijogun.

P. Guazan aurrera inun gueldìtu baga, esan daijoguzan neure bizcaitar jaquin gura oni abe vici edo arbola ascoren icenac, eracutsijaz baso oneetan.

M. J. ¿Cegaiti esan dozu abe vici, edo arbolia?

P. Zaarrai enzun neutseen, len abeen icena emoten jaqueela, orain arbolen icena emoten jaqueenai; ta enzun neutsan abade eusquera zale bati, obetó esaten ebeela. *Abarra* esaten jacola, *abe-adarra* verba laburraguan batuta. Erri ascoc gordeten ebeela gauza bera euren icenetan, *Abadino*, *Abando*: baita *Abendaño*, *Abanzabalegui* ta beste eche ascoc bere, ceintzubetan abiaren icena emoten jaqueen oñian dagozan arbolai.

Orain esan biar deutsudaz, baso onetan dagozan abe abechu edo arbola ta arbolachuben, icenac.

Basaberac esaten jaquee chicar igon baga dato-

zanai. Celanguac dirian otia, guisatsa, guinarria ta beste asco.

Beresija esaten jacó, esituta daguan lecu bati, nun datozan, goratuten ez dirian abechubac, ta andui galantac.

Abe nagusijac dira oneec.

| | |
|---|---|
| Aricha. | Ocarana. |
| Artia. | Madarija. |
| Ametza. | Sagarra. |
| Altza. | Masustabia. |
| Aguiña. | Macatza. |
| Pagua. | Mispillia. |
| Lessarra. | Querisia. |
| Inchaurra. | Priscuba. |
| Castañia. | Picua. |

Abechubac dira beste oneec.

| | |
|---|---|
| Azcarra. | Asto-larrosia. |
| Eltzuna. | Larrosia. |
| Elorrija. | Otia. |
| Erinotza. | Ota-maruba. |
| Ichusqui latza. | Arobija. |
| Gurbisia. | Maatsa. |
| Gorostija. | Urquija. |
| Masusta chicarra. | Untza. |
| Guisatsa. | Uurra. |
| Guiñarria. | Zumia |
| Saratsa. | Zumaligarra. |
| Laarra. | Urricha. |

M. J. Peru, esan biar dot ostera ta ostera, ni baño gueijago zariala: caleric cale ibillita ez ta icasten barriquctia, alperrerija ta dongaro esatia ezpada. Baso onetan ta baserrijetan dauqueela guizonic jaquitunenac cer asco esaminau, edo zuc esaten dozun leguez, cer aztertu ta cer icasi gauza ascotaraco. Guazan echera, bada egubardija urrian da. Ni ez ece, abade jauna bere lotsatuta juanda, icusiric zubec daquizuna.

P. Adisquidiac, eldu gara jaateco ordura; bazcaldu daigun gogoz. Maija prest dago, jatecua bere bai, ta nire umiac oraingo gosetu izango dira. Marija, atera eguizu saldia.

M. J. ¿Celan pagauco deutsudaz niri eguin deustazuzan mesadiac, ta euqui dozun castuba, nic zugaiti ecer eguin baga?

P. Niretzat da mesedia etortia ona lagun neure gogocuac. Jan eguizu atsacaba baga, ta bijar edo etzi arquitu neinde zure biarrian.

M. J. Jangoicuac osasuna emon daguizula, baña gaisotuten bada zure echecoric, edo vici nasan errijan ecer biar bacendu, ez besteric billatu. Chacur zauncac dira... Olesa da, ¿nor ete dogu?

P. Zuaz nor edo nor, cein dan icustera; unc ecin obian dator; bada jarri baño ez dauca gueugaz maijan. ¿Nor da?

Chom. Icerdi bitsa darijola dator ona guizon bat escopetiaz, ta aita, dino zu biar zaitubala.

P. Datorrela aurrera.... adisquidia, ¿nor zara, ta cer biar deustazu?

ALGUACIL. Ni nas justicijaco aguacila. Artu dot arrastuba, ta esan jacu onuntz etorri dala barberu ondo apaindu bat, pantaloeduna, ta moda modara jancija. ¿Nun da bera? Eracutsico jaco celan vici.

P. Estago nire echian beste guizon gauzaric emenche gagozanac baño, alperric aratuco dituzu zocondo ta bazter guztiac.

AG. ¿Eztaguala? Guzurra badinozu, ceuc bere etorri biarco dozu carcelara.

P. Eguizu naozuna; billatu eizu albadaizu: orra eche guztija, jaube baciña leguez, eztago besteric emenche gacusuzanac baño.

*(Registra la casa el alguacil, y entre tanto le habla Maisu Juan á Peru al oido lleno de pavor.)*

M. J. ¡Ai Peru neuria! Galduba nas. Osatu zan atsua: emon dau querellia; artu ditube informacinoe batzuc. Ventaco otseiñac saldu nau. Igarrico deust neu nazala, ta dongago dana, zu bere eruango zaitube preso erru baga.

P. Zagoz gueldi gueldi zurbildu baga; ez aguertu bildurric. Zure zorionian aldatu cenduzau soñocuac. Nire emazte ta umiac isillac dira: bestioc ezdaquije ez nor zarian, ez cer igaro dan; echaco zure atzian etorri danari burura etorrico, zu zarianic: iminico dogu, gura badau, gueugaz bazcaitan,

ta ez arren icararic eracutsi, ta jan eguizu ardura baga. Juango da etorri dan bideti zu baga.

M. J. ¡Ai Peru neuria! Ill jat jaateco gogo guztija; icara jabiltaz belaunac: nire arpeguico marcaren batzuc emon badeutsez, igarrico deust beste soñoco batzuc euqui arren, ta bijoc izango gara galdubac. Eta ¿celango atsacabia zure emazte ta ume onentzat? ¿Ce plagac ciricatu nenduban atso venteria banatuteco? Pecatubaren castiguba da au.

P. Zagoz issillic, ta arpegui bildur baguiaz; badator ona ecer topau baga, ta enzungo dogu cer dinuan.

Ag. Ez da emen ecer aguiri; guzurrac esan deuscubez onuntz etorri zala.

P. Jarri zaite bada emen gueugaz jaaten, ta guero juango zara.

Ag. Escribauba zain dago benta baten, emendi neroiana eruateco preso; maquina bat costu eguin dira; ez daquit noc pagauco dituban.

P. ¿Cer eguin dau zuc billatuten dozun guizonac, catigu eruateco?

Ag. ¿Cer eguin daben? Ventera andra zar erdi ichu bat dana banatu berarijaz urdai azala aurrian iminita, labandu ta jausi cedin. Guero barberuba dala, ta Jangoicuac daqui certzuc eracutsi deutsazan gaissuari; illaguinic egon da, ta gastubac jaanian eguin, ta ecer pagau baga juan jacon. Nescatilla bere otseiñac aguertu dau guztija; anche dago

urdai azal, labandu eragui-eutsana. Ez dau plaguiac gueijago asmau. Beragaz eban lagun baserritar bat; baña nescatilliac berac declarau dau, ez euqueela bijac erruba, ezpada bacarric barberubac. Ecin jaquin izan ditugu nunguac cirian: bai bacarric barberuba eguala chito apainduba buruti beera. Esan deuscube onutz artuebela; baña besteren batzuc izan biar eben. Or compon. Escribaubari ta niri pagau biarco jacuz gueure aloguerac nundi edo andi; baña atrapau baguendu barberu dontsuba, quenduco gueuntsan bizarra.

P. Jan eguizu ondo orain, ta zuaz guero zeure baquian.

Ag. Bai, baña cerbait escubetan videraco artuta, tragochu bat ezarrita, banua laster. Euqui eguizube bazcalondo on bat, ta agur milla esquerregaz.

P. Zuaz ondo ta ordu obian.

M. J. Arnasa artuten dot orain; ascatuten asi jat bijotza. Peru, nic eguin dot escapadia. Zorijoneco soñoco aldatutia izan dot. ¿Cer izango zan nizaz ezagutu, artu, lotu ta eruan banendu? Esqueraco vidian iminicó nenduben lotsaari andijaz, carcelan buruba icustiaz ostian. Aguacil etorri dana, ¡ce mutil sendua!

P. Bai Maisu Juan; ondo mardua dauca bere guerrija; cilbota chito esquerga ta urtena; zanco batzuc ondo lodi ta mamintsubac; arpegui gorrista,

ta matralla albuac guicen guicenac ¡celango colatsa ocotzpian! ¡Cein guri, gori ta malatsa guztija! Escutur bacocha iragoten da arraa batian lodieran; eta cein uletsuba! Besteti, ¡cein ondo jancija! Gauza batec zurtu nau, ain ardao guichi edatiac, emen era ona euquita.

M. J. Ni ez nau orrec zurtu. Ventara dua; an euco dau naicua cer edan. Matralla alde aec ez dagoz alan eguinda macallao saldia artuta, ez sardina usteldubac janda. Zain dagoz nor jausi aldedin cetan edo atan esesteco, paperac balcituteco, eta andiquijac baño vicitza obia daruatzube iñoren negarren costura. Aztuten dira erruquijaz, ta dauqueez biotz batzuc achac baño gogorraguac. Icusi ditut nos bait idijac corteetati atera, ta salduten euren paguraco, arrantza batian isten citubela idijaubiac. Nequezaliac eurac dauquee erru ez chicarra. Utsa gaiti, verba chachar batzuc gaiti, zor premiñaz atzeratuba gaiti, duaz querellac emotera; erraztuten deutsee vidia, esanaz, despachu bat aterata, lau egun barru urtengo dabeela gura dabeenaz. Lau egunac elduten dira lau illera; despachubac dacaz declaracinoiac, eta eguiten dabee proceso asco litzatiana amar bider lapurren aguiri edo probantzac eguiteco. Ni Jangoicuac gorde nau euren atzamarretati, mereci ezpaneban bere.

P. Bai Maisu Juan. Dongaró eguin cenduban, ta guztioc galduteco vidiac edegui cenduzan. Zor

dozuz ardan eche atan jan cenduzanac. Onezaz ostian, zure erruz izan ditu atso gaisuac calte asco osatuten. Eta ¿noc zor ditu beste costubac? Errazto garbituco dozu arima ori, itundubaz abade aitu bategaz.

M. J. Bai Peru neuria. Emoten deutsut verbia oräin artian baño obagua, ta arima zaliagua izango nasala. Zure verba onac, zure echeco ta echecuen jarraigarri edo ejemplu onac iraatsi ditu nire biotzian gogo barri ta on izatecuac. Emoidazu laztan bat urten orduco emendi. Ez esan prances luebaguin, ta quiputz arzain oneei cer igaro dan. Banua issill issillic neure echera ta zeure erropa oneecaz; bada neuriacaz baninua, menturaz ezagutu ta atrapauco nenduquee. Bialdu eguizuz neure erri ta echera zeure semeren bategaz derichun baten, ta nic beragaz biurtuco deutsudaz zeuriac. Eta quezcaric euqui ez daguizun, neu aituco nas errico curiaz, cein dan jaquituna, ta pagauco ditut esaten deustazan guztijac. Eguin gura deutseet agur bat beste bijoi, esan ez daijen igues eguin dodala ecer aitatu baga; baña isten dot zure contura zeure emazte ta nine onacaz cumplietia..... Agur adisquidiac; echera biarra eldu jat, aguindu ta guera zaitezé Jangoicuaz. Agur Peru neure biotzecuá; agur osteraco artian; ez nizaz aaztu. Agur.

# DIÁLOGO

ENTRE DOS AMIGOS ECLESIÁSTICOS, EL P. FR. PEDRO DE URLIJA Y D. JUAN DE ZANDIJA.

---

FRAILE. Adisquidea, eldu jat nos edo nos arpeguia aguertuteco une chito ona. Sarri alcarregaz verba eguin dogu, bizcaico jaun, abade ta nic leguezco soñocoa darabillen ascoren naguitasun, alperreria ta arduraric eza, eusquerea icasteco liburubacaz bururic ausi baga, bada ez dauquee liburu bizcai eusquerea iracatsi leienic. Eta ¿noren erruz? Euren erruz. Ni nabil bazterric bazter, erriric erri, bizcaico uri ta elizateric gueienac irago ditudala. Abade ascoc nazaude, ta guichi guichi batzuc baño aurquitu ez ditut eusquera zaleac. Gura leuquee jaquin, baña neque baga, achurlari alperrac leguez, ceñen soloa dagoan laarrez, muguitaz, azquiz, garduz, zalgaz, zoragariz beteric.

ABADIA. Neure Aita Pedro. Eguingo dozu aurrera, gura dozun beste verba, baña ebagui biar deutsut beinic bein esatera cinuazana. Zuc eguingo dozu bizcaico eusquera verba zeure erri ta aldereetan ebaten dan leguez, ta nic neureetan icasi dodanaz. Cein batera cein bestera, dendatu biar gara, erde-

ra usaiñac ichiric, nequezari euscaldun utsac iracatsi deuscuben guisaan verba eguitera garbiro, ta autortu eraguin biar deutseegu, obetó aituco gaitubela gueure olaguizon, arotz, arguiñ, errementari eta baserritarrac, eleisaan aguertuten garianian icasi biar ditubenac iracasten, erdi erdera ta erdi eusquera, beste euscaldun chár ascoc, diadarrez diardubenian baño. Ondo eguiña dago elessiac beretu, ta erdera guztietara zabaldu dituban bere verbac, guc bere gordeetia; baña bestelango verba arrotzac, quendu biar dira dagozanian icen eusqueraco garbi, ta nequezarijen artian artu ta aotubac. Gari solo bateti atera biar dira zalgá, oló, zoragari ta bedar dongaac; ezpabere azpiratu zapaldu ta itoco dabee gal bedar garbija, ta ichico ez dabee biar dan garauric artuten. Baña ¿cer jazo da gure artian? Erein ditube ascoc zalga, olo, ta zoragari aci chatarrac, esan gura dot icen arrotzac, erderiari ostubac. Ichi dabee eusquera gaissua naastauba. Ló eguin dabee, iratzarriric egon biar ebeenac, erein etzedin aci chaarric. Orain garbituco bada solo au, ta artu garau garbija, necatu biar da ateraten bedar dongaac, quendu biar dira erderati premina baga iraatsi jacozan verbaac; batu eusquera icen bazterlu ta zoconduta dagozanac, ta imini biar da garbituta, zan leguez anchina erdaldunacaz artu-emonic etzan demporetan. ¿Ez da alan, Aita Pedro?

FR. Alan da; baña ¿noc buruban sartu au euscaldun chaarrai? Equin dot eztarria sicatu ta garraztu artean, ori sinistu gura izan deutseedala ascori. Baña alper da Maria maquillatu. Gulanguai dagoquee batutea eusquera baztertua. Gu gabilz necazariacaz; enzun bear deutseegu cer dinuen, ta gorde ondo, guero aguirian iminteco icen eder asco, ta gueldica gueldica ecarrico deutsaguz eusquera billostuari bere janci edo soñocoac, ta aguertuco da apainduric, iñoren soñocoac erancita. ¿Cer zan gaztela erderea orain milla bat urte? Gaur aituco ez litzatean naaste bat. Nequearen nequez, apaindu gurearen apainduz, iñoren bichiacaz bada bere, janci da edertó, nor dan bere guraso garbia igarten, erraz ez izana gaiti. Erromar, Euscaldun, Arabiar, Godo ta beste gende guiro arrotzetati artu ditu ecin esan beste luma; ta bacochac escatu ta quenduco balcutsa beria, ¿cetan gueratuco litzaté? Eusquereac ez dau iñoren biarric edocein gauza esateco. ¿Ez dozu enzuten, celan gure baserritar ta beste necazari ascoc diarduben verbeetan, labandu ta ecetan catigatu baga? Baña zuaz praile, abade ta beste andiqui ascogagana. ¿Celango estura ta larritasunac contu lucechu bat esan biar bada?

Ez da oraindino egun asco eldu nintzala abade gazte baten echera. Aurquitu neban uleai tiraca, osticoca, cinuala erderaz. *¿Quién me ha metido en*

*este empeño?* Icusi nendubaneco jaso jacon biotza, ta esaeustan, Aita Pedro neurea, ordu onean dator. Esan neutsan neure agurrac eguinda, ¿cegaiti ori D. Calisto? alan eban icena. Encargau jat, cinuan, S. Pedro gueure Elesaco patroiaren sermoa; etorrico da gente asco, ta emen nabil erderati eusquerara traducidu ecinda. Onlan verba eguiteban euscaldun eder onec. Eracutsi eustan bere biarraren zati bat. ta asten zan onelan: *Empeñu andia por cierto, neure auditorio noblia, neure predicacinoaren principioan predicau bearra, cerubetaco guilzac Jesu Christoc confiau eutsazan santu andi baten ganean. Dichosua ni, zuei gusto emon al baneizu. ¿Noc igualau eban S. Pedroen fedia? ¿Cein santuc esperanza andiagua?......* Etzenduque sinistuco, celango erdera mordolluac egozan iminita, ez euscaldunac, ez erdaldunac aitu eiquezanac; eta illa betean egon zan buru austen, ta oraindino ez eban bearraren erdiric eguin. Esan eustan, zucendu nenguiola. Eranzun neutsan, errazago zala cimentuti eche barri bat jasoten, eche oquertu, obendu ta abe erdi usteldubeñ artean, zur barri ta orma barriac eguitea baño. Esan neutsan, erre eguiala bere sermoe erdi eguiña, ta lenengotic gura nebala bear eguin. Iracurri neban berac aurrian eucan liburuba, ta gueiago jaramon baga, asi nintzan neure bearrean. Etzan neure escuba gueratuten; eragozpen baga joian lumia, iminten gogora etortana,

ta ordu bete igaro baño leenago, neucan bear gueiago eguinda, abade gazte ac ill osuan baño, ta guztia eusquera garbi baten. Ecin sinistu eban ecusana, ta alango baten esan eustan, ¿celan ain erraz bear eguiten neban? D. Calisto, nirautsan; igongo neuque biar gossian elesaco iracasteguira, lumaric leenaz artu baga, ta eusquerearen aldeti ez neuque eragozpenic euquico, ordu betean jarduteco. Ichi eguiozu erderati eusquerara biurtu guriari; neurdin gauza garbiric eguingo ez dozu. Enzun eguiezuz necazareai euren esacuneac; icasi eguizu eusqueria eurac ganic; eguin zaite eusquera iracurten, ta urte bete barru urtengo dozu euscaldun. Emon neutsan neure bearra amaituta, gueratu zan pocic, ta bota eban sermoia, guztiai ederto erichen leguez.

Ab. ¿Ceimbat orrelango bizcaico erri ascotan? Negargarrijena da urte guztijan Jangoicuaren verbia azaldau baga iragotea batec baño gueiagoc, sarri sarri iracasteco loturic dagozanac. Ecin dot, dinue, eusqueraz ecer iracatsi: lotuten naz beriala; icara gogor batec artuten nau; icerdi larrijac urteten deust; gueratuco nintzaate. ¿Au sinistu leite? ¿Amaren bularreti icasi eban verbeetan, ecin verbaric eguin? ¿Eta icasi bere gura ez, bere elestar necazarijac daquijen verbeeta bacarra? ¿Ce bide artu, Aita Pedro?

Fr. Atera ugari liburu eusquerazcuac. Oneei

equin gau ta egun leguez; dendatu iracurtera lotutasun baga, ta dempora guichi barru icasico litzate eusquera ondo verba eguiten. Emendi ¿ceimbat mesede?

Ab. ¡Cein ondo dinozun! Liburu eusquera garbicuac iracasten dabee onduen, celan jócatu icen ta verbuetan. Eusqueriac daucaz verba joco, bestec ez leguezcuac. Erromar, Pranees, Gaztelar ta beste verbacuntzetan ez dago eusqueran leguezco gira biraric. Ez daguizubela esan urrezco mendi bate gaiti verba baten, *nator ó banator*. Au esateco biar ditube verba asco, ta esan, *ya voy ahí*. Ona cein ederto jocatuten dan eusqueraz.

*Banator*, *bazatoz*, *banuaco*, *bagatoz*, *badator*, *bajatorcuz*, *bajatorzuz*, *bajatortaz*, *badatorcaz*, *bajatorqueez*. Erdaldunac gastelarren artian iraunlsi luciac biar ditube, verba joco oncetan daguana esateco.

*Ya voy* esatia ez ta asco, bada ez dino nora doian. Eusqueraz, *ya voy*-ren ordian esaten dau, *banua*: baña ez da ondo eranzuna norbaiten deira. Esan biar da, *banator*, esango baleu leguez, banua orra, edo zagozan toquira. Ona bada celan gaztelatu biar dirian goico verba joco aec.

*Yo ya voy ahí: tú ya vienes aquí: yo ya le voy. Nosotros ya os venimos ahí. Ya viene aquí él: ya se nos vienen ellos: ya se os vienen ellos: ya se me vienen ellos. Ya se le vienen ellos. Ya se les*

*vienen ellos.* ¿Ceimbat onelango edergarri eusqueriac?

Verbuan bertan sartuten dira aimbeste gauza, ta erdaldunac barriqueta ascogaz esan biar ditube, ta eurac macal ta gatz baga.

Icen-ordecuac *(pronombres)* eztira icentau biar. Ona cein ederto batuten dirian.

*Nua, zuaz, dua, guaz, zuaze, duaz. Ni* edo *neu* sartuta dago *N* lenengo letran. Alan bestiac.

Esateco *ya yo te los traia,* asco dau eusqueriac esatia, *banecarzuzan.* ¿Nosco amaitu bein banaan, aitatu gura banitu gure eusqueriaren apaindurijac?

Fr. Ori orrelan da; baña aspertzaca esango deuscube erdaldunac ta euscaldun dongaac, ez dala gauza eusquerea gauza goratubetaraco, ez da bere escuor darabilguzanetaraco. ¿Noc esan eusqueraz *sombrero, tabaco, tabaquera, baston, capa, taja-pluma*?

Ab. Asi gaitian emendi, Aita Pedro. Gure euscaldunen buru estalquija zan, da, ta izango da chapela edo capelia. Icen au gueuria da, celan dan buru janci au. Sombrellubaren icena ta izatia dira asmo barricuac, ta ez anchiñaco Españarrenac. Gauza barrijac icen barrijac biar ditube. Eta icen barrijac emoteco, ez dau iñoren biarric eusqueriac. *Sombrero* da querizgarrija, edo buru-tellatuba. *Tabaco* da sur-autsa; *tabaqueria* sur-auts-oncija: *baston* escu-maquillia, *capa* corputz-estalquija: *taja-pluma*

luma-epallea, ta eusquera verba iraatsi oneec, adierazoten dabe gaucia cer ta cetaraco dan.

¿Gura dozu orain isildu daguidazan bigarren esetsi edo salacinuaren gañian?

Fr. Bai arren, ta orretaraco igaro eguizuz eusquerara Erromarrac ichi deuscubezan verbeeta goratu ta apaindubenac, jaquin daien guztiac, guztiracua dala eusquerea.

Ab. Banua bada beriala orretara, ta eraguin daijuegun eusqueraz verba Q. Curcio, Salustio, Tito Libio, Tacito ta Ciceroni, ceintzuc dirian enzunenac, ta alan icusico da eusqueriac baditubala verba vizcor, apaindu, zoli ta adiutubac gauza goratubac azaldetaco.

ALEJANDROREN VERBACUNTZIA BERE GAISOTASUNIAN

ADISQUIDE TA OSAGUILLIAI.

---

Badacutsube celango esturan, celango atsacabeetan ta cein larri ipini naben neure gauzeen oquer urtetiac. Derichat danzudala arerijuen escuburdinen ospé ta barallia. Iragorico egun dontsu ta zoriobagüetan neu nintzan emon nitubana guerraraco vidiac; neuc deituten nituban, neuc puztu escubetara etorri citezan. Baña orain, aupadaca danzudaz, diadar ta ajuica dabilz neure billa, nire

bildur ez dirianac leguez. Darioc egó ta arnasa beste batzuc arturic, bialdu deustaz carta arro, ta lotsabaguiac, cematuten nabela jaubetuco dala neure gauzaacaz. Guztia litzate alperric, dana pamparrerija aisiac daruana, neure escuban baneuca gaisotasun au urrin botatia, neure osasunaren jaube banintz. Osagarri macal, indarbagaco luzavidiac dacarrezanac, ta bardin osaguille nagui, baldan ta ardura guichicuac, ez dira benetan egoqui ta adiutubac neure gacharentzat. Obetó legoquet, donsubago nintzate eriotziac beingo baten eruango banendu neure biotzaren jaube nasala, eta ez vici eriotza beluco baten zain, ecer eguin baga. Alan bada, sendaguilleetan laguntasunic arquituten bada, euren lanac alperrac ezpadira, jaquin beguije, gueijago billatuten dodala, ta leenago autu guerraco eguiquizunen zucenvidia, neure osasuna ecartia baño. Ex. Q. CURT. LIB. III CAP. V.

CATILINAREN JARDUN ERREGUZCUA BERE SOLDADUBAI.

---

Ezaguturic daucat, neure soldadubac, ez diriala verba soil ta utsacaz azcortu ta vizcortuten guizonen biotz jausitu ta macaldubac. Soldauteguija

nagui, buruguiñ ta lepozalia bada, iraauntsi, jardun ta equin guztiacaz leena gueratuco da, ta iguituco ez da ecertara. Esan eguijozu gura al guztia coldar, icaracor ta bildurti bati; ez deutsazu bijotz barriric emongo, ez sendotasunic eraatsico. Beti izango dozu macal, ta gauza eza. ¿Arriscu ta icen onac zolitu ta indartuten ezdabena, celan indartu ta vizcortu verba ascoren ots eta soñubacaz? Belarrijac mimberatuten dira bijotz sendua eztaguanian. Alperric soldadu erquin, coldar ta guperia zapalduco dozu zemaiz ta aguiraca garratzez; alperric ondo esanagaz eregauco dozu; baldin jatorriz ta berez leguez ezpadacar bijotzeco azcortasuna, ez deutsee verbaac cirquinic eraguingo. Deitu zaitubedaz bada, ó neure soldadubac, verbachu bitan neure asmua aguertuteco. Etzagóze azturic eguijaz, ceimbat atsacabe ta calte ecarri deuscuzan guri ta bere burubari Lentuloren arduragabetasun, ta chaldanquerijac. Bacenquijen bai, celan Uriti lagun barrijac icharoten nenguan artian, ecin juan izan nintzala Galotarretara. Barriz, nic baisen ondo dacutsube, ecin eztu ta larri gagozan orain. Eragozten deuscube ecer aurreratutia soldau aldra latzgarri bic; bata dator Uriti, bestia Galiati. Gogua berotuco balichaquegu, ta erabaguico baguendu emen gueratutia ¿celango eragozpenac, ogui, ta gauza ascoren eztasunaz? ¿Cer eguin bada estura onetan? ¿Macaldu, larga guztiari, ta iguesa artu? Ez orrelan-

goric, ez. Biarrac gueitu biar dau aguintia, ta estuban indar barri batzuc artu. Nora nai juan, neurdin guero bere burdiniaz edegui biarco dogu vidia. Zagozé bada prest ta sendó, arerijuacaz escubetara etorri biar dan orduco. Gomuta zaiteze zeuben escumeetan daruazubezala ondasunac ugari, zeuben izen ta izate ona, erri ascoren zoriontasuna, ta urratutia vicitzaco locarri ta catiac. ¿Cer gura izan cinaije gueijago? Goitu ta trisquetan badituguu, ¡zorionecuac gu! Alan jaubetuco gara euren gauza ascogaz; euquico dogu cer jan larreguijaz leguez: catiaric gura ez dabeen errijetacuac, arrotzat ta gu ez gazaubezanac bere, urtengo deuscube videetara, laztanduco gaitube, eguingo deuscubez agur ta ondo etorri gozuac, escumun estu estu amorezcuac; esquer soñubac enzungo ditugu alde guztietaric, ta Catilinaren soldaduben icena zabalduco da lurreco bazterretaraño. Barriz macaldu, ta bildurraz adore baga gueratuten bagara, beste soñu bat enzun biarco dogu; gauza guztiac birau, goibetu ta buruz beratuco jacuz. ¿Burdiniac gordeten ez ditubanac, celan gordeco dira erri ta adisquiden videz?

Onezaz ostian, neure soldadubac, ez da bardin ta ora batecua areen ta gure zorija. Gu gabilz cate ta catigutasun lotsagarri bat urratuten, arnasa baquetsu ta nasaituba billatuten; gura guenduquez eguin dontsu ta zorioneco erricuac, ta güenian atera biar dogu arerijuen escubetati, salduric dau-

cagun vicitzia. Baña oneec ezdauquee guc leguezco oracarriric, ez aimbeste cec azcortu. Bacarric billa leiquee guichi batzuben aguinteta, ta iñoren ondo izate bacarra. Beragaiti bada, equin equin, ez oñic lotsagarriró atzeratu: jaijo dedilla ostera ta ostera aguinte ta adore barri bat guztioen biotzetan. ¿Aztu ete zaree leenagoco egun zorionecuetan aguertuten cenduben bijotzen jaubetasun ta bildurric ezaz? Igaro cenduben, gogaitcarrizcua zan erbestetasun, igaroten ain gacha bijotz quiquildubenzat. Zuben arteco batzuc ondasun guztiac galduric, ibilli dira Erroman escumunac eguiten, esquian leguez icharoten besteen ondasun apurrac. Ascoc ezaiñ ta lotsagarritzat eucana, igaro dozube isillic ta chitic eguin baga. Ichi gura badeutsazube guerraco burdina zorrotzari, artu biarco da billauquerijaco arma motz ta ugartuba. Baque zucen ta irauncorra billatu biar ez da, arerijuai arpegui azartuba aguertu baga. Goi dabillenac, iminten ditu gura dituban mugac, ta aguindu darua cer eguin biar dan, otuten jacon leguez. Gorputza zainduteco eguin dirian erremientac, ez dira gordeetacuac, ez macurtu ta beeratutecuac arerijuai. Bildurra bera baño galgarri andijagoric ez da. Azartú, azcór ta bijotz andicua danac, beregan darabil orma edo muru sendó burdiniac igaroco ecin dabena. Daruadazanian neure beguijac zubec ganuntz, soldadubac, ta azertuten ditudanian neuregan zuben lengo eguitada

sinisgach ta miragarrijac, goitu ta galdutzat daucadaz arerijuac, ta derichat, escura leguez jatorcula euren ondamendija. Zuben urte eder loratubac, zuben biotzetaco prestutasun ta jaubetasunac, neu vizcortu ta sututen nabee. Beste aldeti, premina, estura ta besteric ecin eguiñac, sendotu daruaz bildurti ta quiquildubenac. Inguruban artu ez gaguijezan arerijo pilluac, galerazoten dau toquijaren estutasunac. Igues eguiten badeutsa zori onac zuben bijotzetaco anditasunari, ez orregaitino macaldu, ez epeldu, ta ez emon eriotzia moteltó ta adore baga. Illaz, ill biar da, jazo ez dedin arerijuen escubeten jaustia, guero zatitu ta triscaubac izateco Obé da guizontsú burdinia erabilli, ta emotia eurai guerra irabazte gora, odoltsu ta damugarrija. Ex Crisp. Sallustio. cap. LVIII.

GERMANICOREN VERBA JARDUNA SOLDADU MACHINATUBAI.

---

Neure emazte ta neure umiac ez ditut maitiago nic, neure aita ta errija baño. Neure aitac arquituten dau buruba gordeetia bere anditasunian, ta Erromaco Aguintaritziac badauca baque ta iraupena bere arma-guizon ascotan. Zuben ondo izate ta icen ederra balego neure emazte ta une gaissuac galdutian, ipinico nituque edoccin arriscutan. Ba-

ña gorde ditut zuben aserro gogorreti, zubec zorroztu ta prestau dituzuben gañibetac, bacarric sartu ditezen neure bularrian, neure odolaren erijuaz ase albazadize, gueitu baga zuben gaistaquerija eriotzia emonaz Augustoren billoba, ta Tiberioren erreiñari. ¿Noraño dua bada zuben aberetasun, ceruraño dei eguiten dabena? ¿Ce icen emon neizube? ¿Soldadubena? ¿inguiratu onduan atrapetaco indar gogorrez zeuben Aguintari andijaren semia? ¿Erritarrena? Baña osticopetu dozube Batzaarra bere escuvidian. Ez deutsazube eceri lotsaric gorde, ez gente zucenen arteco legue artubei, ez bialquiñai, *(embajadores)* ez arerijuai. Igaro cirian egunetan, Julio Cesar-ec baquetuteco bere soldaduben artian jagui zan machinada osoa, etorri gura ez ebeela bere esanic eguitera, ez eban bururic ausi, ez miña moteldu, ez eztarriric garraztu jardun luciacaz; bacarric aitatu eutseen zoli zoli icen au: *Erromarrac:* beste baga beinguan etorri cirian bere escubetara, beriala baquetu. Augustoren arpeguiera ta beguiracune itzalsubac ipiñi cituban Accion (1) arritu, zurtu ta icaragorrijan soldau aldra jagui ta machinatu jacozanac. Bazaut ez nasala bardindutecua guizon andi aecaz; baña nator euren odoleti. España, nais Siriaco arma-guizonac eguin baleuste videbagaba damugarriren bat, igarocorra izango zan

(1) En el texto latino se lee *Actiacas legiones*.—NOTA DEL EDITOR.

enetzat: ez aserreric aguertuco neban, ez chit bat atera. Baña zubec, lenengo ta ogueigarrengo soldautziac, artu ezquero aimbeste mesede Tiberioren escubetati, batorrec banderac artubaz, ta bestioc bere lagun izan ezquero aimbeste esetsaldi edo batallatan, esquer onac emoten deutsazubez Tiberioren senide urco, gachic eguin ez deutsubenari. ¡Cein barri onac eruango deutsadazan neure aitari, beste lecu ascotati onac ta obiac baño artuten ez dituban orduban! Jaquin eraguin biarco jaco, celan bere soldau zar ta barrijac ez dirian aspertu, ez asten, ez dirubac artubaz, ez echeetara juateco anqueria emonaz. Emen bacarric billatuten dala eriotzia emotia, Euntarija *(Centurion)* urrindutia, aguintarija galdutia, catigu imintia Batzaarreco Ecautubac *(Diputados)*; zelai ta ibarretan basatu dala luurra Erromarren odolez, ta salguei daucadala neuc bere neure vicitzia, icusi gura ez nabeenen escubetan. Ori eguin biar bacenduben, asmo orrelangüetan bacengocen ¿cetaco quendu ceunsteen escubetati, neure bularra edeguitera neroian burdiñia, verba eguiteco lenengo unian? ¡O adisquide dongaró beguiratu ta erruqui baguiac! Obeto eguin eban, maitetasun gueijago eracutsi eustan ordu atan, burdiña zorroztuba esquiñi eustanac. Illgo nintzan beintzat, jaquin baga neure soldauben billauquerija ain esquerguia. Autuco cenduben edolan bere neure ordez beste buru, neure eriotzagui-

ñen atzian ibillico etzana, ta bai bacarric Varo eta (1) iru soldau pilloren eraliac billatuco citubana, oneen eriotzac damuerazoteco. Ez daguijala Jangoicuac gura inos, Belgiarrac buru arruac erabiltia, laguntasuna esquiniten deuscubelaco, esaten dabeela gure lotsagarriraco, «gure biar izan cirian Erromarrac »euren estu ordubetan: larri erabillezan arerijuac, »ta goitu aguinic: deitu euscuben erreguz leguez, »ta gu lagun guendubezala, gure indarren videz, ja»so cituben macurturic erabillezan burubac.» Ez, ez; iñoren biarric ez dogu. Augusto, beecua baño goicua gueijago zariana; Druso neure aita, eraatsiric dagoz oraindino zuben irudinac soldauben bijotzetan. Bestebaga, eguiñaren lotza ta damubaz asmo barri batzuc artuten asi dirianacaz, dinot, deseguin biar dogula lotsaari au, quendu gueure icen onari ezarri deutsagun cetaca ta ugarra, ta euqui dogun erricrta berau, izan dedilla caltetsuba gueure arerijuentzat. Barriz, arpegui eta bijotzetan aguiri dozunoc eguiñaren atsacabia, gura badeutsazubez biurtu Batzaarrari bere bialquiñac, aguintari nagusiari zor deutsazuben mendetasuna, niri, neure emazte ta umiac, aldeguizube donga atralacari, baquegatzalle orreetati, ta etorri zaitezé neure aldera. Au izango da zuben damu ta leijaltasunaren bai ta czagugarriric ederrena.

(1) En el original hay un espacio en blanco donde faltan las palabras *Varo eta*, que se han añadido cotejando el texto latino.—NOTA DEL EDITOR.

ESCIPIONEN JARDUNA ERREGUE GAZTE BATI.

---

Zu ta neu, bijoc gara gaztiac, ta ez nas lotsatuco neure gogoco barrijac aguertutiaz. Ecarri deustenian neure aurrera, beste catiguben artian arquituten zan zure emazteguceija, jaquin dot guztiz asco gura ceuntsala, ta bere edertasunac sinistu eraguin deust. Ezpaneranbil Errepubliquiac cereguin, ta arazo ardura andicuetan, ta beguiratu biar baneutsa neure gaztetasun ta bere escarijai; artuco neusquezu neuretzat, asmo galduric ez dodan ezquero. Neure escuban dot, bere jaube naz, baña gura dot igaro zugana, daucadan jaubetasuna, ta ez quendu zure onirichi ta maitetasunarentzat erabaguita eguana. Zure emazteguci aú egon da neure echian, aita batenian leguez. Ez deutsat lotsaric galdu, ta gorde dot bere garbitasunaren calte baga, zuri ta neuri dagocun esquintza garbi bat, zuri eguiteco. Esquer orde escatuten deutsut, izan zaitiala Erromarren adisquisdia. Baderichazu nasala ni guizon zucen ta prestuba, celangotzat egon cirian beste egunetan ta erri oncetan, neure aita ta osabia, jaquin eguizu, badiriala Erromaco urijan gure irudicuac, ta ezdaguala lurraren gañian bildurgarrijago bat arerijuentzat, ta maitagarrijagoric adisquideentzat. TITO LIB. XXVIII.

EXORDIO

de la oracion primera de Marco Tulio Ciceron en el Senado contra Lucio Catilina.

---

¿Nos artian guero bere, Catilina, jarraituco deutsazu dongaro eguitiari gure oneguitasunaz? ¿Nos arteraño, onaco zure aserre mugabaguiac euquico gaitu ain lotu ta macal? ¿Ce asmotaraco jaguico da zure lotsagabaquerija? ¿Ezeutsuben atzera eraguingo zeure gogo gaistuetati Palatino mendico gaujaolac, errico zainlarijac, ez erricuen bildurrac, ez on guztien alcartasunac, ez Batzaartoqui sendotu onec, ez enzun ez icusijac? ¿Ez deutsazu igarten ezagunac diriala zure asmuac? ¿Ez daquizu guztioen ezagüerara eldu dala, zuc jaso gura dozun machinada, urratu aguinic eguana? ¿Nor daguala derichazu gure artian, ez daquijanic celango lorrac, celango arazuac erabilli dituzun igaro dan urrenengo gabian; nun egon zarian, nortzucaz lagundu, ta ce videtzuc artu zeure asmo galduraco? ¡O egunac! ¡O ecandubac! Batzaarrac au badacus: Beguiraliac bazau. Guztiaz bere vici da Catilina. ¿Vici da? Dongago dana, aguertu da lotsa baga Batzaar onetan, bardinduten da beste aguintarijacaz. Emen bertan ezarten deuscuz bere begui malmutzac, ta ebaguiten dau, nortzuc gure artian artu biar dabeen eriot-

zia. Uste dogu alan bere, eguin dogula cerbait Errepubliquiaren alderaco, gordiaz gueure burubac onen aserre ta burdiña odolsuti.

Orain baño lenagoti, zuc Catilina, galdu biar cenduban vicitza gaistaguin ori Beguiraliaren aguinduz, ta eguin biar guenduban zeugaz, zuc gugaz eguin gura izan dozun ber bera. Araco guizon enzute ain andico Publio Escipion abade nagusijac, escuvide andi baga ill eban Tiberio Gracco Errepubliquiari calte erdi bat eguin eutsalaco; ¿ta largaco deutsagula baquian Beguiraliac garianoc, lur bira guztia suz ta burdiñaz deseguin gura daben Catilinari? Isten ditut bada aitatu baga jazoera zarreguijac, celan Q. Servilio Ahalac ill eban bere escuz Sp. Melio, ecandu barrijac sartu gura izan citubalaco beste baga. Izan zan bai, izan zan beste egun batzubetan legue zucena Errepublica onetan, guizon benetacuac cirianac, euren arerijuai baño castigu latzaguac emoteutsezanac, erri-caltegarrijac cirianai. Badaucagu zure gañian, Catilina, Batzarraren epai astun ta vizcorra. Baditu Errepubliquiac orretaraco vidiac, baita bere escuba emen batu dirianac. Baña dinot estalqui baga, gu, gu Beguiralioc gara erruba daucagunoc.

## EXORDIO

de la oracion segunda de M. Tulio Ciceron contra Catilina.

---

Guero bere nos edo nos, Erromaco Jaunac, edo atera dogu, edo urten eraguin deutsagu Uriti Lucio Catilina lotsa gaistuac su emoten eutsanari; dongaquerijaraco arnasac emoten citubanari, ebillenian zabaldu guraric, gaistaquerija utsez, Gurasoerrijan izurri ondagarrija, ta zubec eta Uri au zematuten citubanian burdiñiaz edo subaz; eta emendi urteteban orduban, jarraitu deutsagu agur betico bat eguiñaz. Juan zan, urteeban, aldegui-eban, ezcutau zan. Ez dau onezquero calteric eguingo errico orma barru oneetan, iñor ez leguezco gaistotzar ác. Goitu dogu bene benetan eche barruco errierten buru bacar au. Bere burdiña odolguirua ez da igaroco gure corputz-albuetatic. Ez gachacoz bildur izango, ez Marteren campuan, ez Auciteguijan, ez Batzaarreco aulquijan, ez ta bere gueure echeetaco orma barrubetan; destoquitu dogu, Uriti bota danian. Emendi aurrera, iñoc eragotzi baga, aguirijan ta vide zucenez equingo deutsagu arerijuari. Eguijaz ta benetan, galdu dogu guizatzar á, ta goitu dogu esquergaro, leza illun ta ezcutucuetati atera, ta bota dogunian lapur aguertuba izango dan toquira. ¿Celango atsacabiac joco ez

eban bere biotz gaistua bere burdiña odoltsuba jaso ez dabelaco gura eban leguez; urten dabelaco, gu viciric largata; bere escubetati quendu deutsagulaco burdiñia; ichi ditubalaco osasun onaz ta calte baga Uricuac, ta Urija bera zutinic leguez? Dago orain buruz bera auspazturic, ó Jaunac; bazau bere jausitasuna, baita bere artu dituban zaurijac; ta etzunda daguan toquiti, ezquelduten ditu bere beguijac chito sarri Uri onetarunz, negar eguiñaz atera dogulaco bere autzetati; ta neure ustian alseguiñez ase ecinda dago Uri berau, errebesau dabelaco, ta bota campora izurri ain donguia.

GUIZON DONGUEEN BIJOTZAC ZAURITUTEN DITU BARRUCO ARRAC.

---

Siracusarren Erregue Dionisioc, ondasun ta atseguin guztiac gura betian eucazan egunetan, berberac adierazo eban, etzala ez eguijaz zorionecua. Egun baten eguala Democles erichon, beste bere labanguillen artecua, Erregue onen soldau-pilluac, aberastasunac, andiquerija, gauza guztijen jaubetasuna ta Erregue-jauregui, edo echeen edertasuna gogora-erazoten, ucatuten ebala, izan zala iñor, ta iños dontsubagoric; ¿gura dozu, Democles, dirautsa Ereguec, onembeste atseguin emoten badeutsu

nire vicitza dontsubac, icusi ceure buruban, nasan edo ez benetan zorijonecua? Baietza arturic, aguindu eban Dionisioc, imini eguijela guizon assé bera urrezco oe baten, ta ezarteco oiari estalquiric apaingarrijenac. Ipini bere eraguin cituban arasa asco cidar ta urrez jancijac; ta maijaren albuetan mutillic ederrenac ta edertó soñocotu alcarren leijan, eguingo eutseenac aguinduten eutseen guztija. Asmau al, edo goguac emon al leiquian jaaqui mueta guztia prestau jacon: erre cirian suurrac gozatuteco usaingarriric ónenac: bacirian an lora ederrez eguinico aro edo guirnaldac, baita bere gorputza ereguetaco miritza edo bustigarrijac. Zorijonecotzat eucan ordu atan Democlesec bere buruba. Baña onic onenian, dacus zorioneco beguitandu onéc bere burubaren gañian burdiña zorrotz, leunaren leunez argui eguitebana, abe bateti esceguita beste oracarriric ezeucana, ezpada zaldi-ule edo zurda eten-erraza, nos bere gañera joco eban zain leguez egon biar ebala. Bildurtu zan buruti biatzetara: icara ebilcon bijotza, ta begui, larritasunac erdi lausotubac, ez eutseen eracusten ez bere esanac eguiteco prest egozan mutil ederrac, ez da bere apaingarri urre-cidarra erijuenac: azartuten ez zan maira luzatuten escuba, ill jacolaco jaateco gogo guztija: jó eben beia aurrian eucazan lora-aro edo coroiac. Esturasun atan asi zan erreguz escatuten bere Jaunari, zorijonecua cirudijan guizon

asse, larga eguijola arren, aric alde eguiten; ez ebala berac gura alango zoriontasunic. Dirudi bada, ederto adierazo ebala Dionisioc, ez zala iñor zorionecua, bildurgarriren bat bijotzian daguan artian. Ex Tul. Cicer.

FALISCO MAISUBAREN BILLAUQUERIJA.

---

Camiló aguintari edo buru ebeela Erromaarrac inguiratu cituben Faleriocuac. Oneen artian zan ecanduba orduban, mutilchu asco imintia iracasle baten pecuan, alcarregaz aci citezen. Jaquitunentzat eguanac, artu eruan jaun andijen semiai iracasteco lana. Baque egunetan atera eruazan maisubac mutilchu icaslac erri aurre edo atarira, olgau citezan, ta solastu toqui aisetu edo ascatubetan. Guerra egunac elduta bere, jarraitu eutsan maisu ác lengo ecandubari; ta egun baten oquer eguin guraz asmo gaistoz, ez arijan edo igarri baga leguez, urrindu cituban erriti, eruaterāño arerijuen ondora, ta Camilo guerra guizonacaz eguan toquira. Gacherechi eutsan Camilori alango billauquerija ta oquer eguin biarrac, ta esan eutsan maisu donga ari: «Ez dira zu-lacuac Erromarrac, ez ta aguintarija »bere. Ez dogu artu gura escu dongueetaric esquin»tza donguia. Alan guerra, celan baquiac ditube eu»ren muga, escubide ta leguiac. Ez da eguin biar

»ez, otu ta burura datorren guztia. Icasi guenduban »guc guerra eguiten sendó, bai, baña vide garbi ta »zucenez. Ez da zorroztu biar burdiñaric, escu ut»seetan ta burdiña baga dabiltzanen gorputz samur»rac igaroteco. Errijen jaube eguiten garianian be»re, indarrez artu arren, parquetan jaquee alanguai; »ta bacarric equiten deutseegu, burdiñac escubetan »ditubela, atsacabatuten gaitubenai». Aguindu eban bada billostu eguijela escola maisu billautzar á, ta escubac atzera loturic, eruan eguijela mutilchu aec aurrian, atera cituban errira: emon eraguin eutsan escubetara bacochari bere cigorra, jooca galantac emonda, gorputza zambrotu ta eratzijaz, sartu eguijen alan errijan. Zurtu cirian Faliscocuac icustian Erromarren prestutasuna, ta erabagui ebeen, edeguitia errico atiac, eurai deitutia, ta euren alde jartia vorondate osuaz, gomutauric alango guizon erruquior ta prestuben aguindubaren beian, zorijonecuaguac izango ciriala, lengo legueen azpijan baño. Esquerrac emon eutseezan Camilori, alan armadun guizonac, celan uricuac, ta baquia eguinda, biurtu zan Erromara soldau-aldra guztija. Ex. Tito Libio.

Fr. Enzun ditut atseguinic andienaz eusqueratuta, Erromarren verbeetan ondo apainduta egozan esacuncac. Sinistuco ez eben Bizcaitarrac bestelan, euren eusquerea zala ain aberats ta apaingarria. ¿Cer esango ete dau, dacusazanean verba jardun

oneec Jaun, Done Pedroren sermoia atera, edo eusqueratuten abiau zanac? ¿Lotsatuco ete dau? ¡Cein guichi! Esango dau ez dabela erdi verbaric aituten; imini dala, otu dan guztia, asmau diriala verbaac. ¿Eta noc atera bere lelo ta temati?

Ab. Ez da ardura. Jardun daguijela issiltzaca alango euscaldun chaarrac: ichi daijuegun burubac austen, gauza onic eusqueraz esan ecin dabeenai. Badazaube euren jaquineza; baña ez deutsube autortuco euren erruz dala, ezpada eusqueriaren laburtasuna gaiti. Euren gogoz, aztu eraguingo leuquee verbeeta, erderia baño leenago icasi ebeena. Escolan ebilzazanian, milla zemai ta aguiracaz bere, ecin ichi eutseen, eusquera verba eguitiari. Nequez ta odolaz leguez, sartu jaqueen erdera chaar bat euren buruban. Eta eusqueria biarren dabeen orduban, biraoca ta araoca leguez dagoz esanaz: *Arren secula jaijo ezpalitz eusqueria: urrinduta balego lurraren azquen, inor elduten ezdaneraño. Plaguiac balerua onelango verbeeta icasten gacha.*

Fr. Jangoicuac arguitu gura daguizala onelango guizonac. Ez dazaue, cein caltegarria dan euren alperqueri ta naguitasuna, icasten ondo, amaren bularreti dacargun verbeeta ederra. Urcatuco lituquee ascoc euren buruac, poruco legueric chicarrena galdu ez dedin. Barriz anchinagoti jatorcun eusquerea, galdu dedilla ordu onean. Asco da onembestegaz.

NOMENCLATURA

de diferentes voces bascongadas, comunes á los rústicos é ignoradas por no pocos de los bizcainos.

# A

Aazcorra.. . . . . . . . . *Olvidadizo:* item *de muchas creces de los verbos* aaztu *y* aci.

Abagadaunia. . . . . . . . *Intervalo cómodo para algo, como cuando escampa para caminar. Interregno se puede llamar* Abagadunia.

Abarra. . . . . . . . . . *Ramaje de árbol.*

Abaua. . . . . . . . . . *Panal de miel.*

Abespeluba. . . . . . . . *Destajo, desconcierto.* Abespeluban dabil, *anda á destajo.*

Abeguija, arreria, geria. . . *Acogida.* Abegui, arrera, edo gera ona eguin, *hacer buena acogida.*

Adaquija.. . . . . . . . . *Rama limpiada de hojas ó ramillas.*

Adeguijac. . . . . . . . . *Sienes.*

Adiuntzaz y adi-onez. . . . *A buen tiempo ú hora.*

Adijon. . . . . . . . . . *Lo preciso. Se conserva esta voz en el adagio:* Alaba bi, ta iru seme, adijon ume.

Alcarren leijan. . . . . . *A porfía ó competencia.*

Albastuan. . . . . . . . . *Sin finura.*

Amaitu, azquendu. . . . . *Finalizar, acabar.*

Allia. . . . . . . . . . . . *Cola.*
Añubia. . . . . . . . . . *Sombrio. De* añoa, *sombra.*
Anduija. . . . . . . . . . . *Tronco de árbol cortado que queda enterrado.*
Aotu. . . . . . . . . . . . *Tomar en boca.*
Aosabaija. . . . . . . . . *El cielo de la boca.*
Apapuban vici.. . . . . . *Vivir con miseria.*
Apoñuba.. . . . . . . . . *Blandura de tiempo.*
Aquiaculac.. . . . . . . . *Pretestos.*
Arlua ó sailla.. . . . . . *Cuadros de tierra en huertos y montes.*
Arcuntza onetan.. . . . . *En este rincon.*
Ardi-aldria ó artaldria. . . . *Rebaño de ovejas.*
Aroa. . . . . . . . . . . . *Circuito. De aqui* Izaro, *la isleta que se halla frente de Bermeo y significa circulo de mar*
Arracaldu. . . . . . . . . . *Abrirse por sí, como el erizo de la castaña y la corteza de la nuez*
Arrotza y erdalduna. . . . *Estraño ó forastero.*
Arretondo chaarra eguin.. . *Mirar con desabrimiento.*
Arrancaria ó amuarraña. . . *Trucha..*
Arraaia. . . . . . . . . . . *Palmo medida.*
Arzaña ó ardijaolia. . . . . *Pastor de ovejas.*
Asipena.. . . . . . . . . . *Principio. . . . . .*
Atzeracuntzia. . . . . . . . *Atraso.*
Atzetasuna eracutsi.. . . . *Mostrar estrañeza.*
Atzecua. . . . . . . . . . . *A veces el no pariente ó interesado.*
Atondu. . . . . . . . . . . . *Redondearse para algo; ponerse ó poner á otro en disposicion.*
Atralaquia: atralaca dabilz beti senar-emaztiac. . . . *Andan en continua camorra marido y mujer.*

Aturau. Ecin aturau lei onegaz . . . *No se puede averiguar ó hacer cabeza con este.*

Azarrija, azcarra. . . . . . . *Despejado.*

Azartu, azartuba, azartasuna. *Atreverse, atrevido, atrevimiento*

Autu, auqueria. . . . . . . . *Escojer, eleccion.* Auquera auqueran, *á todo placer.*

## B

Bacana. . . . . . . . . . . *Raro, ralo.* Bacán dator nire echera. *Raro vez viene á mi casa.*

Baidurija emon. . . . . . . *Dar muestras de licencia ó permiso.*

Banatu. . . . . . . . . . . *Dividir, partir, esparcir y cambiar.* Oguija banatu, *partir el pan.* Banatu da ganza au erri guztian. *Se ha divulgado esto en todo el pueblo.* Banatu eguidazu zortzi ducateco au. *Cámbiame este doblon de á ocho.*

Bardia ó zarbia, chusaquia ó garijia. . . . . . . . . *Ramillas de árboles ó chamiza. Todas las cuatro voces son sinónimas.*

Beilegui ú orija. . . . . . . *Color amarillo.*

Besenguia. . . . . . . . . *Vaca estéril.*

Beiseguija. . . . . . . . . *Vaca que tiene cria crecida.*

Berendija. . . . . . . . . *Zutano.*

Berecoija. . . . . . . . . *Amigo de hacer su gusto.*

Bezau, eci. . . . . . . . . *Domar.* Neuc bezauco dot. *Yo le domaré.*

Betaurrecuac. . . . . . . . *Anteojos.*
Birrindu. . . . . . . . . . *Dividir.* Birrindu ó banatuco dot. *Le destrozaré.*
Betseiña. . . . . . . . . . *Niña de los ojos.*
Betuliac. . . . . . . . . . *Pestañas.*
Betzintia. . . . . . . . . *Ceja.*
Betazpijac. . . . . . . . . *Ojeras.*
Betazalac ó betaliac. . . . *Párpados.*
Barallia, ospia. . . . . . *Ruido, alboroto.*
Batzacuncia. . . . . . . . *Junta ó congregacion; pero* batzaarra, *es junta de ancianos ó Senado.*
Barrutija. . . . . . . . . *Lugar recogido ó un cerrado.*
Basamortua. . . . . . . . *Soledad espantosa.*
Biciricatua ó missiricatuba. . *Hombre miserable, un para nada*
Biaztuna. . . . . . . . . . *Hiel.*
Birlandu ó biraldatu. . . . *Trasplantar.*
Birlorau; birlorauta ibilli. . *Andar azorado de gozo.*
Bisutsa. . . . . . . . . . . *Cerrazon.*
Bitsadera. . . . . . . . . *Espumadera.*
Buperia ó guperia. . . . . *Delicado, muy sentido.*

# C

Causinua, jaramon. . . . . *Caso aprecio.* Causino edo jaramonic ez eguin. *No hacer caso ó aprecio.*
Celba eguala. . . . . . . . *Estando fresca ó serena.*
Cematu, cemaija. . . . . . *Amenazar, amenaza.*
Cerceladia. . . . . . . . . *Circunstancia:* cer celan dan gaucia.
Cetaquia. . . . . . . . . . *Mancha.*
Cerdena. . . . . . . . . . . *Erguido, alto y derecho.*

Chaldana, gatz baguia. . . *Simple, fátuo, sin fuste.*
Chiricola. . . . . . . . . *Castaña mal engranada.*
Chiminua. . . . . . . . . . *Mono.*
Cimbrunia. . . . . . . . . *Silbillo que se forma con la caña de alguna yerba, como de trigo ó cebada.*
Cirindolia. . . . . . . . . *Varilla que se arroja y se forma con mimbre.*
Chirrindolia. . . . . . . . *Cosa que vá dando vueltas.*
Chitian potian *(frase)*. . . . *A cada paso.*
Chiribirija. . . . . . . . . *Mariposa.*
Ciatza, ciaztau. . . . . . *Mirado: desmenuzar la cosa.*
Cindua; sagar cindua. . . . *Manzana sana. Se aplica á un hombre fino, fiel.*
Cinzua. . . . . . . . . . *De recto corazon; sin doblez.*
Cigarra. . . . . . . . . . *Liendre.*
Ciscuba, ciscu estu.. . . . *Bolsa. Codicioso.*
Cicotza. . . . . . . . . . *Tacaño ó cicatero.*
Cioguija. . . . . . . . . . *Abariento; ó que corta el pan con escasez.*
Cinguiria. . . . . . . . . *Pantano.*
Cigorradia. . . . . . . . . *Golpe de vara ó castigo.*
Ciurra. . . . . . . . . . . *Recto, justo.*
Concorra; concortu. . . . . *Atolondrado; atolondrarse.*
Coldarra, coldartu. . . . . *Cobarde, débil; acobardarse.*
Cocotu. . . . . . . . . . *Quedar hecho un bobo.*
Ciorra (vide). . . . . . . . *Sendero.*

## D

Dalia. . . . . . . . . . . *Piedra radera.*
Dêbecau. . . . . . . . . . *Prohibir.*
Deijac ó deijerac. . . . . . *Proclamas.*

Doncellia. Nescatillia. . . . *Virgen. Es voz bascongada. Sus radicales son* dontsu é illia, elia *ó* ulia, *segun la variedad de los dialectos. Significa pelo dichoso ú honroso; y siempre ha sido en el bascuence insignia de honra de castidad, el traer las solteras descubierto el pelo. Las casadas y solteras corruptas, deben traerle cubierto. A lo mismo alude la voz* Nescatillia *ó Virgen; es decir: yo pido pelo:* nic escatu illia, *ó bien, yo descubro el pelo,* nic ascatu illia. *Por eso no quieren oir las honestas doncellas* Nesca *ó* Nesquia, *moza; sino* Nescatillia *ó moza en pelo. Hasta esto llega la curiosidad del idioma.*

Dontsuba. . . . . . . . . *Dichoso, feliz.*

Duin duina.. . . . . . . . *Lo muy preciso. Tambien se dice* zure duin *ó* lain bánaz: *yo puedo tanto como tú; y tambien,* izan nadin duin, edo biar bestecua; *para que sea capaz ó digno.*

Dulabria.. . . . . . . . . *De mucho remango.*

Durundija. . . . . . . . . *Ruido, golpeo. De aquí en bascuence el vocablo* Durendia *y en castellano duende, es decir, bullicioso, golpeador.*

Dardaria. . . . . . . . . . *Temblor y movimiento convulsivo.* Olzac dardar narabil.

Darda gañian erabilli *(frase).* *Traer al retortero.*

Durduba. Onec dauca durduba Hoc opus, hic labor. *En esto está la dificultad.*

# E

Ecandu, ecanduba. . . . . *Acostumbrarse: costumbre.*

Egoquija ó adjutuba., . . . *Cosa apta.*

Egoquijac *(en varios oficios).* *Los parroquianos.*

Emparau, emparauba. . . . *Sobrar; lo sobrado.*

Eregui, jaso. . . . . . . . *Levantar.*

Erberia. . . . . . . . . . *Rivera, por tierra baja y blanda para el trabajo.*

Epia. Epe galantecua. . . . *Plazo. De buena pachorra.*

Epaija. . . . . . . . . . *Corte: tambien sentencia.*

Eratzi. Eratzico aut. *Te abriré en canal.*

Eraatsi ó iraatsi. . . . . . *Pegar una cosa á otra.*

Erua. . . . . . . . . . . *Fatuo: iten roto ó pródigo.* Zaijetan ciogui, urunetan ero. *Mezquino en el salvado, y pródigo en la harina.*

Ercorua. . . . . . . . . . *Dedo pulgar.*

Erremuscadia. . . . . . . *Refunfuñamiento.*

Erretilluba. . . . . . . . *Plato del pais, que es de tabla y muy duradero.*

Erroa bota. . . . . . . . *Brotar ó echar renuevos.*

Erruba, errutsuba. . . . . *Culpa: iten fortaleza:* errutsuba da, edo erru andicua. *Es valiente, animoso, fuerte.*

Erregutau. . . . . . . . . *Replicar; pero* errегutu *suplicar.*

Eremuba. Eremutarra. . . . *Soledad: solitario, heremita.*

Eraatsija (senide). . . . . *Afin:* Aide, odolecua, *consanguineo.*
Erriertia. . . . . . . . . *Riña, disension.*
Erquina. . . . . . . . . . *Débil, imperfecto.*
Esetsi. . . . . . . . . . *Emprender ó acometer contra otro.*
Esamesac. . . . . . . . . *Hablillas, dicharachos.*

## F

No hay tal letra en el bascuence.

## G

Gabicua, gabicotu. . . . . *Haz en el lino: formar en haces.*
Garijia. . . . . . . . . . *Chamiza.*
Galerazo.. . . . . . . . . *Impedir.*
Galtzapena.. . . . . . . . *Pérdida y perdicion.*
Garua. . . . . . . . . . . *Humedad de las plantas tras el rocío.*
Garandoco bat emon. . . . *Dar un cogotazo ó pescozon.*
Gera ona edo chaarra eguin.. *Hacer buena ó mala acogida.*
Guilberia. . . . . . . . . *Cosquilloso.*
Guibel onecua. . . . . . *De buena pasta ó cachazo.*
Guiro ona. . . . . . . . . *Buen tempero ó disposicion de tierra.*
Guijau. . . . . . . . . . *Preparar, amoldar alguna cosa como la tierra para sembrar, el lino para hilar.*
Gorgoria.. . . . . . . . . *La cascarilla que contiene la semilla del lino.*
Guiberrija.. . . . . . . . *Ganado lanar, ovéjas, carneros, cabras, etc.*

Gomutau, gogoratu.. . . . . *Acordarse.*
Goguan euqui.. . . . . . . *Conservar en la memoria.* Goguango deubat, deunat ó deutsut. *No te lo echaré en olvido: amenaza.*
Gorrotua. . . . . . . . . . *Odio.*
Gomburu. . . . . . . . . . *Sobre medida; cuando se llena con sobra.*
Gueuna.. . . . . . . . . . *Nubecilla que se forma en el ojo.*
Güena. . . . . . . . . . . *Fin, término ó lo exterior de la cosa. De aqui multitud de apellidos tomados por las circunstancias de la casa.* Ibaigüen, *fin del rio.* Ibargüen *término de la ribera.* Urigüen, *fin del pueblo....* Ezniaren güena.
Güenian.. . . . . . . . . . *Finalmente.*
Gutarria, audiaquia.. . . . *Disputa, camorra.* Gutarrac izan ditut: *he tenido disputas encamorradas*

## H

Es letra supérflua entre los guipuzcoanos y bizcainos que no aspiran en las pronunciaciones; no así entre los bascos.

## I

Ibitu, chicartu. . . . . . . *Disminuirse, achicarse.*
Ispija ó pitina.. . . . . . . *Poquito.*
Igüina. . . . . . . . . . . *Asco, tedio.*
Iguitu. . . . . . . . . . . . *Moverse.* Iguitu adi, inguira adi, *muévete pronto.*

Imichia ó chimichia, . . . . *Chinche. Es voz bascongada por sus radicales significativas; el pellizcador.*
Ichurguia *por* ichurabagnia. . *Desfigurado.*
Ilinchia. . . . . . . . . . *Carbon mal cocido.*
Indrisquia. . . . . . . . . *Cerrazon de tempestad.*
Ingurau ó inguirau. . . . . *Rodear.*
Irriquitubac. . . . . . . . *Rendijas.*
Incirricatuba. . . . . . . . *Abertura.*
Iraurquina. . . . . . . . . *Hoja, helecho y broza que se recoje en el monte para hacer estiercol.*
Irona, era onecua. . . . . . *Cosa del caso, ventajosa.* Lecu irona, *lugar ventajoso;* era onian etorri ciriau: *en buena ocasion vinieron.*
Inquia, barruco inquia.. . . *Escozor interior; remordimiento.*
Irritu, irrituba. . . . . . . *Renegar, renegado.*
Irabijau. . . . . . . . . . *Mudar algo de una en otra postura.*
Iribijau eznia, ta arrautzac. . *Deshacer la leche y huevos revolviéndolos.*
Iñutu. . . . . . . . . . *Poner con nodriza á la criatura.*
Inustu. . . . . . . . . . . *Hozar.*
Itundu, verbatu. . . . . . . *Convenir de palabra.*
Itzulastu, atziaz aurrera gaucia imini.. . . . . . . *Trastornar.*
Itzindu. . . . . . . . . . *Descabezar el trigo en la heredad. Asi siegan en varios pueblos.*
Itu ituba. . . . . . . . . *Lo muy preciso.*
Ituba.. . . . . . . . . . *Objeto de alguna cosa. Por ejemplo, el blanco de los tiros*

*se llama* ituba. *De aquí los castellanos, dió en el* hito *ó en el blanco.*

Iguiribija. . . . . . . . . . *Nutria.*

Izoquiña.. . . . . . . . . *Salmon.*

Izuba: izutu. . . . . . . . *Espanto, espantarse.*

Izteguija. . . . . . . . . *Muslo.*

## J

El bascuence no pronuncia esta letra con el guturismo castellano, sino como los latinos y casi todos los demás idiomas. Los árabes dejaron en España esta torpe y violenta pronunciacion, y ha pasado tambien á los guipuzcoanos y á algunos de los pueblos de Vizcaya confinantes con estos. Pero los bascos y la mucha mayor parte de los bizcainos conserva su antiguo y original uso. Ja, je, ji, jo, ju.

Jaramon.. . . . . . . . . *Caso, aprecio.* Ez jaramon. *No hacer caso.*

Jadetsi; ez dot mecia jadetsi. *Alcanzar. No he alcanzado la misa.*

Jangarzuba.. . . . . . . . *Inapetente, mal comedor; se aplica regularmente á la inapetencia de las bestias.*

Jaon, jaolia. . . . . . . . *Guardar ó cuidar. El cuidador. La voz jaula de los castellanos viene de este origen y es carcel ó custodia de los pájaros.*

Janci. . . . . . . . . . . *Vestir; pero se aplica á pedir algo de prestado.* Janci naguizu zortzi-ducateco bategaz.

*Préstame un doblon de á ocho. Los bascongados conservan aun los altos y bajos de esta moneda, llamándola,* ia zortzi-ducatecua, *ia* amaseicua, *ia* ogueicua.

Jarqui.. . . . . . . . . . *Hacer frente, acometer.* Jarqui aquio. *Opóntele.*

# K

Esta letra es supérflua en el bascuence, así como en el idioma castellano, porque la *c* y la *q* bastan para escribir lo que exige su pronunciacion. Los bascos la usan mucho sin dar razon para ello.

# L

Laacua. . . . . . . . . . . *Palo atravesado.*

Laarra. . . . . . . . . . . *Pasto; item zarzal.*

Laandu. . . . . . . . . . . *Desbastar.* Arlanduba, *piedra desbastada.*

Laquia. . . . . . . . . . . *Hilo ligeramente torcido. Item el tanto de libras de trigo ó maiz que lleva el molinero por la moledura. Lo mismo es* meendia.

Lacazquija. . . . . . . . . *Tenaza de palo con que se abre el erizo de la castaña.*

Leusua. . . . . . . . . . . *Neblina. De aquí* ipar leusua, beguijetaco leusua.

Lér, edo estanda eguin.. . . *Reventar.*

Larranza. . . . . . . . . . *Traza de bien pastado ó alimentado.*

Laquetu. . . . . . . . . . *Permitir, consentir.*
Larrapastau. . . . . . . . *Tropezar resbalando.*
Laruba. . . . . . . . . . *Ictericia.*
Lagantau, lagantia. . . . . *Pegarse con importunidad: petardear, petardista.*
Lanteguija. . , . . . . . . *Oficina.*
Lamiña. . . . . . . . . . *Laminero. Es voz bascongada y significa chupadura de lengua, que es de goloso.*
Larrambillua. . . . . . . . *Flor de manzanilla.*
Larrapusta ó erbatza. . . . *Lino de la infima clase.*
Laurendu. . . . . . . . . *Descuartizar.*
Lelua. Betico lelua. . . . . *Cancion ó sonsonete contínuo.*
Lema emon. . . . . . . . *Dar satisfaccion.*
Lerdena, luzanguia. . . . . *Largo y tieso.*
Liraña. . . . . . . . . . *Largo y delgado.*
Landia. . . . . . . . . . *Campiña trabajada ó apta para ello: de* laná *trabajo. Se distingue de* zelaija, *que es pradera, é* Ibarra, *que significa campo próximo á rio.*
Linatacia ó chingorra. . . . *Granizo.*
Locatu zaite. . . . . . , . . *Muévete para esto ó lo otro.*
Locatu oñac. . . . . . . . *Se dice cuando un borracho no se puede tener en pié.*
Lotsoorra ó. lotsatija. . . . *Vergonzoso.*
Lotsaarijac. . . . . . . . . *Partes pudendas, con expresion modesta.*
Luzanguia. . . . . . . . . *Zanqui-largo.*

## M

Maduria. . . . . . . . . . *Rivera.*
Macharra. . . . . . . . . *Ruin.*

Malmutza. . . . . . . . . . *Marrajo, sollastron.*
Maluscauba. . . . . . . . *Decaido, debilitado.*
Mardua. . . . . . . . . . . *Rollizo, gordinflon; y en árboles sano y grueso.*
Miazcau. . . . . . . . . . . *Lamer.*
Miliquia ó milina.. . . . . . *Melindroso.*
Miatsa. . . . . . . . . . . *Raro ó ralo.*
Mingocha, mingochtasuna. . *Amargo, amargura.*
Mintza. . . . . . . . . . . *Tela delicada, como en la cebolla.*
Mormorijua.. . . . . . . . *Murmullo.*
Muquerra. . . . . . . . . . *Esquivo.*
Murritu. . . . . . . . . . . *Despojar á alguno de cuanto tiene.* Diru murri dago edo nago. *Estoy sin ochavo ó lo está.* Burumurri. *Calvo.*
Muquirijua. . . . . . . . . *Monton de trigo, nueces, etc.*

## N

Nabarmena. . . . . . . . . *Desaliñado, descompuesto.*
Natuba. . . . . . . . . . . *Mancha.*
Neurdin. . . . . . . . . . . *Como quiera. Por ejemplo, en vano quebraré la cabeza contigo,* neurdin alperric ausico dot zugaz buruba.

## O

Obena. . . . . . . . . . . *Propiamente es declinacion para abajo. Vicio de alguna cosa.* Echiac oben eguin dau. *La casa ha hecho vicio. Se aplica á las pasiones dominantes.*

*Ejemplo. El hombre está inclinado á lo malo desde su infancia.* Guizona umetati obendu, griñatu edo macurtuba dago gachera.

Obaasuna. . . . . . . . . . *Mejoría.*

Obija. . . . . . . . . . . *Hoyo; sepulcro; como en* illen obija; carobija, *calera.*

Ornidu ó imini ornijan. . . . *Poner algo en seguridad ó depósito, sea en el juego, sea en el apueste, para que lo lleve el ganador. Tambien se aplica al préstamo.* Ornidu eguidazu, *préstame.*

Orubija ú Orubia.. . . . . . *Paraje descubierto.* Eche orubia, *se dice de un lugar en que antes hubo casa, y está apto para erigir otra.*

Orbana. . . . . . . . . . . *Mancha que deja alguna herida, y equivale á cicatriz.*

Ospia; ospetsuba. . . . . . *Bulla; bullicioso.*

Otscinac ú oguitucuac. . . . *Criados ó sirvientes; es decir, en etimología, los llamados y los alimentados; porque los criados son mandados ó llamados, y tambien alimentados con pan.*

Onilla. . . . . . . . . . . *Embudo.*

Oijac. . . . . . . . . . . . *Encias.*

Oituba, atara eguiña.. . . . *Acostumbrado.*

Ossiña. . . . . . . . . . . *Agua profunda.*

Orriquia. . . . . . . . . . *Tenazas de ferrería.*

Otzperia.. . . . . . . . . . *Sensible al frio ó friolento.*

Otu. . . . . . . . . . . . *Antojársele.*

Ot. . . . . . . . . . . . . *En los compuestos es síncope artificioso de* oguija, *pan. Los derivados* otondua, otazala, otarria, otapurrac, otpilla. Otzaria, *es propiamente el cesto en que se conduce el pan y* zaria, *cesto en general.*

Otzana. . . . . . . . . . . *Manso;* bildots otzana, *cordero manso.*

Ozquirrijua.. . . . . . . . *Tiriteo del frio.*

## P

Padarra ó eremutarra.. . . . *Solitario, el habitante de los desiertos.*

Parlanzuba.. . . . . . . . *Festejo, entretenimiento de regocijo.* Chacurchubac parlanzuban dabilz.

Pecua.. . . . . . . . . . . *Proteccion.* Berorren pecuan nago; *estoy entregado ó bajo de la proteccion de usted.*

Penzudia. . . . . . . . . . Zure penzudaan ¿nor egongo ez da? *Quién no ha de estar confiado en ti?*

Perreztupia. . . . . . . . *Véase* larrapusta.

Picorra. . . . . . . . . . *Grano.*

Pipitia. . . . . . . . . . *Pepita.*

## Q

Quiñutu. . . . . . . . . . *Hacer seña de amenaza.*

Quiquildu, quiquilduba. . . *Apocarse, apocado.*

Quimautu ó orriuldu. . . . *Deshojar las ramas.*
Queberia. . . . . . . . . *Sensible al humo:* begui queberac euqui.

## R

Ningun vocablo bascongado empieza con la letra R. Estas voces compuestas, *Recalde*, *Renteria*, *Recacoechea*, están escritas con imperfeccion y les falta la E, y debe decirse *Errecalde*, *Errenteria*, *Errecacoechea*, etc. Los escritores han seguido el gusto castellano; los que á las voces bascongadas *arrabia*, *arratoia*, *erriberia*... las han querido desfigurar quitando las precedentes vocales para decir rabia, raton, ribera. La descripcion de estas voces está en el bascuence: *Arrabia*, significa comienza el gusano; con este tropo se explica el furor. *Arratoia*, significa el roedor que sube á los altos; el raton roe y sube á los techos. Ribera, es *erriberia* ó tierra baja.

## S

Salobria ó salua. . . . . . *Devorador en comer.* Chacur au salobria da: *Este perro es inhartable.*
Samiña. . . . . . . . . . *Amargo.*
Sarraquijua sartu. . . . . *Meterle el judio en el cuerpo.*
Senian ibilli. . . . . . . . *Andar á tientas.*
Solaija; bei solaija. . . . . *Vaca cebada en las heredades y que brinca los setos.*
Solasa. . . . . . . . . . *Juegos entretenidos y alegres.*
Sonia: Nescatilliaren sonia. . *Qué muchacha tan chistosa, graciosa!*
Sucurrustau. . . . . . . . *Meter el espanto.*

Susmau; susmia. . . . . . . *Sospechar; sospecha.*
Soldu ó zoldu. . . . . . . . *Madurarse la hinchazon.*
Sopiñua. . . . . . . . . . *Argolla formada con un biruerto para ligar los terneros.*
Sumindu. . . . . . . . . . *Enardecerse en cólera.*

## T

Taijuba. . . . . . . . . . . *Figura, traza.* Taiju onecua. *De buena traza, parecer.*
Tematu; temia. . . . . . . *Porfiar, apostar; porfía, apuesta.*
Tint, chito, guztiz. . . . . *Signos superlativos.* Tint ona; *muy bueno.*
Triscau, trimindu. . . . . *Despedazar.*
Tramanculuba. . . . . . . *El armazon de alguna máquina, como de telar, etc.*
Tortiquia. . . . . . . . . . *Costra.* Celango tortiquia daucan gaiso onec bere miñian! *Qué costra tiene este enfermo en su lengua!*
Truijuba. . . . . . . . . . *Tempestad de lluvia.*

## X É Y

Son letras supérfluas en el bascuence.

## Z

Zaijua. . . . . . . . . . . *Recelo; viene de* zau-jua; *se dice en castellano, me dió la vena, recelé.*
Zalá. . . . . . . . . . . . *Fuerte, robusto.*
Zalguia. . . . . . . . . . . *Cizaña.* Zalguia, *significa en eti-*

*mologia, sin fortaleza, débil, inútil. Tal es la cizaña para el uso humano.*

Zamia. . . . . . . . . . *Carga.*

Zematu, zemaija. . . . . *Véase* cematu.

Zanzua. . . . . . . . . . *Es la voceria gutural inarticulada, de que se valen los bascongados, ya para desafiar, ya para cantar la victoria.*

Zaparrastau. . . . . . . . *Abatir á alguno, darle una buena mano.*

Zorabijua-burucua. . . . . *Atolondramiento de cabeza.*

Zolija.. . . . . . . . . . *Fuerte.* Guizon zolija. *Hombre fino, valiente.* Begui zolijac, *ojos vivos, perspicaces.* Belaarri zur ta zolija; *oido delicado ó de mucha percepcion.*

Zurbilla. . . . . . . . . . *Descolorido, macilento.*

Zurculuba, oculluba. . . . *Escondrijo, rincon.*

Zutoia. . . . . . . . . . *Tronco preparado para algun servicio.*

Zuurra. . . . . . . . . . *Despejado, avisado; de aquí los castellanos zurrar.*

## V

Esta letra en rigor es supérflua y basta la B.

## U

Ugabia. . . . . . . . . . *El palo de que se tira al chinbo en la ferrería.*

Uldu orrijac ó quimaatu. . . *Quitar con la mano á las ramas las hojas y ramillas.*

Ulabijua, curuminua. . . . *Abispa.*
Ulertu. . . . . . . . . . *Comprender.*
Uzarquia. . . . . . . . . *Mal domado y criado.*
Uzuba. . . . . . . . . . *Fiero, indómito.*
Usin eguin.. . . . . . . *Estornudar y* arrausi eguin *bostezar.*

---

# ÍNDICE.

